# HIL ALA BIZI

Xabier Amuriza



euskal literatura

ELKAR

XABIER AMURIZA, 42 urte,
Bizkaiko Etxanoko Torreburu baserrikoa. Apaiz izana Gizaburuaga eta Amoroto izeneko herrietan. Hiru bider preso egona, guztira zazpi urte, ia denak Zamoran. Oraintsu berriro epaitua Madrilen, erregeen etorrerako gorabeherengatik. Bi bider Euskal Herriko bertsolari txapelduna, Zornotzan bizi da, Arantza Plazarekin ezkondua.

Duela hamar urte munduratu ninduten, norena nintzen ere ez zekitela, LARRAUN izenordez. Zamorako espetxetik zirriborroan atera nindutenetik, -balekite nola!- zenbat eskuk isilpean eta arriskuz jaio erazi ninduten ez daukat, ez, ahaztua, naizen arte. Orduan ezagutu nindutenek zerbait aldaturik aurkituko naute orain, hamar urtetan ni ere mutildu egin bainaiz. Lehenengo jaiotza hartan hainbeste lanez eta zailtasunez plazaratu ninduten guztiei -nola hasiko naiz, ba, izenak ematen?- eskaintzen diet bigarren jaiotza hau.

Hil ala Bizi

## ESNEA ETA BEHAZUNA

Aita Santuaren asmoen alde, pater noster —esan zuen amonak ohetik—. Gure Aita, zeruetan zarena... zeruan bezala lurrean ere.

Isilune bat gorde zuen, inork ez ziola erantzungo jakinik.

Bartel patata zuritzen ari zen sukaldean, amonarengandik hiru metrotara, sukaldea eta gela elkar jotzen baitzeuden, sekula ondo itxi gabeko aste astunez banatuak. Bartelek ba zekien erantzutea tokatzen zitzaiola. Zertarako, ordea, ohitura zaharrik aldatu? Hamar urte ziren azkenengoz erantzun ziela amonaren —bere amaren— errezuei. Euria bota ahala ari zen kanpoan.

Teilatutik estratarako ehundaka itaizurek eten gabeko zaparrada ateratzen zuten. Euriaren hotsa eta amonaren errezuak arreta berdinez entzuten zituen Bartelek. Nori bururatuko litzaioke euriari erantzuterik?

— Agur, Maria, graziaz betea... zure sabeleko frutua Jesus.

Isilunea berriro. Zer axola zioten Barteli Aita Santuaren asmoek? Bereek Aita Santuari axola zioten hainbatsu. Amonak bizi guztia zeraman Aita Santuaren alde pater nosterka. Alda berri zenik ere ez zekien. Nola jakingo zuen,

ba, aita santua beti bat bera zela eta Paternosterren bizi zela uste baitzuen?

— Etxe honetako aziendengatik, pater noster.

Hori entzutean, irribarre zorrotza zerion Barteli. Txiste bikaina noski. Sasiak eta otak lotsagabeki irentsiak zituzten basoak, segaren edo suaren bildurrik gabe. Satorra nagusi zebilen soro eta belardietan. Urteak ziren haren aitasoen arbasoek azkenengo haitzurkada etsaia ezagutu zutela, gainpopulazioa zutelarik oraingo problema bakarra. Ganbarako piztitxoak aspaldi emigratuak ziren, bizitzeko behar zuten gai apurraren bila. Behia eta astoa ziren gortako bizilagun bakarrak. Sabai haundia, hutsik belarrez, beterik amarauz, inguruko saguxarren ostatu. Zuritzen ari zen patatak ere kiloka erosiak zituen. Larraungo etxäguntza, behinola oparoa, patu okerrak eraman zuen erruki gabe, ibai haundiak gorpua bezala.

— Etxe honetako aziendengatik, pater noster.

Mirakuluren bat espero al zuen amonak? Gerta baledi ere, adar jotzea lukek orain, pentsatzen zuen Bartelek. Amonak ere ba zekien hainbeste. Inork baino hurragotik ikusi zuen Larraunen gainbeheratzea. Baina fedea ikusten ez dena sinestea dela irakatsi ziotenez gero, ba zen han zer sinestu, ez baitzen ezer ikusten.

— Etxe honetako defuntu-defunten alde, pater noster.

Eskari honi arrazòizkoago zeritzan Bartelek. Inor ez duk handik errezuen eskerrik ematera etorri, baina alferrekoak direla esatera ere ez. Beharbada beste munduan harrapatuko ditiak Larraungo aziendak.

Azkenengo patata zuritu zuen. Lapiko txiki beltza hartu eta hara bota zituen, bakoitza lau zati eginik. Urez bete zuen, porru triste bat sartu zion, hosto eta guzti bera, eta beheko suan egosten ipini zuen, amonak arreoan ekarritako altzeiruzko trebera haundiaren gainean.

— Sinesten dut...

Amonak, kredoa hortz artean murmurikatu bitartean, arrosarioak batu, gurutzeari mun eman eta oihal sendozko poltsatxoan gorde zituen. Poltsatxo hartantxe zeuzkan bere gauza partikularrik kutunenak: albandorratza, artilezko matazatxoari sartua, bi hari xirrika, zuria eta beltza, ditarea eta orratzontzia, letra haundiko eliz liburutxoa (apenas irakurtzen zekien, baina«pigurei» eta estanpei eskerrak, eta batez ere hainbeste urtetan pasa eta berpasa ondoren, buruz zekien dena), betaurreko merke batzuk josteko, —batez ere orratzari haria sartzeko—, adabaki batzuk, zazpi hogerleko, bi pezeta gorri eta zazpi txakur, zapitxoan korapilatuak, aitona defuntuaren oroikarria eta bere neskatako argazki bakarra, koadrutxoan poliki jarria.

Kordeltxo batez muturra lotu eta ohaburuan eskegi zuen poltsatxoa. Bukatua zen eguneko boskarren arrosarioa. Ez hala ere kezkarik gabe, egun osorako gutxi baitzeritzan. Normalean zortzitik gora errezatzen zituen. Gaixorik zegoenean, haren afana, besterik ez zezakeenez gero, ahalik gehien errezatzea zen. Bizitzaren zentzu bakarra lana zen, edo hobeto agian, lanpeturik bizitzea.

Nola mugimendua inurriari, hala zitzaion lana amonari. Lanari buruz neurtzen zuen dena. Osasuna lanerako zen. Areago, lana bera zen osasuna. Gizatasunaren esentziaren definiziorik eskatu balitzaio, (gizatasuna, esentzia eta definizioa zer diren jakitera, noski), dudarik gabe erantzungo zuen gizatasuna lanerako gaitasuna dela eta alperkeria gizatasunaren ukapena.

Marxek ere esan omen zuen antzeko zerbait. Langileria, klase burruka, burruka klasea, alienazioa... Amonak ez zekien alienazioaren berririk. Eskolara buelta batzuk bakarrik egina zen, zortzi urtekin gurasoek artzain bidali baitzuten. Hantxe ikasi zuen gizakumearen egitekorik zai-

lena eta haundiena: Bizimodua atera. Bizimodua ateratzeko era bakarra berriz, lapurreria baztertzekotan, lana zen, lan neketsua, ez baitzuen errezik ezagutu.

Areago, neke gabeko lana susmagarri zitekeen, nekea baitzen haren buruan lanaren esentzietariko bat. Konbentzimendu hauetarako ez zuen, ez, ekonomia ikasi beharrik izan. Bizimoduak berak irakatsi zion, eguneroko ihardunean. Zortzi seme-alaba bereak eta hiru inorenak hazi zituenak, gerra osteko hondamendian etxea hutsetik jaso behar izan zuenak, ez zeukan beste konklusiorik ateratzeko astirik. Gainera, onenean ere, hantxe zeuden urteroko ezbeharrak, batzuk ez ustekoak, baina maizkorregiak: Lehorteak, izozteak, gorrina, abere hilak... eta beste batzuk jakinak, baina okerragoak: abastozkoak, zergak, estatua... Denak ziren harentzat berdinki «parte txarrekoak». Hauek baketuz gero, ezer sobratzen bazen, pozik. Amorentzat okerrik haundiena oheratu beharra zen, azken urteetan maiz gertatzen zitzaiona hori ere, neguan batez ere.

Astebete zeraman ohean, eztula eta hotza menderatu ezinez. Baina ez alperrik, ez probetxu gabe, errezuz hornitzen baitzuen lanez ezina. Egun hartan, ordea, bost arrosario bakarrik! Arratsalde txarra pasatu zuen, buruko min haundiak eta eztulaldi gogorrak. Azkenengo negua? Bazerabilen pentsamenturik franko buruan, bai eta mihian ere, pentsamenturik ezkutuenak ere boz goraz esateko ohitura baitzuen aspaldidanik. Nola nori kontaturik ez zeukan, bera zen bere saminen esale-entzule. Bi alde on zituen bakarreko elkarrizketa hark, ez baitago inor, norbere mina norberak baino arretazago entzun dezakeenik, ez eta arriskurik ere, batek hain gartsuki adierazia bestek ezaxolki entzun dezan.

— Ai, ene ointxoak! Berotuko al zarete noizbait ala hoztuko betiko?

Hanketako ur bero botila kanpora atera zuen. Mantez gainera zeukan beste hainbeste prendari —abrigua eta gabardina zaharra, atorra, mantala, zakua, edozer— eragin zion, han hemen ukituz eta ertzak sartuz.

— Ai, ene Jesus! Etxe guztia ohera hustu eta berotu ezin. Eta gau luzea gainean. Hau burua daukadana. Ai! Eta bularra. Eta eztarria. Eta gerria. Ai! Baina ba al dut ezer onik? Ene Jainkoa! Honenbeste sufri...

Ezin izan zuen hitzik amaitu. Ohea ordenatzeko mugimenduek —hain gutxi behar ere— egundoko eztulaldia ekarri zioten. Eztuletik eztulerako tartetxoetan, hasperen solteak entzuten zitzaizkion:

— Ai! Ene! Ito! Ai! Ama! Birj! Barka! Bartel!

Herioak azken arnasa bazeramala zirudienean, zintzurrean behera zirritu bat irekitzen zitzaion eta aire pitin bat heltzen biriketara, bizirik ez iraungitzeko lain. Eskuak laxatzen zitzaizkion eta begitartea malgutzen, baina eragina oinetara orduko, birikek errea zuten oxigeno apurra eta berriro lehengo prozedura bera. Nekez sinets zitekeen laurogei urtetako atsoak hain mugimendu bizietarako indarrik eduki zezakeenik. Ez zen, ordea, indarra, biziaren eta heriotzaren arteko —hotsaren marran bezala —dardara baizik.

Bartel suari puzka ari zen fusil kainoi batetik. Gerratean etxeratu zuen, baina ez baitzuen tiratzeko balio, auspotarako egokitu zuen. Sendoa eta batez ere merkea, sekula ez apurtzekoa. Lapikoari tapa altxatu eta zurezko koilare beltzez eragin zion. Porru berde usaina oraindik. Amonaren auhenak eta hasperenak entzuten zituen, baina errutina hutsez, egunero hainbat aldiz entzuten baitzituen. Zer egin zezaiokeen berak? Ezin, nahi eta ere, haren birikei putzik egin.

— Bartel! Bartel!

Zertarako joan, ordea? Hark arnasa behar zuen, ez Bartel. Hartan, blast eta ai agoniko bat. Fusil kainoia jaurti eta azkar abiatu zen. Gelako atalburua iraganez batera, —ilunetan zegoen dena, sukaldetik zetorren argitxoa hutsa baitzen —beheko multzo batekin tupust egin eta muturrez aurrera erori zen.

— Ai! hotsegin zuen berriro beheko multzoak. Orduantxe konturatu zen Bartel multzo hura amona zela ohetik behera eroria. Kontuz bezain bizkor zutitu eta kriseilua ekarri zuen. Han zetzan amona, manta eta arropa artean galdua. Hilda? Ohera altxatu eta leihaz bilatu zion aurpegia. Begiak itxita zeuzkan, begitartea zurbil eta zimur, pixka bat laxatzen hasirik. Heriotzako lehen laxadura ote zen?

— Ama! —hotsegin zuen Bartelek, ahurra bekokian zehar leunki pasatuz. Urteak ziren hitz hura azkenengoz esan zuela, nahiz eta biak bakarrik bizi. Ama hitzak, agiraka edo burla egiteko bazen ere, samurtasun pitin bat behar zuen bederen. Bartelen baitan, samurtasuna aspaldi iharturiko landarea zen, ondora azidoa bota baliote bezala.

Ama! —hotsegin zuen berriro.

Euria ater gabe ari zen kanpoan. Afrontuak aurrez jotzen zuen leiho zaharra, zirrituetatik ura barra-barra sartuz gelara. Bartelek matrailak estutu eta hortzak garraskatu zituen, amaren heriotzaren eta bere bizitza madarikatuaren errudun guztien hezurrak ehokatuz. Sagu batek zokondoko botila amarautsuen artetik muturra agertu zuen. Ez zegok hemen arriskurik, zer osturik ere ez baina. Amonak begiak ahulki ireki zituen, ezpainak errezuka bezala mugituz. Bartelek hiltzat emana zuen, baina ohetik beherako kolpeak biriketako bidea libratu bide zion eta poliki hartzen zuen arnasa. Oraingotik apartatu duk. Hurrengoan...

Ikuiluko lanak egiteko zituen Bartelek. Ez lan haundirik, baina apur huraxe ere gehiegi izan. Goragale larria sentitzen zuen. Derrigorra, ordea, ikuilura joatea, hantxe baitzegoen etxeko bizipide bakarra: behia eta haren esnea.

Kriseilua eskuinean eta kantina bat ezkerrean, ikuiluan sartu zen. Antxinako zibilizazio haundiren bateko hondamena zirudien: hezetasuna, iluntasuna, bertan beheratasuna. Eta erruina artean galdurik, baina bizirik oraindik, zibilizazio hartako hondakin bakarrak: behia eta astemea. Han zeuden biak, behinolako ikuilukadaren —zortzi behi, hamar txahal, bi zerrama eta ehun ardiren —hutsune tristea salatuz.

Errapea bigundu eta ba ziharduen ziri-zara, behitxoak egunaren barruan bilduriko esne apurra jaisten. Makinalki ari zen, ezer pentsatzeke. Ikuiluko beste ertzean ba zen nork pentsatu Bartelen ordez. Astoa alajaina. Neguteak ilea harrotu zion. Begirada tentela, nondik ez norarik gabea. Feriarik feria erabili zuten, hemen ostu han saldu, destinoak Larraunera ekarri arte. Bizimoduak ez zion, ez, lausengurik eskaini, emea izan arren. Udazken sargori batez, azkenengoz giri egon zenean, otatza bati loturik eduki zuten. Gorien zegoela trumoiak jo zuen eta txingorrada negargarria erori zitzaion gainera, gorputz osoak hain gartsuki eskatzen zion maitalearen ordez. Maitasuna ez egon nonbait astoentzat egina. Sekula gehiago ez zen giritu. Emetasuna betiko galdu zuen, astotasuna bakarrik

geraturik. Han zegoen etsipenaren momia bezala, aska zaharrari loturik. Nolanahi ere, haren patuak jabearenari loturik egon behar, eta jabea, hots, astoaren beharra duena, esklabo deino, nola zezakeen ilusiorik egin? Dilindan zituen belarrietarik bat tentetu zuen, pentsamentu abstraktuaren erreinutik jetxi eta zer konkreturen bat hauteman balu bezala. Bestea ere tentetu zuen —biak batera gehiegi izaki— eta Barteli eta behiari begira-begira jarri zen. Zertan ote ziharduten? Kriseiluaren argi apurrera, ez zezakeen ondo berez. Losintxaka ala maitasuna egiten? Bera ere noizbait emea izan ote zen gomuta lanbroa etorri zitzaion. Behi haren lekuan egotea ere desiratu zuen. Baina bere pentsamentuaz damuturik eta esne jaiste eskena hari lotsagabekeria eritzirik, belarri tenteak erori zitzaizkion. Ez zaidak batere gustatzen. Astotasunaren pentsamentu abstraktura itzuli zen.

Esne jaistea bukatzean, Bartelek behiaren bizkarrean zehar leunki pasatu zuen ahurra, mokorretik garondoraino, eta bekokia eta mutur bueltak hazkatu zizkion. Txurik, Larraungo agoniaz oharturik, kantinara muturra hurbildu zuen. Burua altxatu eta apalki begiratu zion Barteli. Ba zekiat gutxitxo dela hori. Laster txahala egingo diat. Orduan...

Bartelek bere behiarekin bakarrik egiten zuen hitz konfiantzaz eta samurtasunez. Gizonengandik ez zuen ezer espero eta nahi ere ez. Baina gizonak etsien dagoela ere, bere buruaz gainera zerbait maite beharra baitu, Bartelek bere behia, bere astoa eta bere txakurra maite zituen.

Esnea egosten ipini zuen. Suari begira geratu zen kokoriko, ukondoak belaunetan. Ez zegoen inora begira, ez zegoen ezer pentsatzen, suaren pentzuan baizik. Sudur inguruan zerbait bustiaren igortzia somatu zuen. Txikik besapetik muturra sartu eta aurpegia mihizkatzen zion.

Txikik ba zekien ugazabaren berri. Berehalaxe igartzen zien, emea izaki, haren tristurei. Ezin zuen jasan Bartel hala ikusterik eta aurpegia, ezein emakumek musutu gabea, mihizkatzen zion, errealitatera itzul erazteko. Bartelek bihotzez maite zuen Txiki. Afaria erdi bana egingo zuten laster. Inoiz gogortxo hartzen bazuen, zurikeria gehiegirik gustatzen ez zitzaiolako.

— Ez al didan utziko suari begiratzen ere? —Aurpegia atzeratu zion—. Gainera, mihizkatzekotan, berotu ezan lehenbizi muturra eta sudur bueltak pixka bat garbitu.

Txikik ez zuen, edo ez zuen nahi, konprenitu, lehen baino leihazago bilatu baitzuen Bartelen aurpegia.

— Tiron! Ez dinat orain losintxetarako gogorik.

Amonak ez zuen porru saldarik nahi. Esnea, esne beroa! —hotsegin zuen ahulki. Hitz hau, gai hau, oharkabez, instintuz eskatu zuen. Esnea era batera bizigarri eta sendagarri, elikatura eta medizina zen amonarentzat. Gaizkien egonik ere, esnerik edukiz gero, segur aurkitzen zen, atentzio guztiekin zegoela uste zuen. Hiltzekotan, beraz, derrigorrez hilko. Esne hutsa ez ezik, esnea beroa edukiz gero berriz, zer gehiago eskatu?

— Ekardak esne beroa! —hotsegin zuen berriro, «ekardazu gure Jauna» esango zukeen debozioz.

— Itxaron egosi arte!

Bartel eta Txiki afaltzen hasi ziren. Zortzi litroko garrafoia mahaipean zegoen. Huraxe zen Bartelen beste lagun mamietariko bat, zeinengana jotzen baitzuen bizitza zaporatzera edo zaporea gutxitzera. Oraintxe ere gero eta larritzenago zihoan. Ez zion jaramonik egin, gauero sentitzen baitzuen, afaltzerakon, —afaria deitzerik bazegoen hari— larritasun hura.

Baina han zegoen garrafoia, mutur luzea tente, edozein okerri erantzuteko prest. Gau hartan, larritasunaz

gainera, mina sentitu zuen. Arrazoi bat gehiago. Zipotza atera eta zurrut on bat egin zion. Txikik berea amaitua zuela adierazten zuen.

— Afaria erdi bana eginik ere, ez al haiz konforme? Ez pentsa gero emea haizelako ni engainatzerik!

Txiki, hamairu urtetan, hamairu umalditan, laurogei eta hamaika umez erditua zen. Hirurogeita hamaika hilik ziren, hamairu bizirik. Duela urte asko, lotsagabekerietan ari zirela eta, auzoko mutilzaharrak makilaka berezi zituen Txiki eta haren maitea. Jon txikiak ikusi eta afaritan etxean kontatu zuen.

— Ama! Ez dakizu zer ikusi dudan. Txiki eta Bixer sasiz katibaturik zeuden eta Timo ezin apartatuz ibili da.

Nagusitutakoan, sasi ezkontza, sasi politika eta horrelakoak entzutean, Txikiz eta Bixerrez gogoratzen zen Jon. Geroztik, ezkutuan moldatzen ikasi zuen Txikik. Azken umaldia bere ume batek ezarri zion, intzestu kezka haundirik gabe. Ba zuen Txikik esperientzia bizitzari buruz.

— Esne beroa! —ziharduen amonak.

Bartelek beste zurrut bat egin zuen. Azkenengo hamar urteetan behin bakarrik gertatu zen hutsik garrafoia eta berean ostikoka erabili zuen, amorruaren amorruz. Halako deskuidorik berriro ez izateko, zumitz armazoia erre egin zion. Garrafoia biluzik geratzean, hura aurkikuntza! Nola ez haiz lehenago konturatu? Guriago, lizunago, tentagarriago, hitz batez, emeago eritzi zion. Amonaren aurrean, besarkatzeko plantak egiten zituen, emakumea balitz bezala. Amonak higuinezko jestuz esaten zuen:

— Zikina! Zentzurik ez lotsarik gabeko kankailutzarra!

Oraingoan, ordea, garrafoiak ez zion guritasun haundirik eman. Edakera mingotsa hartu zion. Hil ala bizi! Lehenengo bi zurrutak nora joan ziren dudarik bazuen, hirrugarrena tuberiak hautsi eta erraietan zehar barreiatu

zitzaiola sentitzen zuen. Sabelari bi eskuez oratu zion. Zer duk hau! Larritasuna, goragalea, hotzikara, zorabioa... Atake hurbilaren sintomak.

— Esne beroa! Jeeesus! —hots egin zuen amonak.

— Nireak egin dik! —hasperen egin zuen Bartelek.

Hamar urtetan laurogeita hamaboskarren atakea zen hura eta denetan esan zuen nireak egin dik. Baina oraindik Bartelena egiteko zegoen. Mareoa inguratuz zuen, lau poloetarik irenstera letorkiokeen denborale astuna bezala. Denborale hartan, oinaztu bat somatu zuen hegoatik iparrera, erraiak zulatuz pasatu zitzaiona. Halako minik ez zuen inoiz sentitu. Mahai kontrara okertu zen, esku batez sabelari euska. Ezin oheraino heldu. Nola eskilarak igon? Beheko gela okupaturik. Madarikatua! Une batez amorrua eman zion amona hiltzen ez utzi izanak.

— Esnea noiz dakark baina? Hau egoera!

Goiko orma erloju haundiak gaueko bederatziak jo zituen. Bartelek inurri multzoa sentitu zuen, erraietan zehar hedatuz. Denak horzka hasi zitzaizkion. Nireak egin dik. Neurri batetik gora, minak berdin konpara daitezke ifernuko suaz, ganibetaren sastadaz edo inurrien sauskadaz. Bartelen mina hauen goitik zegoen. Minaren muga gaindurik zuen. Ez, ordea, lurrera erortzen. Muinetarainoko ezpatada harturiko zezena bezala, sukalde erdian albo-alboka zebilen —gizonaren irudietarik bat hau ere—, ahalak eta bost eginez, zutik irauteko. Azkena izaki azkenengoz erortzea. Aiene bakarrik ere ez zitzaion atera. Baina inurriek, horzka eta horzka, barrua hustu zioten. Hutsune hark zeharo galerazi zizkion instintuak, konortez baino areago instintuz baitzirauen zutik eta lurra jo zuen.

Txiki, ikuskizun triste hura ulertuz, baina ezin erremediatuz, aurpegia mihizkatzen hasi zitzaion, txakurrek bakarrik hartzen dakiten atsekabez. Besterik ezinean, amo-

narengana joan zen, sukaldeko berri ematera.

— Esne beroa, Txiki!

Esne beroa egosia zen eta orduantxe zihoan gainezka, sutondoan eta sukaldean zehar, etxe guztiak errakeruz beterik. Amonak berehalaxe antzeman zuen. Ez zeramatzan alperrik berrogeita hamaika urte Bartelekin.

— Bartel! Bartel! Ene ama birjina! Hau ere oraintxe gertatu behar. Non hago, Bartel? Bai, Txiki, ulertzen dinat. Ken hakit, joan nadin.

Nora joan lehentxoago Bartelek berak hiltzat oheratu zuen gorpuzño hura? Mugitzerako hotzikarak eta batez ere momentuko estuasunak egundoko eztulaldia ekarri zioten berriro. Ai! Ene! Jeeesus! Ai! Bartel!

Txikiren orduko atsekabe gradua neurtu izan balitz, anitz termometro beharko ziren elkarren gainean. Sukaldera itzultzean, han zetzan ugazaba, ziria gerritik sarturiko barea bezala, aho erdi irekitik ardoa, behazuna eta aparra zeriola, lepoko zainen eta nerbioen estutze-laxatzez, burua bere oka eginaren gainean iraulkatuz.

— Bartel! Ene Jainkoa! Gureak egin dik.

Oka egiteko guztiak bota ondoren, hemorragiak eman zion. Odola borbor zerion, baina ez zeukan gogortzeko astirik, erion ahala Txikik irensten baitzuen. Ahotik ahora, bere bizigailurik sakratuena entregatzen zion ugazabak txakurrari. Txikik osoki betetzen zuen ugazabaren gogoa, txakurrari odol guztia ematea nahiago baitzukeen Bartelek, gizonei tanta bat baino.

Jarioa geratzean, edo bukatzean, Txiki horditurik zegoen. Sabeletik gorunzko odol bero bafadak burua harrapaturik, arras amorratu zen. Bartelen inguruan buelta desesperatuak egin zituen, amonari ohera saltatu zion eta azkenez kanpora irtetea pentsatu zuen. Etxe aurrean, euritzan, bota ahala baitzen oraindik, ez zaunkaka, baizik ala-

raoka hasi zen, suak inguraturik bezala. Txikiren alaraoak ilunpean eta hutsean galtzen ziren. Trumoiak bakarrik erantzuten zuen bortizki, noizik behin.

Txikiren oroimen lanbro baina gorian Larraundik pasaturiko arrotz guztiak zebiltzan: agoazilak, taketak, apaizak, medikuak, ijitoak, albaitariak, zergariak... Ezberdin jantzita zetozen guztiei harrera bereziki latza egin ohi zien. Han zegoen orain gauari garrasika, ea zakurrek behar duten gizonez arduratu.

## NON DA GIZON HORI?

### 1

Herriko idazkariaren aurreko orman ba zen koadru bat, zintzilik egotez inoiz aspertzen ez zena: Franco gaztearen burua, zeinek bekoz beko begiratzen baitzuen, altxamendu nazionalean finkaturiko irribarre zihurrez. Aurrez aurre eta idazkariaren atzean, gurutze bat, eskegita egoten ohitua hau ere, baina buru makur, koadrukideari begiratzeko lotsaz edo bildurrez. Zokoan traste piloa bertan behera, diganteak eta burutzar marro burlatiak, norbaitzuren buruak jazteko zain, tamainu guztietariko makilak, luzeak, motzak, meheak, sendoak, biluzik batzuk, bandera kolorgez bilduak beste batzuk. Oihal latzezko sei erroilu lodi zeuden orma kontrara, ospakizun haundietan edo kirol gertaera gorenetan Lezondoko balkoiak idealismoz apaintzeko zabaltzekoak. Ba zen Jesusen Bihotzaren irudia ere, haundia bezain hautseztatua, erhi luzeaz bihotzean min zuela adieraziz. Hurrengo debutean kenduko zizkioten hautsak. Armairu haundia sala luzengaren beste ertzean, liburu eta karpeta ilunez beterik: Udaletxeko artxiboak, zientzia positiboaren iturriak.

Herriko mahai luzearen inguruan, idazkariarengandik aparte samar, beren biltzarra buka berri zuten herriko aingeru jagoleek. Beheko kafetegitik kafe oso bana igon erazi

zuten udaletxearen kontura, langileari bere saria sor baitzaio. Bi taket ere artean ziren, segurantzarako ekarriak, aurreko biltzarrean sorturiko iskanbilarik gerta ez zedin. Lezondoko idazkariak bekosko haserrez jaso zuen burua, hainbeste paper eta karpeta artetik.

— Ez dukala topatu? Berariaz bidali eta ez dukala topatu?

— Ez dut, ba, topatu —erantzun zuen agoazilak—. Zuk hainbat sentitzen dut Larraungo puntaraino alperrik joatea.

Euritako kapotetzarra erantzi, astindu, eskegi eta eseri egin zen. Gerritik behera, eta gora ere, beraturik zetorren, Larraungo gailurretan egundoko eurite haizetsuak hatzeman baitzuen. Kapoteari zerion urak putzua egin zuen behean. Errekatxo mehea poliki poliki zihoan alkatearen aulkipetik, taketen hanka artetik, idazkariaren zapata puntaraino.

— Satorra al da, ba, gizon hori? —Ezin zuen amorrurik estali, ez eta agoazilarenganako arbuiorik ere—. Heldu al haiz gero bertaraino?

Galdera honek ez zion agoazilari batere grazirik egin. Herorrek ez duk, miruki horrek, nik bezalako arratsalderik pasatu. Baina honelakorik pentsatzea ere ez zen gutxi bibote haren aurrean. Nahi zuen, hala ere, gauzak moduz azaldu, hura kapaz baitzen bestela biharamonean berriro Larraunera joan erazteko.

— Heldu naiz, bai, eta ikusi ere ikusi dut.

— Ikusi ere ikusi eta ez dukala topatu? Entzun al duzue?

— Esan dizut, jauna, urrundik ikusi dudala.

Arratsaldeko laurak aldea zen, agoazila Larraunera heldu zenean. Txakurrak, ohi bezala, ez zuen, ez, ondo etorrika hartu. Batez ere bide batez ez, baina bertara zeto-

rrela ikustean, agoazilak lanak zituen Txikirengandik defenditzen. Etxe aurreko sastegiaren erdian gelditu zen. Euria bota ahala ari zuen. Txiki orbitan zebilkion, gero eta erradio laburragoz eta zaunkaketa garratzagoz. Agoazilak etxeari behetik gora eta alderik alde begiratu zion. Etxe galanta noski, pixka bat abandonaturik zirudiela ere, errespetua sartzen zuena.

— Eeeeup! Errekoino!

Errekoino zeritzanik ez zen han inor bizi. Txikik ondo ulertu zuen, eupadako tartetxoa edo deskuidotxoa —deskuido haundia, pentsatuko zuen gero agoazilak— aprobetxatuz, ausikada errukigabea ezarri baitzion ezkerreko hankan, hain gogorra non betiko itsatsi baitzion lau letaginen marka.

— Txakur madarikatua! Oraintxe garbituko haut!

Txiki, berea egindakoan, distantzia zuhurrera jarri zen. Zaunkak hortz arteko marmario bilakatu ziren —agoazilkia gozoa izaki—, bi hortz ilada zuriak erakutsiz. Behin agoazilari begiratzen zion, behin goiko leihora, non ikusten baitzuen Bartelen burua zinuka eta animu emanka. Hori, hori, Txiki! Irakats horri Larraun ez dela herriko parkea.

— Bartel! —hotsegin zuen agoazilak— Ez al da etxe honetan inor bizi? Isi, txakur madarikatua.

Harrikada bat jaurti zion alperrik. Berriro eta berriro, txistu eta deihadar, baina trumoi danbarrada besterik ez zuen entzun.

— Oinaztuak jo aihintza! —zioen berekiko Bartelek— eta bi oinaztuk hi hona bidali hautenak. Zer arraio galdu duk Larraunen? Haizea ere zergapetu al duzue? Esaiok idazkariari Bartel aspalditik dagoela zentsutik borratua.

— Nor da? —galdetu zuen abots agoniko batek beheko gelatik. Agoazila leiho itxira hurreratu zen.

— Herriko agoazila.

— Herriko zer?

— Agoazilaaa!

— Jeeesus! Zer behar ote du agoazilak gurean!

— Bartelen bila nator.

«Judasen bila» esan balu baino garratzago eritzi zion amonak agoazilaren aboskerari.

— Sar zaitez barrura, euritan egon gabe. Laster etorriko da.

Agoazilak tetrikoa eritzi zion amonaren gela ilunari. Perretxikoak landatzeko sotoa. Kandela piztean, aurreko mendeko izpirituen gerizak iruditzen zitzaizkion dilindan, luzatuz mehetuz. Ohean zetzan atso zimur hari berriz oraintsu bergizaturiko arima katarrotsuaren antza hartu zion, eztulka eten gabe. Sorgin zulora sartu al nauk? Sineskeritsu samarra zen, baina ergelkeria hauetaz lotsaturik, bere agoaziltasunaz oroitu zen eta, batez ere, Txikiren haginkada gero eta mingarriagoaz.

— Txertaturik al daukazue txakur zital hori?

— Zer daukagun?

— Ea txakur hori txertaturik daukazuen!

— Jakina! Beno, ni ez naiz horrelako gauzez arduratzen, baina gure Bartelek...

Eztulari eman zion, ez baitzekien nola bukatu. Zekiena zen Bartelek ez zuela aspaldian txakurrik txertatzera eraman. Txakurra eramaten baduk, katua eskatzen diate —esaten zuen Bartelek—. Eta dena hogerleko batzuk kentzeko.

— Dagoela nahiz ez dagoela, haginkada ederra egin dit madarikatuak.

— Haginka egin dizula?

— Bai eta lau hagin zulo utzi ere.

— Ene Ama Birjina! Ez ahal da gauza haundirik

izango!

Amonak bildur instintiboa zien agintez jantzitakoei. Berdintsu zen harentzat legea eta haurrentzat mamua. Txikik legeari egin zion bernatik haginka. Ikusi egin behar mamuak nola erantzuten zuen.

— Ez zen haundirik ez txikirik izango, txakurra loturik edo bozaturik bazenute, legeak agintzen duen bezala. Zorioneko legea berriro ere!

— Ba dakizu, ba. Etxe hau hain dago aparte! Gainera gure Txikik ez dio jende normalari haginka egiten.

— Ni ez al naukazu, ba, normaltzat?

— Bai, jakina, esan nahi dut, gure antzeko jendea. — Gutarrak edo.—

— Nortarra naiz ba orduan ni?

Amona gaixoa gero eta nahasiago zihoan. Eztulari eman zion, konpromisotik irteteko. Agoazilak erlojuari begiratu zion. Zer Kristo egiten diat nik hemen, hil biziekin ala bizi hilekin nagoen ez dakidala? Gainera ea atso hari agonian sartzea bururatzen zitzaion. Besterik ez diat behar, eguna biribiltzeko.

— Ezin dut luzaroago itxaron.

Baina hara gero ataritik Larraungo hirukotea errepartu zuela, pinadi ertzean: Bartel, behia eta txakurra. Bartel apropos zegoen bistan, desplante nabarmenagoa egitearren.

— Bartel! —hotsegin zuen agoazilak.

Txiki tximistaren puntan abiatu zen, bere hirurogeita hamazortzi ume defuntuen eralea huraxe balitz bezalako amorruz.

— Bartel!

Hark mendiz handiko trumoi hotsa entzun balu bezain ezaxolki begiratu zion. Zer gozamena agoazilaren amorrua iruditzea!

— Ez al didak entzuten?

Bartelek bere baitarako bakarrik erantzuten zuen. Izorra hadi. Gaur ez duk esango ez naukala topatu. Hi eta gorakoak hauxe —lurrera ttu eginez—eta hauxe! —hanka biekin ttu multzoa zapalduz.

— Hago pixka batean, mandatu pertsonal bat ematera bainatorkik.

Bartelek bere ezaxoltasunean segitzen zuen. Zera eman behar duzue zuek, lapurretarako lezioa edo izan ezik.

Ehunen bat metrotara hurbildu zitzaionean, Bartelek jesturik arbuiozkoenez pinadian zehar aldegin zuen. Goazen, Txuri! Hiregatiko zorren kontuarekin zetorren hori.

— Ez hadi horrelakoa izan, Bartel! Ba al dakik nondik noraino etorri naizen?

— Ba zekiat, bai —boz goraz hasi zen Bartel—. Parkeko nonzeberriak biltzen eta haurrek zuhaitzei piz egitea debekatzen eguna sartzen duenari ez duk harritzekoa Larraun ez gustatzea.

— Herori ikustera natorkik, ordea.

— Aski duk batak ez nahi izatea, elkar ezin ikusi izateko.

— Ikusterik nahi ez baduk, erantzuidak hagoen lekutik.

— Erantzun bezaik Amantoni Toberakok edo hor goian trumoika ari den Galtza Zaharrek.

Hementxe erre zitzaion agoazilari pazientziaren azken kartutxoa. Inork ez zion sekula hain lotsagabeki barre egin. Nork eta gizonska basakume hark, nori eta autoritate bati, zeren, haren ustez, alkateak eta gobernadoreak bezain beharrezkoak baitziren agoazilak.

— Zerri madarikatu hori! Ez uste hori horrela bukatuko denik.

— Ez horixe, bestetara baizik. Zuek oinaztuak jota eta ni ehortzaile.

— Harrapatuko haugu, mutilzahar ziztor hori!
— Zeuek zarete aski nire ordeak izorratzeko.
— Zorra besterik ez dukan ijito zorrizto hori!
— Noiztik duk zorra lapurrei ez ematea?
— Damutuko haiz apokeria horretaz.
— Jaiotzeaz agian damutuko nauk, baina eta honetaz.
— Mandalarru zitala!
— Zitalenean ere, nik neure larrua diat eta ez nauk inor larrutzera dedikatzen.

Nolako atsegin zirradak sentitzen zituen Bartelek haragi guztian zehar. Aukera aparta gertatu zitzaion, aspaldi zerabilen mendeku lehia azazkatzeko. Eta nolako biktima! Armada osoa deskalabraturik bezalako satisfazioa zeukan, zeren agoazila gutxiena baitzen. Hura ez zen bidali bat baizik. Harengan beste anitz ikusten zuen. Alkatea, kobrantzak eta denuntziak sinatzen baizik ez zekiena —ah! eta pisu berriak erosten—; idazkaria, trenak larru gorritan ekarria eta urte batzutan aberastua; albaitaria, behin deitu eta berean behirik onena galdu ziona; beste zazpi agoazilak, soineko kakia baino alperragoak; taketak, hiruna kilotako zazpatatzarrak oinetan eta metroko fusila bizkarrean, soroak zapaltzera, haurrak ikaratzera eta txoriak uxatzera etortzen zirenak; medikua, Larraunen udaberrira arte inor ez gaixotzeko agindu zuena; apaiza, Larraungo bizien ez, baina hilen kontua zeramana; epailea, anaiarekiko gorabehera batean «bakeak egiten laguntzearren» hamalauna mila pezeta kobratu ziena...Eta abar eta abar. Hauek berak ezagutuak eta segur asko ohoretsuenak edo gutxien lotsagabeak. Zer ote zegoen goruntz, Bilbon, Donostian, Donibanen, Baionan...? Aralartik Anbotorainoko armada iruditzen zitzaion, zeini zazpi adarrez jo baitzion adarra eta gainera Txikiren haginkada. Mendekatuko zirela? Zer kentzeko? Dirua? Nondik? Be-

hia? Barka, Txuri, baina hi entregatu aurretik, neronek ehortziko haut. Bizia? Mesede egingo zidatek. Ez. Ez zegoen zer kendurik. Bat batean bera ere harriturik uzteraino ko jenialitatea bururatu zitzaion: Denak ni bezalakoak izanik, hoienak egin dik. Ordaintzaileak ez badu zerez, kobratzaileak ezer ez. Viva la miseria!! —hotsegin zuen, eskolako «Vila la República»z oroiturik.

Agoazila aspertu zen oihuka. Talentuak eman ahaleko madarizio guztiak agortu zituen. Txakurrari makilada bat ematerik lortu balu ere! Bueltan amonaren leiho itxia ukabilkatu zuen.

— Esaion hire seme alu horri, bihar goizean udaletxera aurkez ez badadi, arratsaldean goardia zibilek tatarrez eramango dutela.

## 2

— Gezurra baderitzazue, galde berna honi —bukatu zuen agoazilak. Galtzak jasorik, zapi odoleztatuz baturiko zangoa erakutsi zuen.

— Bapo gaudek arratsalde guztian haginkada bat besterik ekartzeko gauza ez den agoazilarekin.

— Nolako haginak zitian, ba, txakur horrek? —esan zuen alkateak.

— Ez dit eman neurtzeko astirik.

— Ezin dugu jasan basakume bat gutaz burla dadin!

— Zenbat zor duen ez dakit, baina bai nolako jenioak dituen —esan zuen haragotik taket batek. Duela bi urte, Larraundik pasatzean, sinadura eskatu genion eta ba al dakizue zer erantzun zigun? Ez zekiela. Baina neronek ikusi diat hire sinadura koartelean! —esan nion eta orduan berak: Jakin ba nekien baina ahaztu egin zait. Praktikarik

eza, jauna. Ez zen horretan bukatu. Bueltan bi langadun atekatik pasatzean, gorengoak amore eman zuen eta nintzen guztia erori nintzen, fusila alanbraduran eskegirik. Hura belaunekoa!

Agoazila baino gutxiago ez izatearren, galtzak jaso zituen. Han ageri zen, hatz batek seinalaturik, —denek hara luzatu zuten burua, animaliek aurrean zulo bat aurkitzean bezala— orbain luzenga bat, bizartxoren batek edo bestek oraindik zirauen zuritasunean.

— Lepoa jokatuko nuke —jarraitu zuen taketak— Bartelen azpikeria izan zela.

Bartelek ez zituen barre makalak egin,bere zelata tokitik fardotzar berde hura hankaz gora ikustean.

— Eman ditukanetarako, ez duk haundiegia hartu — pentsatu zuen.

Idazkariak liburu haundi bateko orriak pasatu zituen. Errezibo sortak pilatu eta zenbakiak idazten hasi zen, itxaroteko eskaturik.

— Lehenera jota, —ziotsan taket zaharragoak lagun gazteari— ez dezakek esku bata fusilean eta bestea bihotzean erabil. Honi bi eskuekin oratu behar zaiok. Todo por la patria! Behinola norbaitek esan zian etsaiak maite ez dituena... zera eta bera. Baina orduan ez ziegoan fusilik. Honek, gorrotoz nahiz maitasunez tiratu, eragin bera dik, jotzen badu behintzat.

— Ez dakit, ez dakit. Nik bakarrik dakit urduri nabilela. Zer gertatuko zen ihesleа detenitu beharra gertatu

balitzaigu?

— Bai zera! Terroristak ez dituk gure eskuetara etortzeko bezain tentelak.

— Baina lantzean bat ederki garbitzen digute eta binaka edo gehiago ere bai batzutan.

— Guztira ere zenbat? Istripuak. Zer duk hainbeste milatatik bat edo batzuk garbitzea? Minbiziak gehiago hiltzen dik eta, hala ere, lasai erretzen duk. Pentsa gainera zer aspergarri litzatekeen koartel atarian eguzkiari goardia egiten eguna sartu beharra. Komeni duk jendeari koarteletik buelta batzuk eragiteko hainbat nahaste egotea. Ez al haiz ohartu saltsan dabiltzanak herriko neskarik politenak izaten direla? Harrapatzen duk ale bakoitzik!

— Besterik ia ez dugu ikusten eta! Lanbide hau gero eta gutxiago gustatzen zait. Ogi apur bat irabazteko, hainbeste istilu.

— Beterani kontua. Laster egingo haiz. Ez zegok fusila bezalako pedagogorik. Galtzak eta galtzapekoak erantziko dituk, baina ordenuzain onak maitasuna ere fusila bizkarrean duela egin behar dik.

Zinegotzien artean berriketa bitxia zebilen.

— Gaurko biltzarrean ez diat tutik ulertu.

— Atzokoan ere ez nik.

— Alaskako geografia entzun banu bezala.

— Baiezkoa eman diagu eta nahikoa duk.

— Ezezkoa eman bagenu ere, «udalbatzar osoaren ahobatasunez» geratuko zituan aktak.

— Kontu nahasiegiak dituk horiek, guk ulertzeko.

— Gure egitekoa ez duk ulertzea, gizona, entzutea eta konformitatea ematea baizik.

— Eta, ahal denean, zeozer harrapatzea.

— Hau geure arterako, baina gure alkate-idazkariak pasatzen diren tokian, ez diat uste harrapatzeko askorik geratuko denik. Ja, ja, ja,!

Alkatea lasai zegoen, bere aulkian atzeruntz etzanik. Bere buruaz konforme ematen zuen. Ez zen alperrik herriko agintari nagusia. Alkatea duk... esango nikek... Beno, horixe, alkatea alkatea duk beti. Kezka bakarra oraingo idazkaria bera baino argiagoa —edo lapurragoa— zela. Aurrekoarekin bapo aprobetxatu zuen. Ba zeukan berriz asmo bakoitzik! Alkateordea sorbaldan jo zuen:

— Aizak. Zezen plazaren inaugurapena gertaera nazionala izango duk. Lezondok merezi dik horrenbeste.

Barrutik zer jende etorriko zen gozatzen ari zen. Aldundi osoa, bi gobernadoreak, militarra eta zibila (zibila ere militarra ez al duk, ba?), Obra Publikuetako (ala pribatuetako?) Ministroa... Gutxienez hauek eta hauen emazteak eta, nola ez, Printzeak. Zertan denbora bete behar diate bestela? Gehien kilikatzen zuena, ordea, zezenplazaren presupostuko hainbeste miloitatik lima zitzakeen miloitxoak.

— Ea herriak boikota egiten digun —bota zuen alkateordeak, alkateak hitz hari nolako seta zion jakinik.

— Boikota? Zer Kristo nahi diate, ba? Besterik ezean,

emakume biluzien txapelketa jarriko diagu. Ja, ja, ja! Bi agerraldi eman beharko, lehenengoa fraile hutsez beteko baita. Jo, jo, jo!

Idazkariak isiltasuna eskatu zuen. Zenbaki zerrendak egin ondoren, ozenki iragarri zuen:

— Jaunak! Kontuak oker atera ez baditut, Bartel Larraunen urteotako zor likidoak berrogei mila eta hogeita zazpi ematen du. Baina Prozedura Administratiboko 759 garren artikuluko 1. zenbakiak dionez, «lege honetan... Hazienda lokalak kobratzeko dituen kuoten dobleraino-ko multaz zigortua izango defraudapena» eta artikulu bereko 3 garrenak eta 4 garrenek diotenez, «berrerortzea kopuru defraudatuen dobleko multaz zigortua izango da beti», eta 762 garren artikuluak dakarren aringarririk ezartzerik ez dagoenez gero, laurogei mila eta berrogei eta hamalau pezeta da Bartelen zor osoa.

— Ez dakit nondik kobratu behar diozun hori —esan zuen zinegotzi batek.

— Nondik edo handik! Haziendara ez dago aitzakirik bidaltzerik, dirua baizik. Gizon horren lotsagabekeria markatik gorakoa da ia. Gutaz eta legeaz burlatzen ari da.

— Besterik ezean, auzitegira eramatea ere hor dago.

— Bihur bekizkit hesteak suge, mutilzahar bat auzitegira gabe makur erazteko gauza ez bagara.

## ETIKATIK LARRAUNERA

Apaizgaitegi izugarria, berrehun metro zabal eta berrogei gorako bloketzar inertea. Urrundik begiraturik, leiho batailoia zirudien. Bostehun leihoetarik bat Jonen gelakoa zen. Arratsaldeko laurak. Ordu astuna ikasteko. Hala ere, Etikako apunte fardoa zabalik zeukan, biharamonean azterketak baitziren. Irakaslea erretorea bera zen gainera. Seigarren tesisa hasterakoan, atea jo eta eskutitz bat eman zioten. Ez zeukan irekitzen lanik, zabalik baitzetorren zentsuratik.

— «Gure semea maitea: Lehenengo eta bigarren hiruilak ordaintzeko dirua eskatzen huen, baina orain ez zeukagu. Ez hadi ikaratu, ihazkorik gerta dadin. Aurten ez haute azterketa gabe utziko. Besterik ezean, txahala salduko diagu. Oraindik txikia duk, baina maiatzerako diru ederra balio izango dik.

Etxetik betiko antzera. Negute gogorra diagu eta ganaduarekin larri ibiliko gaituk. Txerrikume berria erosi diagu. Polita zirudik, baina bai tematia ere. Joan den astean oilorik onena eraman zidak azeriak. Txakurra goizero igoten duk hire ohera. Egunero alperreko desilusio galanta hartzen dik gaizoak. Amona eta osaba Bartel gero eta okerrago. Atzo gauez, bihozkada batek emanik, hara joan nintzenean, hura koadrua aurkitu nuena. Amona

itotzen eta osaba Bartel odolusten. Ba dakik osabak sarritan izaten dituela horrelako aldiak. Baina urkatzea nahiago dik inork laguntzea baino. Konorteratu zenean eta ni erreparatu, biraoka hasi zitzaidaan, han ez nuela faltarik egiten eta. Amona azkenetan zegok. Izkribaua etortzeko deitu diat. Penagarri lukek geratzen zaion apurra inork eramatea. Ez duk amonarik gehiago ikusiko. Osaba Bartel ere usterik gutxienean... Musu haundi bat hire amak».

Papera tolestu eta azalean sartu bitartean, dilindan geratu zen bi mundu hain desberdin eta urrunen, amaren eskutitzaren eta Etikako apunteen, artean. Inertziak eramanik eta Larraungo berriekin guztiz sintonizatu gabe oraindik, horri bat irakurtzen hasi zen, erdi makinalki.

«Gizona supramateriala denez gero, Balioen atzetik dabil beti. Balio guztien artean, Egia, Ona eta Ederra dira nagusi. Sistima fisolofiko guztiak saiatu dira giza irrits trazendenteen azterketan. Nork Egia jarriko du goren Baliotzat, nork Ona, nork Ederra. Baina Etika guztiak hiru Balio hauexen inguruan dabiltzala esan genezake. Halaber esan genezake gizonaren benetako duintasuna eta balioa ere hiru Balio hauexen moldakera armonitsuan datzala. Dakusagun zer dioten filosofoek . Platonek... Aristotelesek... Santo Tomasek... Kantek... Bergsonek... Heideggerrek...»

— Eta zer axola zidak niri ero aldra horrek dioenik? —hotsegin zuen Jonek.

Polo desberdindun bi munduen arteko txinpartak saltatu zuen. Barruko sentipenetatik amorruzko irabioa igon zitzaion, lehen unean eskutitzaren zentsuran bildu zena.

— Zer eskubide diate memelo horiek, nire pentsioa txahal baten mende dagoela jakiteko? Zer axola ziek horiei azeriak oilorik ederrena eraman dioala gure amari edo txerrikumea erostea dela gurean urteko berririk haundiena?

Zer...?

Amorrua berretuz zihoan, batez ere oroitzen zelako zer lotsa apalgarria sentitzen zuen mutikotan, amaren eskutitza hartzean. Ilada okerrak, letra zabarrak, sinadura moduko bat... Eta nolako kontuak! Ahalik ezkutuenean gordetzen zuen eskutitza, armairuko arropa artean edo burukoaren barruan. Oherakoan, inork ez zuela ikusten segurtatzean, berrogei mutiko baitzeuden lotegi berean, behin eta berriro irakurtzen zuen, etxeminak ateratako negar isil ugariz gehienean. Inoiz komunean sarturik ere bai, bakarrago eta segurrago egotearren. Minik gehien ematen ziona, defentsa gabeko mina, gauza haiek inork irakurtzea zen. Harentzat zentsuratik pasatzea eta mundu guztiak jakitea bat ziren.

Txikitan, amak altzoan irakatsi zion irakurtzen. Eskolara hasi eta gero ere, ama zuen andereño nagusia. Baina egun batez, kebratuetara heltzean, halakorik ez zekiela esan zion amak. Hura mutikoaren atsekabea! Gehiago bat ere ez ikastea pentsatu zuen, ama atzean ez uztearren. Gero hoberik bururatu zitzaion:

Ama! Kebratuak ikasitakoan, neuk irakatsiko dizkizut.

— Orain berandu duk, semetxo. Niri lana eta lana tokatu zaidak.

— Eta zergatik ez zenuen ikasi?

— Ez zidatelako irakatsi.

— Eta zergatik ez zizuten irakatsi?

— Ezin nuelako eskolara joan.

— Eta zergatik ezin zenuen eskolara joan?

— Lan egin behar nuelako.

— Eta zergatik egin behar zenuen lan?

— Pobreak ginelako.

— Eta zergatik ginen pobreak?

— Aberatsek asko behar dutelako.

Mutikoak amaren altzotik saltatu eta ikuilura aldegin zuen. Txahal txikiari bi eskuekin lepotik oraturik, negar eta negar egin zuen. Geroztik, ezjakintasuna eta pobretasuna betiko kideturik gelditu zitzaizkion gogoan.

— «Egia, Ona eta Ederra dira giza Baliorik...».

— Kaka zaharra! Egia bakarra duk hemen txahal Ona hazi ezik, Ederra egingo didatela aurten ere. Apunte karpeta brast itxi zuen, ilada bakoitza zizare nazkagarri bihurtu balitz bezala.

«Amona azkenetan zegok. Ez duk gehiago ikusiko».

— Norbait hil al zaik?

— Bai.

— Nor, galdera txarra ez bada?

— Amona.

— Ah!

Baina Jonek ah! lasaigarri bati dagokiona baino maiteago zuen amona.

— Amona hil omen zaik.

— Hala duk, bai.

— Ene doluminak, lehenago hil ez zaikalako.

Baina Jonen haurtzarorik erdi amona izan zen eta nola haurtzaroa bizitzarik erdi baitzuen, amona bere laurdena zuen gutxienez. Hilek bizien oroimenean omen diraute. Zergatik ez esan biziak hilengan pixkanaka hilez doazela? Jonek hala sentitzen zuen une hartan, amonarekin bere laurdena hil zela, alegia. Nork debeka lezake norbere buruaren heriotzara joaterik? Baina batez ere amonak bere iloba kutuna ikusteaz hartuko zuen poza zegoen, halakoa non segur baitzegoen hura pozik hilko zela. Nork uka lezake, hiltzean bederen, begiramendu bat, bizitzan lana eta sufrimendua besterik ezagutu ez zuen emakumeari? Erabakita. Bizirik bazen, ikusiko zuen, uzten ziotela nahiz ez ziotela.

Erretorea berrogeiren bat urtetako gizona zen. Lau urtetan Alemanian ikasten egona zen, jakintsu karneta ateratzera joana. Laster bukatzeko omen zeukan tesis doktorala ekarri zuen. Baina erretoretzak astirik ematen ez. Gainera Etikako klaseak «kontzientziz prestatzea» aski zen gizon batentzat, «konpetentziz» ematekotan behintzat. Shopenhauer, Snakenburg, Von Braun, Goldenberg... Rudof Shongberman-i berak entzun omen zion: «Heriotza da bizitzako errealitate absolutu bakarra, zeinetan balio etikorik funtsezkoenen kontingentetatsuna abolitzen baita, gizona egiazko trazendentzia kosmikoak irensten duelarik, zeren...». Heriotzak hainbeste misterio eta inplikazio bikain zeukan kontradikzio fenomenologikoen artean, non ematen baitzuen Alemanian jendeak hiltzeko txanda eskatzen ari behar zuela eta zerraldoek ere oihan kosmikoko zuhaitz trazendenteen zur inmanentez eginak izan behar zutela. Euskaldunen buru kamutsak, ezjakintasun nabarmenez eta arrunkeria baldarrez, heriotzako misterio agorkaitza hiru hitzez lorrindu du: «Horrenak egin dik». Dudarik ere ez heriotzaren ulermen orokorrez jabetzekotan, Alemaniara buelta bat egin beharra zegoela, zeren zer aurki zitekeen, mendez mende, milaka pentsalari beste gabe hartara emanek, heriotzari buruz hainbeste kostaturiko pentsakera hain gurenak «horrenak egin dik» esanda likidatzen dituen herrian?

Erretoreak, ulertu ez ezik, mastekatu egiten zuen misterioa. Shopenhauer-ek ez zuen gutxi irabazten haren ahoan, bokalak ez baitziren ale banakoak, ore gutural ia bentrilokuoa baizik, matrailen mugiera maiestatetsuz moldaturik. Okerrena Alemanian lau kiloko haurrei ere Shopenhauer, Snakcenburg eta abar deritzatela eta badirela jakinduria bost axola zaienak ere, nahiz eta Beckenbauer, Nindelberger eta horrelako izenak eduki. Baina erretorearen espezialitatea gorputz-izpirituak armonioski elkartzean zegoen, ez noski banitatez, hilemorfismoaren ulermen sakonez baizik. Mens sana in corpore sano.

Jakintsuaren gorpuzkerak izpirituaren bikaintasun ikuskaitza distiratu behar du. Haren apain-mahaian ez zen ezer falta. Apaizgaiek, jakina, —oraindik gazte hezigabeak izaki—, xaboi eta lustre kutxa bana aski zuten. Berak, ordea, bazuen eskubiderik eta eskabiderik ere, gorputza lantzeko, izpirituaren onerako. Goizeroko jimnasiak —egiten zuela esaten zuena behintzat— Greziako tradiziorik jatorrenarekin batzen zuen misterioski, diskobolodun gaztearen eta Hermesen linea beretzen saiatuz. Lastima Polikletok ez zituela bere eskulturak mugimenduan egin, hauxe ere imitatu ahal izateko. Emakumeak egon zitezkeen eskertsu, hain dezaxola bikainez halako alea pasatzen dohan ikus zezaketelako.

Jonek ez zuen gizon harengandik ezer lortzerik espero, baina badaezpada joan egin zitzaion.

— Jauna, amona hiltamuan dela diost amak eta etxera joan nahi dut.

Erretoreak abere hausnargaitz baten mugimendua egin zuen bere aulkian.

— Jakitun negok. Sentitzen diat. Hala ere pentsa dezagun...

Erretoreak ondo pentsaturik zeukan, baina hezitzai-

leari dagokionez, edozein gertaerari atera behar zitzaion bere hezigarritasun guztia. Ezezko ondo emana baiezkoa bezain ongarri izan zitekek. Bereziki ikasia zeukan Sokratesen elkarrizketa dialektikoa, zeinen bidez ikasleari berari esan erazten baitzaio irakasleak nahi duena. Tesis doktorala ere «Sokratismoa Pedagogiaren oinarri» edo zerbaitsu zen. Pentsa dezagun...

— Ez dago zer pentsaturik horretan. Bai ala ez eta kito.

— Hik ba dakik, ordea, Etikako klaseetan maiz ekin dizuedanez (bere taktika pedagogikoek huts emango ote zioten, ba, orain?) bizitza bai ala ez eta kito baino nahasiagoa dela. Edozein errealitatek zeukak zerbait baiezkorik eta zerbait ezezkorik, eta kontrako bi faktore hoiexen, besterik ez aipatzearren, osakuntzan zegok...

— Aizu, jauna! —segur asko esaldi biribilen bat abortatu zion Jonek—. Ez dakit zertara datorren bizitzaren nahasitasuna, heriotzaz ari baikara.

— Jakin behar huke erretoreak ez duela horrelako baimenik emateko eskubiderik.

— Bai, ordea, jendea etxera bidaltzeko. Zer autoritate modu daukazu, ba, zuk?

— Autoritatea ez duk eralkitzeko, erabiltzeko baizik, eta erabiltzen jakitea obeditzea baino zailagoa duk.Mendekook ez dezakezue konpreni, baina pentsa ezak gu ere mendekoak izanak garela.

— Beraz, ez didazula baimenik ematen.

— Ez duk ez ematea, ezin ematea baizik.

— Zergatik ez?

— Prezedentea jartzea litzatekeelako. (Alemaniako pedagogirik modernoenak ikasiak zituenak azkenean prezedenteen arrunkerira jo behar). Konpreni ezak hitaz gainera beste hirurehun mutil daudela etxe honetan.

— Ah! Konprenitzen dut. Gaurtik aurrera agian bat

gutxiago izango duzu. Ez dakit hirurehun eta bat mutilok nola jaio ginen, ez baikenuen prezendenterik, eta zu astagorotzen erretore zinateke gaur astoek horretarako prezedenterik ez dutela behar emanik, galea sentitzea baizik. Ostutako hamarrenekin emaitz pioak egiten dituzten andre guren hoietarikoa izan balitz gure amona, nahiz eta gizonekiko saturamendua ordezteko hiru txakur siames gonapean erabili, zihur nago prezedente guztiak prozedenteak liratekeela.

Brast zutitu eta ateruntz abiatu zen. Erretoreak, bere buruaren ez, baina autoritate printzipioaren axola hutsez, (norbere buruaz axolatzeko modurik finena), ordua heldua zela pentsatu zuen beste guztia gainean eraikitzen den printzipio bakarra desestaltzeko.

— Aizak, morrosko! Apaizgaitegian, hi eta ni jaio aurretik, Arautegi bat zegok, guk baino jende prestuagoak egina, zeinetara menerrezki makurtzea baita hezibide jator bakarra, eta orain arte jakiteko bahengoen...

— Jakinik geratzen zara horren Arautegi bikain hori bapo etorriko zaidala hurrengo beheruzkoa datorkidanean, eta nola Larraunen ez baita esplotazioaz beste prezedenterik ezagutzen, ez dut zure baimenik behar, amona hiltzen ikustera joateko. —Atea ireki eta bortxaz aldendu zen bulegotik—. Ah! Eta pentsa ezazue arautegiari beste artikulu bat ezartzea: «Apaizgaitegian berdin ezetsiak dirateke hala amagabeak, nola amonadunak».

## HARRAPARIAK ETXEAN

Amaren hiltamuak bost seme-alabak bildu zituen Larraun Zaharrera. Denbora zen azkenengoz bateratu zirela, Jonen ama eta etxeko Bartel ez beste hirurak urrun sakabanaturik bizi baitziren. Amaren heriotza baino gutxiago samingarri ez zen behinolako etxaguntza haundiaren, leinu famatuaren, erremediorik gabeko hondamena berrikusi beharra. Zenaz eta ez zenaz mintzatu ziren: familia, bizimodua, lana, osasuna, amaren azkenaldia, hiletak... eta batez ere Bartel. Zer egin behar zuen ama ez zenean, bera bakarrik etxe desolatu hartan?

Bartelek ezin zuen aspalditik jasan inor gupida zekion. Baldin inoiz, zirkuntantzia hauetan bezala, bereganako ardurarik onartzen bazuen, bere arbuioa nabarmenagotzeko zen. Anai-arrebak, Jonen ama aurrenen zela, asperturik zeuden harekin burutzerik ez zegoela esaten. Baina aukera azaltzean, ezin ekin gabe utzi. Gainera, nork gehiago, nork gutxiago, denek espero zuten amaren heriotza inguruan hatzemangarriago aurkitzea, zertan arras hutsegin baitzuten.

— Larraunen haundienak gertatzeko zeudek oraindik —esan zuen Bartelek.

— Etxeari sua eman behar al diok?

— Hortik gora. Bestela ez lituzkek haundienak.

Hauxe zen Bartelen arma hautatua, mehatxu zehazgabeak airera jaurti, nornahi bere mendeku antizipatuaren orbitan sar eraziz. Okerrena berriz ez zekitela olgetan ala benetan ari zen.

— Gainera zertara etorri zarete zuek? Amaren heriotza laguntzera ala nire bizimodua konpontzera?

Etxe aurrean txakur zaunka biziak entzun ziren. Hiru gizon zetozen. Hiru gizon Larraunera? Izkribaua zen bat. Espero zuten, edo hobeki, esperantza galdurik zeuden, bi egun baitziren abisatu ziotela. Baina idazkaria?

— Zer behar ote du izain horrek Larraunen? —pentsatzen zuten.

Hirugarrena agoazila zen. Txikik ondo ezagutu zituen. Haren zaunkakera gorrotoaren berri dakienarena zen. Bartelek, haiek ikusiz batera, alde egin zuen atzeko atetik, izurriari ihesi bezala. Hiru ahizpak eta Todor beren susmo gaitzetan geratu ziren. Zer asmo ote zekarkeen idazkariak? Segur ez zetorrela alpinismoz, eta gutxiago otsailean.

— Hegazti harrapalariak ez dik ezer ez den tokira jotzen —pentsatzen zuten. Zer geratzen zen, ordea, harrapatzekorik Larraunen?

Bi letragizonak beren hautu-mautuetan zetozen. Idazkaria behin duindu zen agoazila haintzat hartzera:

— Txakur ziztrin horrek egin al zian haginka?

— Berberorrexek! —erantzun zuen lehorki agoazilak.

—Ailegik hiri ere, alu horri! —desiratu zuen berekiko.

Desira hartaz gainera, zin egin zuen, arriskurik gertatzekotan, bere burua defenditzen hainbat saiatuko zela idazkaria abandonatzen.

Izkribaua eta idazkaria beren hautuetara itzuli ziren.

— Bertora etorri ezik, sinesteak ere lanak zeuzkak gero jendeak honelako alderdietan bizi behar duela oraindik.

— Etxe hau hemen egin zutenek ez ziaten askorik pentsatu nolako okerra egingo ziguten.

Atarian arratsalde onak eman eta ohiko arrunkeriak esan ondoren, —nola zegoen ama, hil arte beti dagoela esperantza, Bartel non zen, eta basotik zelako (hauei gezurra esatea libre duk) asko sentitzen zuela, (ez, ordea, agoazilak, hura ere izorra zedin)—, sarrera hunkigarria egin zuen idazkariak:

— Benetan sentitzen dut. Heriotza zerik arruntena dugu, baina ama bakarra. Gaztetan galdu nuen. Testamentuko formalitateek heriotza profanatu egiten dutela ematen dit barruak. Hau ere egin beharra dago, ordea.

Hain aboskera minberaz, ia agonikoz, mintzo zen gizona, non Todorrek eta hiru ahizpek ez baitzekiten doluminak eman ala barkamena eskatu. Harrigarria zena idazkaria mintzatzea izkribauari zegokionez. Arazo txarra.

— Benetan gogor egiten zait esan behar dizuedana esan beharra, zuek ez baituzue errurik. Bartelek aspaldion zor haundiak bildu ditu zergatan. Ez da denbora askorik Haziendako ordezkariak egundoko filipika jaurti zidala. Agi denez, Bartelek ez dauka zertatik. Bizimodua ez dago, egon ere, harrokerietarako. Baina legea lege da. Auzia eskualdeko Auzitegira pasatu baino lehen, non epaiketa egingo bailitzaioke eta, bahigairik eduki ezik, preso sartuko, zuekin hitz egin nahi nuen pentsaturik agian amaren testamentuaz egoera hori salba dezakezuela, dena Berteli utz erazirik. Bestela, bera ez ezik, familia osoa erabiliko zaituzte auzitegiz auzitegi, lekukotzat edo Jainkoak jakin zertzat.

Todor eta hiru ahizpak sukaldean batzartu ziren. Todor gaztea zela, hirurogei anega gari hartu zuten. Hogei zergatarako entregtu behar. Urte estua, gainerako guztiak bezala. Todorri irtenbide bat bururatu zitzaion: erdia en-

tregatu eta kito. Amona ez zegoen ados.

— Kontuz horiekin! Ezer soma balezate, gureak egin dik.

— Geuk dakagu errua —ekiten zion Todorrek—, eskatutako guztia mantso-mantso daramagulako.

Amonak amore eman zuen, bildurra baino beharra haundiagoa baitzen. Astebetegarrenean, goardia zibilek goitik beheraino arakatu zuten Larraun Zahar. Eskarmentutzat, gari guztiak eraman zizkieten, hazitarako hiru anega utzirik, haiekin hurrengo urtean hartutako guztia ere entregatu beharko zutelarik. Todorrek, kaxa haunditik hondarrak jasotzean, goardia zibil bikotea lekuko zela, azken eskukadak saguei hedatu zizkien ganbaran zehar, esanez:

— Jan ezazue gogoz, zuek ez baituzue errurik.

Herrira heltzean, anitz herkide aurkitu zuen zorte berean. Neurri orokorra izan bide zen, lezondotarrik gehienak erori baitziren. Todorrek bere zoritxarreko iniziatiba denen okerrean urtu zuen, ez baitago gaitzik zerbait kontsolagarririk ez duenik.

— Tira! Ez gaituzte gu bakarrik harrapatu.

— Hainbat okerrago! —erremuskada egin zuen amonak—. Horrek esan nahi dik jatun haundiak edo asko direla.

Orduko idazkaria atarian zegoenaren aita zen.

Esterrek hogei urte eta Urnek hemeretzi zeuzkaten. Udazkenez, arratsaldero bezala, menditik ziren biak, ehun ardi eta zazpi behi bazka erazten. Apenas inor ikusten zuten, kasualitatez izan ezik. Ez, ordea, aspertzen jostari haundiak baitziren. Hartan, gizaseme bikote bat handik pasatzea gertatu zen. Bi ahizpengana hurbildu ziren, hauen harridura ikaratiz.

— Honen bildurgarriak al gaitun gu? —hotsegin zuen batak.

— Hauen bildur bazarete, alboan utziko ditinagu — esan zuen besteak.

Pistolak egur piloaren kontra utzi zituzten. Bi ahizpek ez zuten iheserako motiborik ikusten, baina gutxiago han gelditzeko.

— Nola ziteken honelako basamortuan honen arrosa pare politik topatzea?

Haiek hurreratu ahala, bi ahizpak atzeruntz zihoazen, egur pilo luzearen kontra nora ezik aurkitu arte.

— Hauen bildur al zarete orduan?

Batak galtzak askatzekoa egin zuen. Bi ahizpek, basahuntzek bezalako ijutia eginik, esmerilean zorroztutako txilioa jaurti zuten. Esterrek maldan behera ihes egitea lortu zuen. Jazarleari, abiadurak eta berotasunak kremailera aska berri zuela ahatz erazirik, galtzak erori zitzaizkion, buruz aurrera otatzan sarturik. Urnek, egur madarikatu batean oztopo eginik, lurra jo zuen. Jazarlea, erresistentziak berreturiko irrikaz, lehoia zebra gainera bezala oldartu zitzaion. Bortxaz buelta eragin eta ahoz gora jarri zuen. Eskuak garondopean uztar erazirik eta oinak oinen artean estutuz, ahoz aho bortizki musukatzen zuela —bide batez ondorengo egintzarako errendi eraziz—, gibel parean haginkada amorratu batek kolpera jauzi eragin zion. Haren azkartasuna baino Larraungo txakurraren horzkatasuna biziagoa izaki, deabruzko eraso hura zer zen ohartu orduko, beste lau haginkada sartu zizkion, azkenengoa begi begian. Pistola hartu zuen, txakurra garbitzekotan. Bixer, ordea, Urne atzetik zeramala, tximistaren parte aldendu zen pinadian behera. Beheko errekaz handik salborik ia, bi ahizpek malkoka musukatu zuten beren Bixer leiala.

Denuntzia sartzerakoan, ez noski hartaratzea gutxi kostaturik, idazkariak amoltsuki aholkatu zituen, abokatutzat

bere lagun baten izena emanik:

— Oso trebea eta zintzoa, eta merkea, hau ere honelako kasuetan garrantzizkoa baita.

Auzia sei hilabeteren buruan erabaki zen. Abokatuak bere lanengatik lau mila pezeta —denbora hartan! — kobratu zituen eta Larraun Zaharren txahal bat saldu behar izan zuten. Lehen Instantziko Auzitegiak denuntzia baztertu eta bosna mila pezetako multa ezarri zien bi ahizpei, «oinarri gabeko difamazioagatik». Larraun Zaharren beste bi txahal saldu behar izan zituzten.

Orduko idazkaria atarian zegoenaren aita zen.

Jonen ama bederatzi urte lehenago gertatuaz oroitu zen. Lehenengo hiruilari zegokiona ordaintzean, idazkariak esan zion:

— Hire neba lotsagaldu horrek zergatatik libre dagoela uste al din? Hain lazki eta mehatxuzki mintzatu zitzaion Bartelez, non Larraun Zaharreko eta Berriko hondamendia sinesteraino ikaratu baitzen Miren. Ez zitzaion beste irtenbiderik bururatu herriko dendari konfiantzazko bati diru prestatua eskatu eta ordaintzea baizik. Bartel, hori jakitean, buztana moztutako sugea bezala haserretu zen. Idazkariak berak baino beltzago ipini zuen emakume gaizoa:

— Nola ez dion gonapekoa ere eman, mamala inozo horrek? Jakin ezan Bartelek ez diola zorririk ere zor zerri horri.

Orduko idazkaria atarian zegoena bera zen.

— Hik zer diok, Todor? —galdetzen zuten hiru arrebek—. Buru makur egonik, ez diagu ezer egiten.

— Zuek goian al daukazue? Itxasoaren mailatik esan nahi ez baduzue behintzat. Orain arte goren erabili dudanean ere, ez dinat horien orkatilara altxatzerik izan.

— Zerbait pentsatu beharra diagu, ordea.

— Larraungo historian pentsatzekoak pentsaturik zeuden.

— Lotsagabe horiek nahi dutena egin dezatela orduan?

— Horiek legearen ordez zetozen, edo legeren baten ordez, akaso berek bidean asmatua bera. Bi gaitz haunditarik txikiagoa hautatzea beste biderik ez dinagu.

Izkribaua, idazkaria eta agoazila ez zeuden alper atarian. Goiko eta beheko bi balkoien artean, etxearen aurre pentagonalaren erditzat, harlandu bat zegoen izkribu honekin:

MDCCXLVIII —PRUDEN LARRAUN

— Mila zortzirehun eta berrogeita zortzi —esan zuen idazkariak—. Pruden delako hori ez zuan nonbait bere buruaren lotsa. Analfabeto garbia segur asko, hala ere bere izena hilezkortu nahi.

Izkribaua urrungo mendi elurreztatuetara adiago zegoen, agoazila atari gaineko habe nagusiaren urteak kalkulatzen ari zen bitartean, izkribu datak hura ere hartzen zuenik ohartzeke. Idazkaria bere harlandura zegoen. Analfabeto bat bere izena irartzen ausartzeari lotsagabekeria garbia zeritzan, ia irain pertsonala. Kontuak jorik, Pruden hura Bartelen bostaitona zela atera zuen. Prudenen lotsagabekeria zuzenki mendekatzerik ez zuenez gero, bost belaunalditan zehar Bartel zerga lapurrarekin topo egin zuen berriro.

— Madarikatua! —pentsatu zuen—. Prudenen aurreko eta ondorengo guztiak zituan zerga lapurrak.

Haren egitekoak dimentsio arras berriak eta eskergak zituen, Bartelen ez ezik genealogia osoaren justizigile bilakatu baitzen.

## MISERIAREN LOTSAGABEKERIA

### 1

Arratsaldeko bostak eta erdietan, Jon autobusetik jetxi eta mendian goruntz abiatu zenean, Euskal Herriko errepide guztietan erretirada agindu zuten. Bai gustora lagatu zuela harako taket gazte hark hamar egunetan tinko eta luze edukitako arma. Kulata lurrean eta kainoi muturra aulkian, besoak lasatu zituen, hainbat egunetan arnasa arrazionaturik edukitako hasperenez.

— Ordua izan duk. Terrorista madarikatuok!

— Zer moduz? —galdetu zion zaharrago batek, koarteleruntz beren patruila kotxean zihoazela.

— Zer esatea nahi duzu, ba? Bapo nekaturik ezer ezerako.

— Nola ezer ezerako?

— Ez dugu harrapatu.

— Koino! Lehengoan harrapatzeko bildurrez eta orain ez harrapatuaren kexaz?

— Barregarri iruditzen zait, lotsagarri ez esatearren, hainbeste gizonek hainbeste egun alperrik ematea.

— Alperrik ez, mutil! Hasieratik genekiean ez genuela iheslea hatzematerik, baina ba al dakik beste zenbat harrapatu ditugun?

— Tiro batto jaurti gabe. Ez dakit zertarako egin ge-

nituen apunteri ikastaro trinkoak. Ohorezko diploma eta guzti gainera.

— Armak tiratu gabe bildurgarriagoak dituk. Bala bakoitzari bizi bana egokitu behar zaiok. Bestela errespetoa galtzen zaiek. Hire diplomak hik uste baino egiteko haundiagoa zeukak. Jendeak ba zekik apunteri ona dukala eta nahikoa duk hori.

Auto batek albotik pasatu zituen, zeinetan bi emakume arretagarri baitzihoazen, bata bolantean eta bestea zerbait interesgarria kontatzen, antza.

Taket gazteak halako txistua joko zuen, uniformearen eta patruilaren erreparoz izan ez balitz. Zaharragoari belarrira aitortu zion:

— Ba dut larrua jotzeko gogo bat! Bateria goraino daukat.

— Arraioa! Hori lehengo hautua baino atseginago zaidak.

— Hamar egun fusiltzarra tente! Bi armak bateragaitzak direla dirudi.

Bai zera! Agente beteranoak biak antze berdinez maneiatu behar ditik, besteak beste, gorrotoa eta maitasuna armonizatzeko.

— Madarikatua! Larrua jotzea ere kontenplaturik al dago gure arautegian?

— Ez letraz, bai izpirituz. Hi ez haiz oraindik gure langintzako abantailez ohartu. Inori jo al diok?

— Koartelean atxiloturik dauzkagun hiru neskak pasatu beharko ditugu txandaka.

— Ale ederrak! Belarrondoko bana baino gehiago estimatuko diate. Bildur nauk, ordea, hi baino aureragokorik ba ote den.

— Komandantea eta ezkonduak ez al dira, ba?

— Neu ere ezkondua nauk, baina noizik behin beha-

rrezkoa duk armen apunteria joleku desberdinetan frogatzea. Emaztea gehiegi kargatzerik ez duk komeni. Erditzeaz eta haurrak hazteaz ere sobera zeukak gaizoak.

Patruila kotxea garajean sartu zen. Handik koartelera oinez zihoan zortzikotea, kalea betean, kainoi muturrak buruen paretik gora. Ibilkera pausatua bezain desafiozkoa zeramaten, zeru-lurrei zeuden lekuan jarraitzeko baimena luzatuz.

— Beno! Hasteko, esperientzia polita —esan zuen taket gazteak koarteleko atarian.

— Politagorik ba dukek oraindik —erantzun zion lagunak bizkarreko batzuk emanez—. Akaso asteon berton igon beharko diagu Larraunera, Bartel delako baten bila.

Emakume txilio batek zorrozki ebaki zuen kale luzeko airea:

— Zuen amari hazia ezarri zionak hobe piz egin balio!

Larraungo bizkarretan labaina bezalako haizetxoa zebilen. Ortzia urdin zegoen, nahiz eta otsaila izan. Jonek, presatsuenean ere, ezin aurrera pasatu, ohiko mendi tontorrean geraldi bat egin gabe. Eguzkia erortzear zegoen urrungo mendi ostera, gailur elurreztatuek elkarri argia bristatzen ziotela. Iparreruntz, begiak itxasoan galtzen ziren. Oinez ikasi zuenetik, hamaika bider begiratu zion munduari gain hartatik. Sei urte arte, mundua hangoxe ikusterreaz berdintzen zuen, eta mundua izugarriro haundia iruditzen zitzaion. Ez zen Jainko makala behar, hura egiteko. Gero mundua biribila zela esan zioten eta eguz-

kiak ostetik ematen zuela itzulia. Osteko mundua beste Larraun bat zela atera zuen, eguzkiak egun erdi egiten baitzuen Larraundik pasatzen. Urteak iraganez, beste zenbait bitxikeria ere ikasi zuen edo irakatsi nahi zioten. Filosofiak, arteak, erligioak... munduaren begirakera berria omen zekarten, baina, gailur hartara heltzean, denak zakutik hartzera bidaltzen zituen. Mendi hegietan jendeak eten gabe ziharduen, lurrari bizipidea atera nahiz. Garraio ahigarria behetik gora, gurdiz, bizkarrez, egunero, urtero, hil arte, Sysiforen mitoa jolastzat utzirik. Ibarreko herri hazietan, anitz tximini beltzek langileen izerdia ketan barreiatzen zuen, gobernuaren kontzientzia sozialari arrazoi bikaina eskainiz, kutsaduraren aitzakiz presupostu berri bat zabaltzeko.

Arratsalde hartan, nahiz eta amona ikusteko urduri, podium hartatik munduari begiratzeko aparteko premia sentitu zuen. Laburki, baina, lehen ere milaka aldiz begira egona baitzen, begi kolpe batez hatzeman zuen ikusterre osoa. Ikusten zuenarekin barrutik kanporuntz kidetu nahirik, lurrean ahozpeztu zen, besoak zabalik, neguko hezetasuna usnatuz, ira eta belar latzak dastatuz, lurrarekin maitasuna egiten bezala. Piztia zalapartari batek behatzetatik bururaino kilikatu zuen. Hura sustoa! Etxeko txakurrak paparrean gora saltatzen zion behin eta berriro.

Hi hemen, Luki? —Animalitxo hura mugimendu hutsa zen—. Bizirik al duk amona?

## 2

Larraun Zaharrek sukaldearen parean sala haundia zeukan, ilun samarra, leihoska bakarra baitzuen. Antxina, etxeko jaietan, sala hura jendeztatu egiten zen. Orain

desolazioaren abaroa zirudien. Oholezko eskilara mehatzak ganbarara zeraman, desolazio haundiagoarekin bat egitera. Behinola sala bera ere, ganbarak ezin harturik, artoz, gariz, babaz eta abarrez beterik egon ohi zen. Orain patata multzo zimel bat zetzan zokoan, lau zango luzedun ehomakina ugarreztatu baten babesean. Letra batzuk ozta-ozta irakur zitezkeen: «Ajuria. H. Vitoria». Ajuriatarrok pozik egon zitezkeen, beren izena toki onean baitzegoen. Bipiaren eta desolazioz elikatzen diren zomorroen kirrizkada etengabea entzuten zen. Amonak, zenik txukunenez ere, ez zezakeen halako etxetzarrik garbi eduki. Sala hura zapaltzen zuen bakoitzean, hortz artean marmarka ekiten zion, aurreko mendekoei gupida eske.

— Ai, ene Jainkoa! Etxe eta etxeko, pipiak jan behar gaitu.

Izkribaua, idazkaria eta agoazila salaren erdian zeuden, mahai inguruan, bi kandelaren argipean okela xerra bana jaten. Testamentu arazoak bukatutakoan, Todorrek eta hiru ahizpek, kunplitzearren gehiago, mokadu bat egitera gonbidatu zituzten. Berandu zela, gaua gainera zetorrela, hain ordutarako herrian egon behar zutela, goserik ez zeukatela... baina azkenean gelditu. Hura zen jatea, idazkariak batez ere. Larraungo testamentua inozentada garbia atera zitzaien.

— Zer kristo egin dik atso zahar horrek, bizi guztian lau mila hogerleko ziztrin besterik ez aurrezteko?

Sardexkada bat bi papoez mastekatu eta basokada ardoa irentsi zuen.

— Nola atera behar diate ezer etxe honetan, ormak ere erortzeko nagiz baitaude tente?

Bazirudien larraundarrek miseria hura apropos landu zutela, idazkariari muturretan ematearren. Ba zirudien amona laurogei urtetan apropos eten zela, hiltamuan idaz-

kariari adarra jotzearren.

Ez zen gutxiagorako, teilapeak ere diruztaturik zeudelakoan, Bartelen zor laurdenik kitatzekorik ere ez baitzuten aurkitu. Gizalegez baina amorruz, beren huts profesionala jan edanez partzea pentsatu zuten.

— Kafetxo bana?

— Azpiko gelan ama hiltzen eta kafea hartzen gainean? Itxura, presa, heriotzaren errespetoa... Baina erremediorik ez zuenez gero. Gainera agirian balitz ere. Azkenean baietz.

— Txokorrik?

— Bai.

Hauxe zen agoazilak afari guztian egin zuen hitz bakarra. Idazkariari, txokorreraino eskatzerik ez zitzaion bururatuko, baina agoazilarentzat ekarri behar zenez gero... Bapo jarri ziren hirurak.

— Kontuak kontu —zioen idazkariak—, nekez asmatuko diate jan edana bezalako inbenturik.

Izkribaua beste inbentu batetik zebilen, antza.

— Emakume atsegina —esan zuen zerbitzen ari zitzaien Urnez—. Eta ederra!

— Ohea mahaia bezala zerbitzen badu, inbidia zioat senarrari. Koino! —hotsegin zuen idazkariak burutazio jeniala etorri zitzaiolakoan—. Behean hiru alaba, goian hiru aldaba, era hoberik ba al da? Ez duk gizona ogi hutsez bizi.

— Historikoa litzatekeela aitortu behar, ama hiltzen eta gu alabak izorratzen.

— Bah! Historiak haundiagorik ezagutu dik. Nire lehengusu batek emakume bat hil egin zian, lasaiago bortxatzeko.

Ehomakinan ezkutaturik eguna pasatutako saguzaharrak hegada tentelak egin zituen hiru buruen inguruan.

— Madarikatua! Ea beheko atsoaren arima dugun berau!

## ZERGATIK EZ DIAGU GARBITZEN?

Iluntzeko seirak eta erdietan heldu zen Jon Larraun Zaharrera.

— Eup!

— Ene! Nola hi hemendik?

— Zuek etorri zareten bezala. Bizirik al da amona?

— Azkenetan. Baheki zenbat aldiz aipatu duen hire izena!

— Zer da goiko berbaro hori?

Amak, bi izeben laguntzaz, idazkaria izkribauarekin nola etorri zen azaldu zion. Nola eta zergatik testamentua Bartelen alde eragin zieten eta gainerako guztia, afariraino.

— Afaria jendaila horri?

— Ez genitian Larraungo puntatik ezer opatu gabe bidaliko, ez?

Okilamak, umeengana itzultzean, habia sugez beterik aurkitzen duenean bezalako higuina eta indignazioa sentitu zuen Jonek. Une batez ezbaian egon zen, haiengana igon ala amona ikusi. Amona ikustea erabaki zuen.

— Begira nor datorkizun, ama.

— Amona! —dei egin zuen Jonek, ohe gainera makurturik.

— Jainko bedeinkatua! Gure Jontxu al haut?

— Bai, amona. Berbera nauzu.

Emakumeak bortizki besarkatu zuen, agoniako ahultasunetik azken indarrak aterarik. Jonek haren orakeran herioaren dardara somatu zuen. Aurpegi eta lepabuelta azaltsu haiek, urteez gainera, lanaren eta sufrimenduaren gastatze errukigabea salatzen zuten. Amonak mutila apartatu egin zuen pixka bat, haren aurpegia hobeto ikusteko.

— Nola etorri haiz baina?

— Nola ez nintzen, ba, etorriko? Munduaren azkenetik ere ortutsik etorriko nintzaizun.

— Nola utzi diate etortzen?

— Utzi ez ezik, bidali egin naute, amona. Apezpikuarengandik beherengo nagusiarenganaino esaka ari zitzaizkidan: «Hoa eta eramaiok amonari gure partez ere musu haundi bana». Apezpikuak aparteko bedeinkazioa eman zidan, Aita Santuak zuretzat bereziki bidalia.

— Ama Birjinaren bular santuak! Egia al duk guzti hori?

— Bai, amona. Hementxe nagoen bezala.

Egia inoiz kriminala izatekotan, orduantxe izango zela pentsatu zuen Jonek.

— Ez, amona! Ihes egin behar izan dut. Nola utz zezaidaketen zu bezalako atso zahar batengana, laurogei urtetan lau mila hogerleko besterik aurrezteko gauza izan ez den atso batengana etortzen? Euliek molestatu egiten dute bederen. Zuk horixe ere ez. Zeuk daukazu errua, lehenago ez hiltzeagatik.

Pentsakizun hauekin batera, Jonek sekulako fantasiak asmatu zizkion.

— Sekula honelakorik! —hots egiten zuen tarteka amonak, harriturik bezain sineskor. Jonek gehien sentitzen zuena aipatutako pertsona haiek ere maitatuz hilko zela

amona.

— Pozik hilko nauk, etorri haizelako.

— Ez, amona. Horrelakorik pentsatu ere ez. Ni ez nauzu amona hiltzen ikustera etorri, bizitzen baizik. Beste pare bat urte gutxienez.

— Pare bat urte? —hots egin zuen, pare bat milurte entzunik bezala.

— Jakina, ba! Negua ba doa. Udaberrian txoriak bezain bizkor zaudeke berriro. Neuk ekarriko dizut hirina errotatik eta egurra basotik. Behinola bezalako opil gozoak erreko dituzu, politena niretzat, eh? Iluntzero etorriko natzaizu eta sutondoan eserita, zure gaztetako kontutxoak esango dizkidazu, nola aitona leihopera etortzen zitzaizun ezkutuka, nolako erromeriak egiten zenituzten auzoko neska-mutilek Goieteko landan, nola panderoa jotzen zenien etenak eragin arte, nola txakurra xaxatu behar izan zenion etxe ingurutik kendu ezinik zenbiltzan mutil kokolo hari, nola ezkon jira Donostian egin zenuten eta zer gauza eta jende tailu bitxiak ikusi zenituzten, nola... Isildu egin zen, amona kordegabetzen ari zelakoan.

— Amona!

— Segi, Jontxu, segi! Hik ba dakik amonari nolako gauzak esan.

— Bai, amona. Horiek denak kontatuko dizkidazu. Eta nik kontatuko dizut zer mundu klase dabilen gaur, nolako aurrerapenak asmatzen dituzten eta, batez ere, nolako sua dakargun zu bezalako amonadun gazteok, emakume battok ere ez dezan aurreruntzean zuk hainbat sufritzerik izan.

— Nondik duk osaba Bartel?

— Basotik. Deitu diote.

— Gure Bartel! Ene Bartel! Zer izango ote duk hitaz?

— Lasai, amona. Osaba Bartelek ez duke ezeren be-

harrik. Nolako seme-alabak eta ilobak dituzulakoan zaude, ba?

— Jainkoak entzun hazala.

— Gainera zure lau mila hogerlekoekin ba duke zati baterako.

— Lau mila hogerleko, bi mila eta hirurehun eta hamaika pezeta. Eta patrikaran ditudan beste zazpi hogerleko, zortzi peseta gorri, zazpi txakur haundi eta hamaika txakur txiki.

Zifra haiek dirutza zirela uste zuen amonak, dirua balio efektibotik ez, baina kostatzen denetik neurtzen baitzuen. Jonek kolpera hesteak kareztatu zitzaizkiola sentitu zuen, amonaren eta goiko hiru afaldarren kontrastez.

— Horiek gutxi izatekotan, hemen gaude gu. Zuk zeurea mujuruz betea duzu. Ba al dakizu zenbat lan egin duzun? Ba al dakizu zenbat zor dizugun?

— Neuk ere ba diat zorrik ugari, Jon —esan zuen amonak aboskera minez.

— Zuk zorrik? Zer eta nori?

— Neure burua eta Jainkoari. Neure burua eta Jainkoari, Jon.

— Zer zor dukezu hiltzean, bizi guztia zorpean eman baituzu? Zer kontu eman behar diozu Jainkoari, zerori baitzaude hari eskatu beharrean?

— Ene Jainkoa! Zertzuk esaten ari haiz?

— Ez naiz ariko, ba? Horixe besterik ez genuen behar.

— Hik uste baino amona pekatariagoa daukak, Jon.

— Zer pekatu eta mekatu, astirik ere ez baituzu izan?

— Barkatuko ahal zidak Jainkoak!

— Berak dauka zuri barkatu beharra, lotsarik baldin badu.

— Hik esaten dituk esatekoak!

— Haundiagorik entzun behar duzu, jaramonik egi-

ten ez badidazu.

— Neure arimatxoa salbatuko banu behintzat.

— Aizu, amona. Labe gainean uso aldra bat dago.

— Deabruak ere ez dituk urrun ibiliko.

— Deabruei greba egin diete bezeroek. Arimena baino arazo segurragoen peskisan dabiltza orain.

Jonek bere baitan suminki madarikatu zituen arima asmatu zuten guztiak, azkenean huraxe ere kentzeko. Amonaren gorpuzñoa bortizki iharrosi zen, pixkanaka lasaituz zihoala gero.

— Amona! Amona!

Larraungo amonak ez zuen gehiago hitzik esan.

Eskilarak igotean, esku hutsik nola zihoan pentsatu zuen Jonek.

— Madarikatuak! Eskupetaz igon behar nikek.

Hiru arrotzek farias bana eta «Veterano» botila erdian behera zeramaten. Idazkariaren ustez, kafetegiko partidari ez zion hark zorrik. Gainera hain toki sorginezkoan. Jon eskilara buruan gelditu zitzaien. Kandela argiak eta bitarteko ketzak eragozten zien Jonen begirada lehergarriaz ohartzea. Idazkariak erreparatu zuen lehenen.

— Kaixo! Gau on!

— Gau on! Ba dakusat, bai, gau ederra daukazuela. Etxe honetako etorkizuna segur dago zuekin.

— Bai horixe! —esan zuen izkribauak, oraindik mutilaren aboskeraz ohartu gabe—. Etxea hondatzeko bil-

dur bagina, ez geundekek honen lasai.

— Nola apaizgaia hemendik? —galdetu zuen idazkariak—. Amona ikustera?

— Amona ikustera, bai, ez lumatzera.

— Zer?

— Ba al dakizue amona hila dela?

— Hila dela? Duela ordubete bizkor ematen zian, ba. Sentitzen diagu.

— Zer kristo sentitu behar duzue zuek! Zaudeten tankeran sentitzen duzuela esateko aurpegia behar da.

— Aizak, hi! Iso, mesedez! —Jon hurreratuz zihoakien. Oraingoan ondo jabetu ziren hura ez zebilela kopletan—. Mintza hakigu mantsoago, guk ez baitugu amonarik hil.

— Bazenekitelako berez hilko zela. Hargatik asmatu duzue bizirik gelditzen direnei tiratzea—. Eskuaz mahaia seinalatu zuen, afaria adieraziz—. Larraundarroi ez digute udaletxean honelako mahairik inoiz prestatu.

— Benetan ere estimatzen diagu...

— Estimazioa merkea da —moztu zuen Jonek—. Hemen ordaindu egin behar da.

— Arraioa! —hots egin zuen idazkariak, ohorez eta duintasunez gainezka—. Esak hori, mutil!

Izkribaua Larraungo gaitz guztiak beregandurik bezalako hunkitasunez mintzatu zen:

— Konprenitzen diat hemen bizimodua ateratzea zer den. Horregatik, niri behintzat, ez zaidak bururatu ere egin ordaindu gabe joaterik. (Bihar pasatuko diedan erreziboan kargatu eta kito). Esaiok amari zenbat den eta egina.

— Bai zera! Larraunen, atzera samar ibili arren, lanen banaketa arrazoizkoa aspalditik egina daukagu. Amari prestatzea zegokion. Kobratzea neuri dagokit.

— Beno! Zenbat eman behar diagu orduan?

— Lau mila hogerleko, bi mila eta hirurehun eta berrogeita bi pezeta, zazpi txakur haundi eta hamaika txakur txiki.

— Zenbat? —bergaldetu zuten zurturik hiru ahoek. Hauxe izan zen agoazilaren afari guztiko bigarren hitza.

— Entzun duzuena. Zuek jandako afaria Larrauneraino altxatzea izerdi asko kostatu da. Prezioaren gainkia nekearen gainkiari dagokiona besterik ez da.

— Baina ez al duk benetan usteko...? Gure bizkarretik karrera egitea pentsatu al duk?

— Eta zuek zer uste duzue, ba? Zezen plaza inauguratzean, gure amonaren lau mila hogerlekoekin palko eder bat egitea, gobernadorea eta haren emazte panpina luzitzeko? Olé! Eta gobernadorearen emaztea emozioz txaloka. Olé! Eta himno nazionala odol isurketaz batera. Oolé! Eta azkenean alkate, idazkari eta herriko gonazakur guztiak gobernadorearen eta emaztearen inguruan, oole!, haien atze-aurreak doilorki milikatuz, ooolé!, ea haien poluziotik zipriztin batzuk bederen harrapatzen dituzten, ooolé!, eta bitartean amona purgatorioan, óle!, berak hainbeste leihaz gorderiko hondarrak, ooolé! putakume batzuek agonian ostu zizkiotelako.

Idazkaria edandako alkoholaren sua sudurretatik zeriola zutitu zen. Mahaiari egundoko ukabilkada eman zion, bi kandelak dantza eraziz.

— Jakin ezak gu ere amarengandik jaioak garela!

— Eroriak esan nahi izango zenuen.

— Hori al duk apaizgaitegian ikasi dukana?

— Apaizgaitegian ez dute zoritxarrez horrelakorik irakasten, haiek eta zuek aldra berekoak baitzarete. Zuek menpekoen mahaian oturuntzak antolatu eta haiek urbanitate arauak. Zuek jendeari etenak eragin bizitzan eta haiek requiescat in pace hiltzean. Esku bikainetan gaude!

Zergatik ez duzue amonaren gorpua ere jaten, harrei karitate hori utzi beharrean?

— Ez zezakeat honenbesterik jasan! —oihuztatu zuen idazkariak, biboteak zorrozturik—. Koartelera gurekin!

Jonengana oldartzean, mokorraz mahai ertza jo eta kandelak hankaz gora joan ziren.

— Ez gaitezen senetik atera —zioen izkribauak, ilunetan haztamuka—. Hobe zaigu denoi bakez amaitzea.

— Zer gertatzen zaizue, ilunetan egoteko? —Hots egin zuen Jonen amak eskilara barrenetik.

— Piztiek ez dute argirik behar —erantzun zuen Jonek, beheruntz zihoala.

Hiru arrotzek ez zekiten oinak noruntz bota salatzar hartan, Jonen amak beste kandela batez lagundu arte. Hirurak isil isilik zihoazen etxe alboan zehar, idazkaria, hortzak garraskatuz, marmarka hasi arte:

— Neuk oinak moztuko zizkioat lotsagabe horri. Neuk irakatsiko zioat horri apaizgaitegian irakatsi ez diotena. Mukizu batek putakume deitu? Kobratuko duk, bai, Jainkoak nahi badu zein ez badu!

Jonek etxe azpiko ereinozpean aurkitu zuen osaba Bartel, orma kontrara kokoriko.

— Eup! Nola zu hemen?

— Nola ni hemen? —bergaldetu zuen Bartelek—. Larraungo azkenkien erreportaia egitera ala?

— Zuk ondo dakizu zertara etorri naizen, osaba.

— Nola zegok amona?

— Hilik.

— Hilik?

— Hilik, bai, hilik. Edo nahiago baduzu, beste mundura joanik.

Osaba-ilobek ere, hilik ez bazen, hilen ahaide zirudite, ilargi zaharrak orma kontrara inguratuak.

— Zer ordutan?

— Zazpiak aldean.

— Nola? —xehetasun hauek heriotzaren tajantziari zerbait kenduko baliote bezala.

— Nola hilko zen, ba? Bizia galduta.

Isilune luzea izan zuten, Bartelen baitan zer zebilen jakitea izugarri zatekeen isilune haietarikoa.

— Zer arraiotara etorri dituk hiru ogigaztae horiek?

— Ondo hiltzen laguntzera nonbait.

— Zuen erremedioa duk hori —bota zion, apaizgaitasuna adieraziz—. Gaizki bizi denari ondo hiltzen lagundu.

— Hona, bada, zer ondo hiltzen lagundu dioten.

Oraindik azalean zeukan sumina hitzetan hustuz, gertaturiko guztia kontatu zion. Bartelek isil isilik entzun zuen. Baina afari kontua aditzean:

— Zerriak! —atera zitzaion barru barrutik, hitz egokiagoaren faltaz, hitza bera ahalik luzeen eta zorrozkien artikulatuz. Ormatzarrean gora begiratu zuen, esanez:

— Ez diat etxeari sua ez emanaren beste penarik. Horiei afaria ematen dienak ez dik azken hoberik merezi.

— Orain ahokadak? Tokian zeunden balentriak erakusteko, ihes egin beharrean. Eskerrak neu etorri naizela. Kristorenak eta bost entzun behar izan dituzte.

Bartelek barre lotsagabeak egin zituen.

— Ona hago hi, apaizgai mukizu baten kristorenak eta bost zein bost kristorenak ere horiei bost axola diela uste baduk.

— Zer besterik egin dezakegu, ba?

Bartel isilik gelditu zen. Pentsaketan bezala egon ondoren, zapla bota zuen:

— Zergatik ez diagu garbitzen?

— Garbitu?

— Garbitu, bai, edo odolez zikindu, kristauago baderitzak.

— Nor garbitu?

— Idazkaria bederen. Oraindik ez ziohazek urrun. Inguru honetan eta gauez, laster egingo diagu horiena. Justiziari on galanta egingo zioagu.

— Ez zara benetan ariko baina!

— Olgetak aspaldi bukatu zituan Larraunen. Boskarren aginduaren aurretik, laugarrena zegok.

— Bai, baina!— Jonek ez zekien hain bat bateko eta molde guztiez gaineko proposamendu hartaz nondik atera. Berdin zitekeen adar jotzea, denbora pasagarria... ala osabak benetan sentitzen zuena?

— Aitor ezak koldar hutsa haizela eta kito.

## HILONDOTIK JAIONDORA

Amonaren gorpua arratsaldeko lauretan altxatu zuten. Bizirik inoiz bisitatu ez zuen hamaika etorri zitzaion kanposantura laguntzera. Apaizak ahaleginak egin zituen haren arima lokalizatzen. Zeruan bazen, on egin zezaiola, purgatorioan bazen, atera zedila, ifernuan bazen... Apaiz gaizoa orduantxe ohartu zen ifernurako botererik ez ziotela eman. Ahaztu egin ote zitzaien? Nolanahi ere —kontsolatu zuen bere burua—, atso hau ifernura bidaltzen duen Jainkoak ez dik bihotz haundirik. Badaezpada, ur bedeinkatu parrasta bat isuri zuen. Gure aita, zeruetan zarena... Marmario sogorrak, abotsezko laba astunak eraman zuen. Errezuak eta ura hesteak garbitzeko direla onak esan ohi zuen Bernar Lekoizek ere ezpainak mugitu zituen.

Larraunen behera abiatzean, berri haundi bat zabaldu zen: Bartel ez zetorren amaren hiletara. Ez zetorren, zeren joan baitzihoan pinadi ertzean gora, bere behia sokatik, txakurra alboan eta zaku zaharra burutik. Noizik noizera buelta ematen zuen, inork ez zezan haren ausentziaz dudarik izan eta jendetza hura bildu zuten motibo guztiak desafiatuz. Apaizak lantzean salmu bat jaurtitzen zuen lau haize hotzetara, arima galduren batek harrapa zezan. Jonen belaunak pot egitear zeuden, osaba Bartel

ikustean. Ekaitz amorratua sortu zitzaion barruan. Indar zehazgabe baina bortitzak osabarengana tiratzen zion. Zer egiten zuen jendetza hartan? Baina ez zen ausartu eta jendetzan segitu zuen. Osaba Bartelen ereinozpeko hitzek gupida gabe mailukatzen zioten belarri ostea. «Aitor ezak koldar hutsa haizela eta kito». Hitz hauek orbita arras berrian jarri zuten, beste grabitate batez, anarteko finkalekuak galdurik, zorabioaren bizkarren muntatu balitz bezala. Mutikotan sentitu zuela halako zerbaitsu oroitu zen, pinu luze baten puntatik txoriekin berriketan zegoela, haize bolada batek hamar metrotako parabolan birundatu zuenean. Hitz haiek entzun arteko aktibitatea, oraingoaren ondoan, pasibitate hutsa zen. Lehen erretoreak, idazkariak, Larraungo pobretasunak, heriotzak... markatzen zuten iniziatiba. Berak zezakeenik gehiena defenditzea zen. Orain, ordea, osaba Bartelen hitzei eskerrak edo deseskerrak, bera zen egile nagusia, omisioz bazen ere. Ausartu izan balitz, idazkaria garbi zegokeen. Hobe, hala ere, ez garbitzeaz damutu, garbitzeaz baino. Baina zergatik zukeen damutu beharrik, garbitu izan balu? Herri guztiak ez al zuen hura gorroto? Ez zegoen hark alukeriren bat egin gabeko etxerik. Okerrena ez zegoela erremediorik, gorroto hainbat bildur baitzitzaion. Otzare bete erregaliz idazkariareneruntz aurkitu zuen emakumeaz oroitu zen.

— Zer on egin dizu, ba, horrek?

— Gaitzik egin ez dezaigun, Jon, gaitzik egin ez dezaigun.

Emakume hura Jonen amona bera izan zen.

Mutilaren baitan kontzientziko bozgorailu guztiak topera jarri ziren. Garbitu izan balu! Inork ez dezake justiziarik bere esku har. Zer espero zitekek, ordea, herri bat halako gizonaren mende jartzen duen justiziaz? Herriak gora jotzeko eskubidea du. Zerera joko duk, Izorramen-

ditik Izorramortura ez bada! Baina justiziak bere bidea du. Hala noski. Jo gora, mutilak, beherunzkoan muturretako haundiagoa hartzeko. Denak izorratzearren, emazteari ere bederatzi ume egin erazi zizkiok alu horrek. Segur gainera pildoraren aurka eta aita santuaren alde dagoela. Hainbeste herritarrek, berak salaturik, hartutako kolpeak gainean balitu, zazpi aldiz ere hila lukek, bai. Deskontu ederra egiten ziok, beraz, behin bakarrik garbitzen duenak. Iso! Norbait hiltzeko, arrazoi haundiak behar dira gero! Haundiagoak batzuk bizirik uzteko. Aita idazkari, semea idazkari, iloba idazkarigai. Noiz arte egon behar dik Lezondok Casiano Bermejuelo Sagradoren dinastiapean? Ez! Bukatu duk. Hurrengo Larraunera datorrenean, hilko diat eta kito.

Hil kanpai sadikoa sorgineztatu egin zen kolpera, orgia unibertsalera deituz bezala. Jendeak pentsatu zuen kanpapandorrea aireruntz eztandatu zela, zati bakoitzak bere hotsa atereaz. Gero jakin zenez, kanpaiak beren kontura harapatzeko irrikitzen zeuden bi mutikok azazku ederra hartu zuten arratsalde hartan, bai eta belarrondokorik ugari ere gero.

Bartelen ausentziaz aparte eta Txomin ehortzaileak hamabost hogerlekogatik hirurehun eta hamazortzigarren gorpua harrei saldu ziela normaltzat jo behar bada, ez zen amonaren hiletan berri haundirik gertatu. Bai, ordea, Jonentzat. Apaizak, bere zeremoniak bukatutakoan, kanposantuko kaperara dei egin zion.

— Berri txar bat eman behar diat. Bazkal aurretxoan erretore jaunaren eskutitz hauxe hartu diat: «Kristorengan apaizkide Jauna: Luzaz eta zentzuz aztertu ondoren, eta apezpikua ere ados dagoela, zure eliztar Jon, berak dakizkien arrazoiengatik, bidaltzea erabaki dugu. Eskertuko nizuke, jakin eraziko bazenio. Bego Jainkoa zurekin.

Kristorengan zure anaia. Urlia»

— Zer? Ez al diok ezer? —galdetu zuen Lezondoko apaizak

— Gure erretore jauna heterodoxo samar dabilela, Izpiritu Santua ahaztu baitzaio.

## 2

Bartel etxe azpiko pinadian zegoen, Jon herritik itzultzean. Sasitza behetik, zulo egin berria alboan eta asto zaharra pinuari loturik beste aldean. Txakurrak, pare bat metro goragotik, arretaz segitzen zituen ugazabaren mugimenduak. Bartelek zakua zeraman burutik bizkarrean behera, sirimiria ari baitzuen. Astoak ere beste zaku bat zeukan, burutik sarturik. Momorro izugarria zirudien, leze mitologikotik atera berri. Galdaratzar bat zetzan lurrean, ganibet haundia eta mazua barruan zituela.

— Abrahamen hilketa prestatzen ari al zara?

— Hala noski, baina hemen ez duk jetxiko kolpea geldi erazteko aingerurik.

Mazua hartu, unea aurkitzeko astoaren bekokia haztatu, txakurrari geldi egoteko agindu eta zart! Momorrotzarra hankaz gora erori zen.

— Bukatu ditun hire kalamitateak! —hots egin zuen Bartelek, astoaren sabela zapalduz.

— Zergatik hil duzu?

— Idazkariaren ordez.

Jonek ez zuen mazukada txikiagoa sentitu, bere koldarkeriaren salapentzat hartu baitzuen.

— Asto gaixo hori baino errudunagorik hauta zenezakeen.

— Errugabeek errudunengatik pagatzea lege zaharra

duk munduan.

Astoa zuloruntz arrastatu eta burua gainbehera jarririk, lepotik sartu zion ganibeta. Odola borbor zerion, hotzaren kontrasteak lurrun beroa igon erazten zuelarik.

— Horixe ere ikusteko nengoen —esan zuen barreka Jonek—. Asto hila odolustu.

— Odolustu gabe jango diat ala?

— Jan? Munduko sarna guztiak soinean dituen asto zahar hori jan?

— Oraindik ez diat hiltzerik erabaki eta bizitzeko zerbait jan beharko.

— Hori jaten duenak ez du bizia askorik maite.

— Hauxe jateko hainbat hain zuzen.

— Zulo hori zertarako egin duzu orduan?

— Larru eta guzti jango al diat, ba? Eta hesteak, eta hankak, eta burua, eta odola! Gezurra zirudik larraundarra haizela.

Zuloa odoleztatuz zihoan. Txakurra muzinka ari zen inguruan. Odol bafadak bildur magikoa sartzen bide zion. Luzaro egon ziren isilik. Sastada luze bat sabelean eta larrutzen hasi zen.

— Idazkaria garbitzeak ez ziguan honenbeste lan emango. Osorik ehortzi eta kito. Asto honi errespetoa zor zioat. Kontzientziak debekatzen zidak harrei jaurtitzea eta neronek jatea erabaki diat.

— Benetan al diozu idazkariaren garbitze kontua?

— Gauza batzuk ez zitezkek aipa ere, benetan izan ezik.

— Orduan konta nirekin! —bota zuen ausarki Jonek, bezperako koldarkeriak kitatu nahiz—. Oraindik ez da berandu.

— Oooo! —hots egin zuen Bartelek, zulotik gora begira—. Egintza bakoitzak bere unea dik. Handik kanpora krimena lukek.

— Atzo ez bazen, gaur eta bihar ere ez da izango.

— Bistan zegok liburutik ari haizela. Hik gauzen esentziak ikasi dituk, baina horiek ez diate Larraunerako balio. Hemen behin iparrak eta behin hegoak jotzen dik. Hemen animaliei ere —txakurra eta astoa seinalatuz— beren eritzia eskatu behar zaiek moralitateari buruz. Hemen gizona eguzkitik eguzkira bizi duk, ez jaiotzatik heriotzara. Horregatik idazkaria garbitzea krimena lukek gaur. Edo, argiago nahi baduk, gaur ez diat inor garbitzeko gogorik. — Heste multzo lurruntsua orduantxe erori zen zulora—. Koino! Zergatik deitzen ote zaiok «Jainkoa» heste nagusizko buzkantzari?

— Sei urte nituenean, ez nuen susto makala hartu, zuen txerri afarian, osaba Todorrek «orain jainkoa jan behar diagu» esan zuenean. Gogoan dut nola Pruden Mintegik esan zuen: «Bapo jarri nauk, jainko erdi janda». Eta zuk erantzun zenion: «Aurreruntzean, beraz, Gure Aita erdi errezatu beharko».

— Ba dik, bai, horrek gure aitaren antza —heste nagusiari eraginez.

— Behin misiolari bat etorri zitzaigun, Alaskako ez dakit non antropofagoak ezagutu zituela eta. Esatekotan egon nintzen: «Hoa Larraunera, jainkofagoak ezagutzera».

— Nori bururatu ote zitzaioan izen hori? —Makila batez heste nagusia zulatu zuen.

— Ez dakit. Deitura zaharra behintzat.

— Ez dakikala? Jainkoaren berri zuek ez badakizue, nork jakin behar dik, ba?

— Aizu, osaba. Nortzuk dira zuek eta nortzuk gu? Jakin ezazu horiekikoak bukatu ditudala.

Gertatutako guztia azaldu zion, nola eta zergatik bidali zuten. Azkenean, burua gailendurik, amaitu zuen:

— Inor garbitzeko gogorik duzunean, Larraun Berrin naukazu.

— Arraioa! Oraintxe gaudek biok sozio hasteko moduan.

Bartelek berri hura pozik hartu zuela zirudien. Astoa, larru eta barru maneiatutakoan, uzkinak zuloan ehortzi zituen. Txikiri ez zitzaion gehiegi gustatu. Haren zinuetatik, dudarik ere ez ezkutuan muturkatuko zuela. Gelditzen zen zatiari makila sendoa sartu zion Bartelek. Odol zirrizta luzez amarauturik zegoen dena. Jonek ezin zuen higuinik gainditu.

— Hobe hori ere ehortziko bazenu.

— Tirok! Lagun ezaidak eramaten.

Makila sorbaldatik sorbaldara, erditik astakia zintzilik pinadian gora abiatu ziren. Duela milaka urte, astebeteto jiratik zetozen Santimamineko ehiztariak ziruditen. Larraun Zaharreko aurre zabalalaren aurrez, egundoko tristura sartu zitzaion Joni. Sastegi lekutsu hartantxe eman zituen haurtzaroko egunik gehienak eta dohatsuenak. Beti «amonarena» deitutako etxe haundi hari nola deitu aurreruntzean? Atariko hage batean eskegi zuten astoa.

— Ehiza bikaina! —esan zuen ironiaz Jonek.

— Nahi baduk, berehalaxe probatuko diagu.— Ganibetaz zati bat kendu zion.

— Eskerrik asko. Hiltzekotan, nahiago dut tiro bat harturik.

— Nik daukadanetik gonbidatu haut. Hoberik dukanean, ba dakik zer egin.

Hitz hauek ezin astunkiago bota zituen Bartelek. Jonentzat bigarren mazukada.

## 3

Ohetik Bartelen txakurraren zaunkak entzuten eta Anbotoko haitzak ikusten zituen Jonek.

**Mari Urrika, Mari Urrika**
**zaitez nitaz urrikal**
**Bidal, otoi, loaren lamina**
**itzarrik egotekotan**
**zure alaba liraina.**

Ezkerrera. Zaitez nitaz urrikal. Ez, hemendik bihotza baitago. Zure alaba liraina. Heurt eskuinera. Honela. Loaren lamina. Belaunak ez daude ondo elkarren gainean. Itzarrik. Lamina. Liraina. Lo. Ba datoz! Nortzuk? Ijitoak. Jagon oiloak! Hiru gizon, sei andre. Isi, Txiki! Hamasei haur txiki, bistan datozenak. Eta orga barruan? Ba doaz. Ama! Amona! Bartel eraman dute! Bi egunen buruan aurkitu zuten Bartel.

— Zergatik alde egin huen ijitoekin? —galdetu zion amak. Bartel txikiak bizkarrak uzkurturik esan zuen:

— Ortutsik ibiltzen ikasteko, oinetakoak garesti daudela baitiozu beti.

— Bartel! Ez! Ez ezak ihes egin! Oinetakotarako lain aterako diagu Larraunen. Bartel! Osaba Bartel! Sukaldeko beheak huts eman du. Jonek brast eman zuen buelta ezkerrera. Osaba Bartelez oroitu zen. Mari Urrika, Mari Urrika! Albokera gaizki hago. Bidal, otoi, loaren lamina. Gora begira.

Alaba...Li...rai...na. Eskola zabuka hasi zen. Uholdeak eraman zeraman.

— Ea! Edozeinek! —oihuztatu zuen maisuak—. Bartel! Irakur herorrek idatzi dukana.

— Atzo gauez afaritan —irakurtzen hasi zen Bartel txikia—, amak aitari esan zion:

— Ez al duk jan behar?

— Ez dinat gogorik —erantzun zuen aitak—. Nekatuegi negon.

— Baina gauero berdin? Nola lan egingo duk jan gabe?

Aita loak hartu zuen mahai buruan.

— Ama! Noiz ekarri behar didazu bizikleta?

— Eta niri soinua, ama?

— Eta niri pultseratxoa?

— Nik ostarkuzko euritakoa nahi dut, ama.

— Niri, ama...

— Baaai! —esaten zuen amak—. Eta gainera abioitxo bana, eskolara joan-etortzeko.

— Zuk egundo ez diguzu ezer ekartzen, ama.

— Zerekin ekartzea nahi duzue, ba, haurtxoak?

— Diruarekin, ama. Diruarekin ekartzen dira.

— Dirua mailuz egiten dela uste al duzue?

— Nola, ba?

— Lanez, haurtxoak, lanez eta nekez.

— Orduan, Larraunen egiten den hainbat lanez, diru asko egon behar.

— Bizitzeko hainbat juxtu juxtu. Edo ez hiltzeko hainbat.

— Orduan lan gehiago egin, ama.

— Aitak ez zezakek lan gehiago egin, haurtxoak. Ala iratzarri eta lanera bidaliko diagu?

— Ez, ama, ez! Isi! Egin dezala lo.

Ai! Bartel! Osaba Bartel! Urak narama! Eraman narama! Aitak buruaz mahaia jo zuen eta itzartu egin zen.

— Zer amets egin duzu, aita?

— Nik, lo nagoenean, lo egiten diat, haurtxoak.

— Baina ametsen bat egingo zenuen, ez?

— Ez, haurtxoak. Ametsetik ez zegok bizitzerik.

— Zertatik, ba, aita?

— Baina, aizak, Bartel! —moztu zuen agiraka maisuak—. Hori ez duk ametsa, egia baizik. Nik amets bat idazteko agindu dizuet. Belauniko goiz guztirako!

Ai, ama! Ai, ama! Eskola irauli egin zuen uholdeak. Jon txikiak osaba Bartel txikiaren kontra txokatu zuen.

— Zer egiten duk hik hemen, oraindik jaiotzeko bahago? Agudo amaren sabelera!

Amaren sabelera itzultzean, Jon txikiak ito behar zuen. Ai ama, ene ama!

Bat batean ohean eserita itzartu zen. Osaba Bartelez oroitu zen. Mari Urrika, Mari Urrika. Loaren lamina ala sorgina bidali didazu? Gelako atea brast ireki zen. Ama zen, ohe atorraz jantzirik.

— Zer gertatzen zaik, Jon?

— Ezer ere ez, ama.

— Nolako ezer ere ez deika ari bait haiz?

— Ni deika? Ametsetan ibiliko nintzen.

— Nola hago eserita, egiten duen hotzaz?

— Ah! Eserita al nago?

Amak mantaz bildu-bildurik etzan erazi zuen.

— Horrelaxe. Geldi. Sudurtxoa bakarrik kanpoan. Lo! Baina hi gaizki hago, Jon! —esan zion gerotxoago, eskua bekokitik pasatzean.

— Ez, ama. Orain lo egingo dut.

— Bekokia erretzen daukak.

— Odolaren beroa izango da.

— Esne beroa ekarriko diat.

— Ez, ama. Nik ez daukat ezer.

— Egik lo.

— Egingo dut, ama.

Jonek begiak itxi zituen. Ama alboan egon zitzaion

apur batean. Argia itzali eta kontuz kontuz zihoan kanporuntz.

— Ama!

— Ez al hengoen, ba, lo?

— Ama! Beste anai-arrebok ezkondu zinetenean, ez al zuen osaba Bartelek halakorik pentsatu?

— Nolako buruerak darabiltzak, ordea? Egik lo, Jon. Egik lo!

— Egingo dut, ama. Baina konta ezaidazu lehenbizi.

— Behin —hasi zen ama kontari—, igande arratsalde batez, Larraun Zaharreko sukaldean gertatu gintuan. Mendibeko ama-alabak ere tartean zituan. Agi zenez, gure ama eta Mendibeko andrea hitz eginik zeuden, gure Bartel eta Lasunda Mendibeko ezkon erazteko. Gure Bartelek, jokoa igartzean, barre maltzurrak egin zitian.

— Beno! —esan zian gero Bartelek—. Amak konforme zaudetela ba dakigu. Orain geu konformatzea falta da. Horretarako Lasundak eta biok bakarrean hitz egin behar dugu.

Sukaldetik alde egin behar izan genian. Gure ama eta Mendibeko atsoa pozik zeudean, zerbait izango zelakoan.

— Zer deritzan joko honi, Lasunda? —galdetu zuen Bartelek.

— Ez zaidak batere gustatzen —erantzun zuen Lasundak.

— Tematurik zeuden derrigorrez elkar maita dezagun.

— Nik ez diat maitatzeko astirik.

— Nik gogorik ere ez.

— Ezin uka borondate onez dabiltzala.

— Zertarako? Maitasuna ez dun hil ala bizikoa eta hemen hil ala bizi ari gaitun.

— Zer esan behar zieagu orduan amei?

— Gu munduratzeaz nahikoa egin zutela eta munduan

ibiltzen geuri uzteko.

— Ez zekiat elkarri zer esan zioten —ekin zion kontari Jonek amak—, baina biak barreka atera zituan sukaldetik. Bizimodua ez dago jolaserako, esan zian Lasundak. Larraunen badago ezkontzaz aurreko zer eginik —bukatu zian gure Bartelek.

— Zergatik ez zela ezkondu uste duzu, ama?

— Ez zekiat, mutil. Hainbeste gauza zegok munduan nik ez dakidanik! Baina orain egik lo. Neu ere nahikoa nauk osaba Bartelen arduraz loa galtzeko. Horrelaxe. Lo.

— Bai, ama. Zoaz.

**Mari Urrika, Mari Urrika**
**zaitez nitaz urrikal,**
**bidal, otoi, lo...a...ren...**

— Osaba! Zenbat abelburu dituzu?

— Hogeita hiru.

— Zenbat dira hogeita hiru?

— Ekartzak eskuak. Begira. Eskuetako hatzak bi bider eta beste hiru. Bost, hamar, hamabost, hogei eta beste hiru.

— Horiek asko dira, ez?

— Asko dituk, bai, baina lan ere asko egin behar duk.

— Haundiagoa naizenean bion artean lanak egin eta gainerako denbora olgetan emango dugu.

— Ez diagu olgetarako astirik izango lanak lana baitakar.

— Zertarako hainbeste lan, osaba?

— Egiten ez duen askok olgetarako astia eduki dezan.

— Orduan geuk ere ez egin eta kito!

— Hik ez duk oraindik bizimoduko legerik ulertzen.

— Ni hirugarren liburuan nabil gero! Eta laugarrenera pasatuko nauela esan zidan atzo maisuak.

Munibeko landa zabalera heldu ziren. Erromeria onenean zebilen. Jon txikia harro ibiltzen zen, osabarekin erromerietara agertzean.

— Hemen gure Bartel! —esaten zuten—. Gaur andregaitara?

— Nik ganadu zihurrez jokatzen dinat —erantzuten zuen, neska gazterik tartean bazen—. Behia, merkeago bada ere, saldu egin ziteken. Beste horrek, ordea, norbera sal zezaken.

— Ez al duk maitasunean sinesten?

— Gehiago askatasunean.

— Ez zeukatek elkarren kontrakoak izan beharrik.

— Ez elkarren kontran ipini ezik.

— Zertarako behar duk orduan askatasuna?

— Askatasuna bera dun helburu. Ni Adan izan banintz, ez zunan gertaturik gertatuko.

— Baina Ebak ere...

— Goazen, Jontxu. Hauek olgetarako gogoa zeukatek.

— Jakina! —baieztatzen zuen mutikoak gizonki—. Bizimodua olgeta dela uste dute gaurko neska suntzunek.

Bartel tabernako mostradorean beste gizonekin pentsuen goratzeaz eta esnearen beheratzeaz ari zela, Jon txikiak Elga txikia erreparatu zuen, aitaren ondotxoan.

— Elga! Irtengo al gaitun kanpora?

— Harrapaka! Niri ez zaidak iturrika gustatzen.

— Edozertara. Gure osabak bizimodua ez dela olgeta esaten din, baina zer? Ai! Ito behar naun!

Kolpera ohean eserita itzartu zen. Jon osaba Bartelez oroitu zen. Eta Elga Agerrekoz.

— Elga Agerreko! —hasperen egin zuen—. Ez lo ez la! Mari Urrika, Mari Urrika! Egin ezan nahi dunana!

Gogoratuko ote zen Elga? Hamalauna urte zituztela, behizain gertatu ziren biak basoan.

— Non utzi dituk behiak?
— Hor zebiltzan nonbait.
— Jarriko al ditiagu burrukan?
— Ba!
— Bertan garbitzen badu, ez negarrik egin gero!

Hura zen adar hotsa! Kosmos osoaren patua jokatzen zela zirudien behi haundi haien adar artean. Jonen behiak irabazi zuen.

— Zer dion orain?
— Suerte hutsa. Gure behia oztopatu egin delako.
— Suertea bai ihes egin ahal izan duelako, bestela tripak aterako zizkionan.
— Beno! Behitan irabazi duk, baina herorrek ezetz irabazi niri.
— Guk burruka?
— Zergatik ez? Apaizgaia haizelako?
— Ez baina...
— Geldoa! Aitor ezak irendu egin hautela eta kito.
— Irendu ni?

Tentela, eroa nahiz edozer entzuteak ez zukeen hainbeste sumin eraziko. Adimendua eta zentzua barrabilen laguntzaileak omen dira.

— Irendu ni? —hots egin zuen berriro—. Oraintxe ikusiko dun!

Lurra gorritu arte iraulkatu ziren, izadiko indar aremeen betidaniko desafioa ebazten ari balira bezain lehiatuki, aldasbeheran bilinboloka, sakongunea jo arte.

— Esan ezan orain irendurik nagoela! —Mutikoak neskatoa mendean zeukan—. Etsitzen dun ala ez?

Elgak algarazko frenesiari eman zion.

— Esaidan etsitzen dunala!
— As! Ast! Astako hutsa haiz hi!
— Etsi ezan ala bularretatik haginka egingo dinat.

— Ez haiz gauza.

— Ezetz?

Eskuineko limoitxo guri arteza hortz artean hartu zion, izerdiaren gazitasunaz batera sentsualitate hasberriaren zapore hordigarria dastatuz.

— Ai! Min egiten didak!

— Etsi ezan ala bi titiak jango dizkinat.

Neskatoak ez zuen esten, barre eta barre egiten baizik, eta mutikoa ez zen ausartu mehatxua betetzera.

Jonek erlojuari begiratu zion. Goizaldeko hirurak. Eskerrak ez nizkiola bi titiak jan. Berak baleki zen pentsatzen nagoen!

**Mari Urrika, Mari Urrika,**
**Bidal, otoi, loaren lamina**
**Edo Agerreko Elga liraina**

Haizearen txistuketa leihoan, izotza egiten kanporan, bai ederto egoten dela mantapean. Ea! Oraingoan bai. Lamina... Liraina... Looo!

— Tratulari batek hamar filosofok baino gehiago zekik. Bizimodua atera eta gainera ibili, ikusi, tratatu.

Larraungo abere trafikoak ez zeukan azkenik. Saldu, erosi, trukatu, eraman, ekarri.

— Kostata, baina menderatu diat, bai, bizimodua.

— Eta orain zer, osaba?

— Orain segi azkeneraino. Zerk eratzan zezakek gaztainarik sendoena? Haizkorak. Eta kokoak.

— Zer gertatzen zaik, Bartel? —hots egin zuen ama zaharrak azpiko gelatik.

Leihotik burua zintzilik. Ahotik behazuna eta odola darizkio. Ilargi betea aurrez aurre. Zer patu gaizto zekarren hire betetasunak?

— Zertan ari haiz, Bartel?

— Ilargiarekin maitasuna egiten! —erantzun zuen Bartelek, berekiko pentsatuz: Madarikatua une batean krask egin dezakeen gizona!

Bartel Larraungo, ez nekeak ez haïzeek ez gerrak ez maitasunak menderatu ezin izan zutena, urdailaren erortzeak makur erazi zuen.

Medikuz mediku, diruak urtu eta gaitza gaitzagotu. Azkenez, sasi osagileak, atso sorginak eta denak ikusi zituen. Merkeak zirelako eta, batez ere, magiaren ustekabean zeukalako itxaropen bakarra.

— Urdail eroriak erremedio bakarra dik: Altxatu! —esan zion atsoak—. Noruntz eroria daukak?

— Ezkerreruntz uste dut, andrea.

— Orduan, goizero barautan, minutuko lau eskegialdi esku ezkerretik, ordu laurdeneko saioan.

Belar saldak, eskegialdiak, ilargia eta ama zaharra, odola eta behazuna, eta gero belar salda gehiago eta eskegialdi gehiago.

— Erremedio honen sekretua sendatu arte ez aspertzean zegok —amaitu zuen atsoak.

— Utz nazak eskegita betiko. Hau ez duk gizonaren martxa —esaten zion eskegialdiak egiten laguntzen zion ilobari.

— Ez, osaba. Sendatuko zara.

— Zertarako sendatu behar diat orain?

Danbarrada eta dardara. Larraun Zaharrek bere burua irentsi du. Ez horrelakorik, osaba! Aaai! Jon, otsaileko goizalde beranduan, laugarrenez itzarrik, osabaz oroitu zela edo oroitzerik utzi ezin zuela, Bartel ez zen gizon hondakina besterik. Sagarrondo eroria bezala, zutitzeaz etsirik adar kraskatuak lurrean sartuz, biziaren arrasto apurrak zurrupatzen ari zena.

— Zergatik ez daiteke gizonik berraltxa?

**Mari Urrika, Mari Urrika**
**Ez zaitez nitaz urrikal.**
**Ez dut behar lorik**
**Ez alabarik**

Bai! Goizean bertan joango zen. Entzun nahi ez bazuen, lepotik oraturik entzun eraziko zion. Onartzen ez bazuen, garunak ireki eta sartuko zion. Zergatik ez daiteke gizonik berraltxa?

Goizeko hamarrak aldea zen. Eguzkia nagi eta motel zetorren, aurreko gauean eroritako izotz maindire zuria ezabatzeko indarrik gabe. Jonek landa gorenean aurkitu zuen Bartel, bere behitxoa sokatik. Egun onak eta ohiko arrunkeriak trukatu ondoren, Jonek zuzen jo zuen:

— Aizu, osaba. Lehenago haserre zinen, zure soziotasuna ezetsirik, apaizgaitegira joan nintzelako. Oraintxe gaude aukeran. Zuk burua eta nik lana, Larraun Zahar urtebetean berriturik dukegu. Ez dut zure errukiz, maitasunez, gorrotoz edo zure duintasuna minduko lukeen ezein sentimentuz egiten, buruan sartu zaidalako baizik. Zu burugogorra bazara, jakin ezazu behin jo nuela buruaz orma eta berean ormak egin zuela atzera. Beraz, arratsaldean bertan etorriko naiz, goldaketan hasteko. Eragozpenik? —bukatu zuen zorrozki, bueltarik gabeko sententzia diktatu balu bezala.

Bartelek, nola ez, eragozpenik ugari zeukan. Baina hain

kolpera, zen zuhurrean ere, desarmaturik gelditu zen.

— Errekoino! Osaba salbatzea pentsatu dukala, beraz. Gorputzez ala arimaz?

— Arratsaldean jakingo duzu. Ezetzean bazaude, garbitu egingo zaitut eta kito. Horrelaxe partuko dut idazkaria bizirik uztea. Hil ala bizi!

## ERRAIETAKO SUGEA

Urte hartan Larraun Zaharrera ere heldu zen udaberria. Landa zabalei berdetasun tentagarria zerien. Aurreko menditik begiratuz ikusten zen nolako belar olatuak jasotzen zituen iparrak, behetik goruntz. Etxe gainean, haize eta eguzki begiko barrutian, dozena bat behi, batzuk etzanik hausnarrean, beste batzuk elkarri hazka eta konformagaitzen bat edo beste hesiari adarka. Zortzi txahal bizkor ikuiluan, jateko eta gizentzeko baino solte eta salto egiteko gogotsuago. Landa baten erdi inguruan osaba-ilobak. Mutila gerriz gora larru hutsik, segan jo eta su, hau duk sasoia, olinpiadan bezain afantsu. Osaba atzetik, hark ebaki ahala bilduz eta Jainkoak jakin nolako kontuak esanez. Zaldi lerdena alboan lerari lotua, noiz tiratu agintzeko zain. Belardi gorenean bi txakur, osabarena eta Jonenekoa, belartzarik belartza elkarri segika. Noiznahi ez duk jostatzeko eta nahi hainbat belar zapaltzeko aukerarik izaten. Larraun Zahar behinolako izanera itzuli zen. Bartelek lehenengotan toleratu bakarrik egin zuen, mutila hain ausart ikusirik. Okerrenean ere entretenigarri polita behintzat. Baina martxoaren azkenerako, etxaldea garbi eta landa goldatuak belar berria hartzeko prest ikusi zituenean, bera ere arras animatu zen. Tenta-

garri izan ere, hordigarri hobeto, Larraunen antxinako mugimendua ikustea. Bestalde osoki etsi gabe zegoen oraindik.

— Bartel Larraunek zer esan asko eman behar dik oraindik. Bai horixe!

Jon ez zen motelago ari. Hura erremangua! Uda batean munduaz jabetzea ebatzi zuela zirudien. Zergatik ez daiteke gizonik berraltxa? Apaizgaitegian kirkirak edukitzeko ere autonomiarik utzi ez zioten batentzat, etengabeko orgasmoa zen hainbeste lur eta abere erabili ahal izatea.

Herritarrek pozik elekatzen zituzten Larraungo berriak. Larraungo pizkundearen espektazioz zeuden denak, lehenago estimazioa hainbat erruki baitzioten azken aldian Barteli, zein hondatuegi baitzegoen inoren bekaitzik sor erazteko. Jende artera agertzean, Jonek ba zekien zer galdetuko zioten.

— Zer moduz osaba? Animoso al zebilek? Bartelen arazoa herri osoak beregandu zuela zirudien, Jonengan delagaturik. Batzuk, ordea, susmo txarra hartzen zioten martxa hari.

— Ez zekiat. Hobe oker banengo, baina gizona ez duk igogailua, behera eta gora ibiltzeko.

— Apaizgai joan beharrean —esaten zion Bartelek ilobari—, nirekin tratulari hasi bahintz, beste modutan geundekean gaur. Azkenean ere neronengana jo behar.

Jonek ez zion garrantzirik ematen faktoreen ordenu aldatze honi. Batera nahiz bestera, burutzea zen behinena. Bartelek ez zezakeen ugazabatasunik gal. Lana mutilak egin arren, zuzendaritza berak zeraman. Zer balio dik lanak, bururik ez bada? Gainera iloba gazteari lanean irakatsi. Lehenago ere pentsatu behar zian ez zuela osaba bezalako maisurik aurkituko. Bitsetan zebilen eguneko lan

araua planifikatuz eta beharreko aginduak emanez. Hara non behinolako jauntasuna berratzeman zuen! Are gehiago, zeren orduan mutiko bati agintzen baitzion, orain ordea mutilik sasoikoenari, karreraduna gainera. Bartelen osasunak hobekuntza harrigarriak izan zituen. Benetako hobekuntza ala euforiak eragindako uste hutsa?

Uztailaren batean eskutiz bat ekarri zion Jonek. Ofizial antza zeukan. Bartelek muturralde garratza jarri zuen.

— Behar ez denen bat gogoratu duk orain ere nitaz.

— Ea alaba ederren batek, zure martxa berriaz liluraturik, mandatua bidaltzen dizun.

— Alaba ederraren putakumeak! —hots egin zuen Bartelek, eskutitza irekitzean. Zeru sapaira begirada fulminantea jaurtirik, erantsi zuen: —Eskutiz hau ez nian hartu behar, otsaileko gau hartan hain oilo portatu ez bagina.

Idazkariaren ezkutitza zen. Biharamonean udaletxera azaltzeko, eguerdiko hamabietatik ordu bietara. Amaren testamentua, transferentzia, izkribau lanak, bahimendua, kontua, deskontua eta abar, auzia zen hainbat mila hogerlekoren zorrean zegoela oraindik Hazienda rekin.

— Orain ez duk esango —bukatzen zen eskutitza — insolbentea haizenik.

— Okerragorik espero nuen zure aurpegikeratik —esan zuen Jonek—.

— Zer dira horiek guk daramagun abiadarako? —belardi zabalak eta hamabi behiak seinalatuz—. Garbitu

behingoz zor madarikatuok eta kito.

— Nik ez zioat alu horri zorrik, bera garbitzea baizik.

— Ez duzu, ordea, zor gorabehera, legearena baizik, eta beraz indarrarena. Alperrik duzu tematzea. —Jon desesperaturik zebilen osaba baretzeko argudio bila—. Gainera zer arraio! Idazkari sazkar bati begira egon behar al dugu? Bizirik badago, geuri zor digu. Garbitzerik erabakitzen ez dugun artean, txakurrari egiten zaiona, mahaipean eman, mahai gainekorik harrapa ez dezan. Txakurrari zaion maitasunik gabe, jakina.

Ez kostatu gabe, baina azkenerako adostu ziren. Herrira joango zen eta kontuak betiko garbiturik itzuliko. Idazkaria ikustea baino nahiago zukeen aker nagusiari uzkia mihizkatzea ere, baina ez zegoen beste erremediorik. Gauez, oherakoan, inoiz ez bezalako larritasunak eman zion Barteli. Gero sabelean sugea deskiribilduz, luzatuz eta erraietan zehar lerratuz sentitu zuen. Mugimendu leunak, kilikorrak lehenengotan, baina eskuz kanpotik igortzi ahala, barruko sugea bizkortzen zihoan.

Larritasunak mina ekarri zuen, min sorra, baina gero eta zorrotzagoa. Sugeak aurrera segitzen zuen. Izpia atera eta barru guztia miatzen hasi zela zirudien, sastada emateko unearen bila. Ohetik jaiki eta leiho kontrara kokatu zen, laster bere baitan hasiko zen minaren eta desesperazioaren arteko burrukari eustera prestatuz. Azkenez sugeak miaketa bukatu zuen eta sast!

Non? Barruan nonbait. Makilaz jotako ira gaztea bezala okertu zitzaion gerria. Gero betikoa. Behean iraulkatu, ohean etzan, leihotik atera eta atetik leihora arrastatu, ilargia aurrez aurre erreparatu, hura madarikatu eta azkenean gorputz erdi leihotik kanpora zintzilik, behazuna eta odola oka egin, ordurako azpian zain zegoen Txikiren ahora. Gau hartako alde bakarra zen ez zegoela ama zaharrik,

azpiko gelatik «Zertan ari haiz, Bartel?» hots egitekorik. Bakarrik zegoen etxetzar hartan, gelan sar-irtenka zebilen saguxarra laguntzat jo ezik. Suge madarikatua! Doilorra!

Lau hiletan lo egona, baina ez hila. Lo ere ez, mementu juxtuaren zain baizik. Bartelen martxa berriaren eta afanen zelatan egona, traidorea halakoa. Idazkariaren eskutitzak mugi erazi zuen berriro. Bai! Biak elkar harturik zeuden. Edo biak bat ziren. Suge hura idazkariaren izpiritua zen. Ganibetaz sabela ireki, sugea atera eta zati-zati egiteko gogoak eman zion. Ganibetak balio ez, ordea, izpiritu zitalak zehatzeko. Berea zen errua. Hainbeste urtetako esperientziaren ondoren, nola sinetsi zuen, inozo alaenak, sugea hilik zegokeela?

Goizean goiz, beti bezain afantsu zihoan Jon Larraun Berritik Larraun Zaharrera. Aspalditik zerabilen txahalentzat kanpoan barrutitxo bat egiteko asmoa.

— Zergatik ez diate txahalek ere eguzkiaz eta askatasunaz gozatu behar?

Nolako sustoa, ordea, Larraun Zaharrera heltzean, lau gizon haundi ikuilutik abereak ateratzen aurkitu zituenean.

— Zer gertatzen da hemen?

— Lehenago gertatu behar zuena! —erantzun zuen Bartelek.

Haren aboskeran ez zen amorekortasun izpirik ageri. Idazkariaren apokeriren bat? Bai zera! Idazkaririk ez zuen

ikusi ere egin. Bi egun aurreko gau madarikatu hartan ebatzi bezala, azienda guztia saldu zuen kolpera, bere lehengo behitxoa izan ezik. Jonen asmoak eta afanak haizeak zeramatzan. Eguzkitara ateratzekotan zetorren txahalak hiltegira zihoazen. Erosleak txekea sinatu zion, Bartelek ilobari ordaintzeko agindua. Hirurehun eta hogeita bost mila pezeta. Hirurehun mila Jonek, ganadua erostean, nondibait maileguz lortuak. Gainerako bost mila hogerlekoak mutilaren alokairua omen ziren. Jon sutan jarri zen.

— Bost mila hogerleko mokordo bakarrik al da hiru hiletan hogei bururi atera diogun hobari guztia?

— Aizak, gazte! —ihardetsi zuen erosle sabel haundiak—. Nik ugazabarekin egin diat tratua. Zuen artean zerik badago, hor konpon.

Erosle hari ez zitzaion inoiz halako tratu emankorrik gertatu. Txokorrari gustora tiratzen zion goizerik. Zera edo bera zela, irabazi mardula zeraman Larraundik. Hala ere, profesionalki jakin erazi zion Joni:

— Ez pentsa, gazte, hobariak zintz eginda ateratzen direnik.

Txekea kobratu eta hirurehun mila pezetak bihurtu ondoren, hogeita bost mila pezetak osabari entregatzera joan zen Jon. Ama ere eritzi berekoa zen.

— Ea bestela bere bizkarretik bizi garela esateari ematen dion.

Bartelek ez zuen inola ere diru hura hartu nahi. Hizkamizka luzearen ondoren, Jonek kolkoan sartu zizkion, berak ere ez zituela behar eta.

— Hik behar ez badituk, nik gorroto ditiat! —esanez, krisk krask, hogeita bost milako berdeak mila zati egin zituen Bartelek.

Jonek muturrak hautsiko zizkion, bere ukabilei kon-

trario gogorragoa zegokiela pentsatu ez balu.

Bartel bere buruaz amorraturik zegoen, urte erdi iloba mukizu baten pentsuan eman zuelako. Nork eta berak, zortzi urte luze inor gabe, bere gisan,bere buruarekin bakarrik iragan zituenak! Nork eta bere aislamendu zarratua denen kontra, bere buruaren kontra ere bai, defendatu zuenak! Jendea, ahaide eta ez ahaide, etsirik zegoen Bartelez. Hara, ordea, berak bere burua subastatu zuela. Hona ni jaunak! Amore ematen dut! Har nazazue berriro zuetartzat! Zenbat eskaintzen duzue nire buruagatik? Eta jendeak, nola ez, irribarre barkakorrez esan zuen: kostatu zaiok, baina seneratu duk noizbait. Eta gupida morbosoz bukatu: hobe duk horrela. Gizona elkarrekin bizitzeko duk.

Zergatik, ordea? Ez al zuen berak arras besterik erakutsi zortzi urtetan? Baina zer erakutsi zuen, amore eman baitzuen? Kapitulazio lotsagarria. Lotsagarria, bai! Ez zegoen beste hitzik. Tigrea amaraunean trabatzea baino lotsagarriagoa.

Joni gorrotoa hartu zion. Ez zegoen dudarik bere bizkarretik probetxatzera etorri zela. Bi urtetan diru ederrak egin eta gero osaba Larraun Berrira bizitzera eraman. Zer zioat, ordea, Larraun Berrira? Osabarenak laster egingo zuela uste ziaten horiek. Gabiltzan listo, ea amonari baino herentzia gizenagorik utz erazten diogun. Eta, faltsuak halakoak, bost mila hogerlekoak ere eman egin nahi eskuzabalki, osaba koitaduari karitate egitearren! Baina osa-

ba koitaduak burua aurreruntz zeukak oraindik. Bai, alafede!

Barteli ez zizkion ondorio hauek tontotasunak edo zitalkeriak atera erazi, kontserbazio sen hutsak baizik. Bere bizkarretik probetxatzera izan ezik, laguntzera etorri zitzaiola onartu behar, beraz, beharrean zegoela eta, beraz, errukarri. Hori aitortzea, ordea, bere buruaz desertatzea izango zen.

Zorionez, ez zeukan bere burua madarikatu beharrik, zoriondu baizik. Jakina! Sakatu ere egundokoa sakatu zion mutilari. Plan guztia onartu, hasi eta abiadura hordigarria zeramatenean, jokoa biribil ateratzeko ustez, mutila afantsuen zebilenean, brast dena saldu eta kito. Horrelakorik ez zian listokume horrek espero. Behetik gorainoko inurriketa atsegina sentitu zuen. Nolako osaba zeukala uste zian, ba, mutilkondo horrek?

Ahaideez eta herritarrez ere orobat esan zitekeen. Hura marroa sartu ziena! Bartel normaldu zelako, elkarri zorionka eta Jainkoari esker emanka ari zirela, haurrei ere Bartelen konbertsioa ikaspidetzat azaltzen hasiak zirela, brast dena saldu eta kito. Hura muturrerakoa eman ziena! Troiako zaldiarena zozokeria hutsa zuan honen aldean. Jendeak, jakina, mila zurigarri aurkituko zion bere engainuari. Gizagaixoa, errukarria eta nork jakin nolako ezizen minkulinez deituko zioten berriro, egiazko izenez deitzeko gauza ez zirelako. Eta egia zen, aitortu nahi bazuten, Bartel Larraunek inork ez bezalako potroak zeuzkala, indar guztia kontserbaturik gainera. Ez ninduan alperrik mutilzahar gelditu. Mahaipeko garrafoiari arnasak eman ahaleko zurruta egin zion. Korroskada luze batez, garrafoi biluzia bi eskuekin jaso eta esan zion:

— Lehen bezala, aurreruntzean ere, hi izango haiz nire sozio bakarra.

## LASUNDA

Lasunda Mendibekok berrogeita lau urte zituen, nahiz eta gehiago eman. Huraxe zen Jon gehien harritzen eta era batera deskontzertatzen zuen emakumea. Kasu bakarra, nahiz eta gero anitz kasu bakar zegoela aurkitu, gehienak ez esatearren. Lasunda, ordea, bakarretan ere bakartzat zeukan. Haurretan, txiki txikitarik, maiz jotzen zuen Mendibera. Maizago ez bazen, zakurrak zeukan errua. Mendiben ohitura zen zakur haundia eta gaiztoa edukitzea. Loturik zeukaten beti, baina hurretik pasatzean, katea hausteko posibilitate hutsak ere dardara eragiten zion mutikoari. Zakurraren oztopo hartaz aparte, dena zen atsegina Mendiben. Guztietariko zuhaitzak eta mota bakoitzetik ere submota asko. Zuhaitzik zuhaitz ibiltzen eta nahi hainbat jaten uzten zioten, adarrik ez apurtzeko baldintzaz, jakina. Animalitan berriz, ba zen han aukerarik. Kuiak gustatzen zitzaizkion gehien. Aldizka, berak inoiz ikusi gabeak ere edukitzen zituzten. Hala indioilar harro hura eta batez ere azkonarkumea, zeinen lagun egitekotan, berari emango ziotela agindu baitzioten. Mutikoa alperrik saiatu zen pizti harekin. Erpeen ordez, hortzak erakuts eraztea bakarrik lortu zuen. Erremintak ere gustu eta tamainu guztietakoak zeuden Mendiben. Hura goza-

mena, nahi zituenak erabiltzen eta bere lantxoak egiten uzten ziotenean.

Jonentzat Lasunda zen Mendibeko erakarmen nagusia. Jai arratsaldeetan mila komedia egiten zuen harekin. Batez ere etxe alboko harizpean, garbitoki freskoaren ondoan, ipuin kontatzen hasten zitzaionean, hura mutikoaren poza.

— Itxi ezak aho hori! —agindu behar izaten zion Lasundak—, entzutea belarriena duk eta.

Ipuinik gehienak Lasundak berak asmatuak ziren, entzule txikiaren arabera. Honek ere ba zekien aldrebeskeriak asmatzen. Behin esan zion:

— Lasunda! Bi txantxangorri entzun ditut, habia non egin eztabaidan eta azkenean zure ohapean erabaki dute eta gauez pik egingo dizute.

— Txantxangorriak ohapean? Neuk emango zizkieat lotsak horiei!

Lasunda eskilaretan gora abiatzen zenean, mutikoak azpitik algaraka:

— Inozente! Inozente!

Mendibetik kolkoa bete kontu etxeratzen zuen. Txiki txikitatik, ordea, gauza bat egiten zitzaion erraro Lasundarengan eta behin zapla bota zion:

— Aizu, Lasunda. Zu zergatik ez zara jaietan inoratzen, beste neskak bezala?

— Besteak senargaitara joaten dituk, baina niri trumoiak ekarriko zidak haritz honexen puntara.

— Trumoiak? —Ikustekoa zen nola begiratzen zion mutikoak

— Hogeita hamargarren tximista harrapa dezadanean, harexen hurrengo trumoiak ekarriko dik.

— Tximistak harrapatu? Non gordetzen dituzu, ba?

— Bata haritz marroan, bestea teilapean. Hogeita ha-

mairugarrena kolkoan erabiliko diat, ezkondu eta lehenengo haurra ekarri arte.

— Tximistan kolkoan?

Mutikoaren harridurak ez zeukan azkenik. Tximista, kolkoa, haritza, senargaia, ezkontza, trumoia... Egiaren eta asmazioaren arteko mugak bereztera heldu gabe oraindik, sinestearen eta ez sinestearen artean dilindan geratu zen, zalantzak liluramen gehiago ematen zielarik Lasundaren esanei.

Ba zuen Lasundak beste alderdirik franko, mutikoak ia miresmen mitikoa har zezaion. Esku lanetan ezin trebeagoa zen. Jostun abila eta asmotsua. Anitz neska etortzen zitzaion ikasle etxera. Joni asko gustatzen zitzaizkion jos tresna bitxiak zeuzken. Erloju konpontzailea zen eta ez edonolakoa. Lorazaina, ehiztaria, harotza, erizaina. Zer ez zen hura? Eta dena bere kabuz ikasia. Eskolara gutxi joana izan arren, bere kontura ikasi zuen anitz, matematikak zituelarik gogokoen. Jon txikiak, Jainkoa orojakintsua zela esaten hasi zitzaizkionean, Lasundarekin egiten zuen konparazioa. Honi ezer kendu nahi ez eta hari ezer kendu behar ez, biak parean jarri eta kito. Trebetasun guzti hauek gutxi baziren, sexu sendoko edozein bezain indartsua zen. Gizon bakarrak bortxa zezan bildurrik ez zeukala esan ohi zuen.

Jon nagusitu zenerako, Lasunda gizartetik arras bakarturik zegoen, lan hutsari emana. Ilargidun gauak lanerako ziren. Emakume bati dagozkion eta berak ere gazteagotan praktikatzen zituen zaletasun eta apainduri guztiak pikutara bota zituen. Lana zen aurren, lana zen hurren. Gauzek lanari buruz zeukaten zentzurik. Modatu baino askoz lehenago, galtzadun emakume bakarra bera zen, lanerako egokiago zela eta. Animaliz inguraturik bizi zen. Lezondotarrek ziotenez, bera ere ez omen zen emakumea,

basemea baizik. Bost axola hari jendearen esanak, gizarteari arbuio olinpikoa baitzion. Ezkontzerik ez zuen inoiz pentsatu. Bartelekiko pasadizoaz aparte, behin egin zituen joan-etorri batzuk mutil batekin. Inguruetan laster zabaldu zen Lasunda ezkontzekotan zebilela. Ordua zuan! Baina laster bukatu ziren joan-etorriak. Jendeartean aspertu egin zen. Besteek dibertsioa zeritzatenari, hark zozokeri hutsa, denbora galtzea erizten zion. Denborak honela galtzeko baino gehaigo balio dik. Zirkura buelta bat egitera gonbidatu zuten, beti lanean ari gabe. Lasundak behien eta txahalen bizkarrak igortzitzea bezalako zirkurik ez zela erantzun zien.

Neba bat zeukan, subnormal samarra, tigremeak bezain basaki defenditzen zuena. Huraxe zen Lasundaren gizarte guztia.

Jon oporretan maiz gertatzen zen Lasundarekin. Sokratesen pentsamentuak orbelak iruditzen zitzaizkion emakume erdi basati haren ondoan. — Zergatik duk zuen bizikera nirea baino duinagoa? Dibertitzen zaretelako? Elkar jan beharrik zabiltzatelako? Zergatik?

— Ez dakit, ba —ziotsan Jonek—. Ba dirudi pertsonok elkarrekin bizitzeko garela.

— Horixe duk hain zuzen probatzeko dagoena, edo probaturik dagoena, baina alderantziz—. Lasundak barre arbuiozkoak egiten zituen. Herriko hainbeste kasu aipatu ondoren, berriro galdetzen zuen: —Horri deitzen al diok elkarrekin bizitzea?

— Baina ba dira elkar maite duten pertsonak ere.

— Nik animaliak maitatzea erabaki diat. —Beste erresuma batetik mintzatuz bezala, bukatu zuen: —Nik animaliak hainbat pertsonek elkar maite dezazuenean, abisatu.

Behi, asto, txerri, ahuntz, bildots, txakur... denak

nahastean zebiltzan. Elkarrekin berezko etsaigoa duten animaliak ere komunitatean bizi ziren Mendiben.

— Ea behiren batek txerria adarkatzen dizun.

— Gure artean ez duk pertsonengan bezala.

— «Gure artean» honek egundoko barregura eman zion Joni.

Karreradunei, «eskolastikoak» berak esaten zuenez, begizko instintiboa zien. Joni ere hartzen hasirik zegoen.

— Pentsa ezak ikasten duzuen letra bakoitzeko, izerdi tanta bana ostutzen duzuela.

Gizateriak mendez mende eta dudatu ere ezinekotzat aitortzen dituen «gizon haundiak» ttu eginda likidatzen zituen. Behin Jonen apaizgaitasuna harturik, burla aire zorrotzez bota zion:

— Hor duzue Erromako aita Santua, «gure aita» bera baino gurenagoa. Eguzkiak mundu erdi bakarrik argi zezakek, hark, ordea, mundu osoa.

— Ez zarela, beraz, aita santuarekin bat.

— Mendibe eta Erroma ez diren bezala.

Lasundaren bizikeraren anitz arrazoi edo desarrazoitarik nagusia hautatzekotan, Mendiben ere bizimodua atera beharraren patua titiaz batera edoskitzen zela esan behar. Lasundak jakinez eta bortizki beregandu zuen patu hura. Baina gainditzea lortutakoan, ez zien bizimoduko legeei ihes egin, aitzitik ordea, doble amorruz saiatu zen hainbeste kostatua gehiago menderatzen, ezaldian lurra jaten ikasirik, baialdirako ere bizio patologikoa biltzen duenak bezala. Lezondotar guztiek edoski zuten patu bera. Ez zegoen nekazaririk ez langilerik ez arrantzalerik ez inor, «hamaika bizi duk gure bizkarretik» esan gabekorik. Gehienek, ordea, zer egingo dugu-ka, etsipenari eman zioten bezala, Lasunda eta Bartel setatiak atera ziren. Bakoitzak bere eboluzio eta histori bereziz, piztiek barrutiari beza-

lako gaitzia hartu zioten biek gizarteari.

Joni min haundia ematen zion berak hainbeste nekez eta afanez martxan jarritako belardiak alperrik galtzen ikusteak. Osabari lurrak bi urtetarako errentan eskatzea pentsatu zuen.

— Berandutxo hator. Saldurik zeuzkaat. —Gezur galanta bota zuen Bartelek, ez baitzuen halakorik pentsatu ere. Baina Jon izorratu nahiak zapla asma erazi zion gezurra.

— Nori saldu dizkiozu, ba? Lasunda Mendibekori?

— Bai argia haizela! Nola igarri duk?

Gezur galanta berriro ere. Baina Barteli, tratulari argia izaki, Lasundaren izena entzunez batera, baiezkoa bururatu zitzaion. Buruera jeniala, pentsatu zuen. Gainera Jonen burlazko galdekerak berak adierazten zuen Lasundari saltzeak amorru gehiago emango ziola.

— Ez zara batere tentela gero! Ondo konpon. Ah! Eta badakizu Lasunda gai eta birjina dagoela oraindik. Titulo tentagarriak, alajaina.

— Hori duk pistak ematea! —esan zuen Bartelek barre maltzurrez.

Arrasaldean bertan joan zitzaion Bartel Lasundari, belardiak eskaintzera. Dirurik izendatu ere ez. Hori baino duinago agertu zuen bere burua. Diruarena egingo dinagu. Bera ez zihoan premiak eraginik, Lasundarentzat aukera ona zitekeela pentsaturik baizik. Tratu lasaiak egiteko moduan zegoela erakutsi nahi zuen edo sinetsi nahi zuen.

Klausula guztiak zehazki izendatzeak ez beste txukuntasun bat ematen zuen «konponduko gara» esanik hurrengorako uzteak.

Jonek egunero bere etxe albotik anitz gurkada pasatzen ikusten zuen. Ba zeramaten aidarik eta eupadarik. Faraonen orgateriak baino eskandalu gehiago ateratzen zuten. Lasundaren neba subnormal samar Timok batez ere egundoko uhuketari ematen zion, Larraun Berrira hurreratzean. Bistan zegoen Bartel zela haren zirikatzaile, bai baitzekien bere harreman berrien ostentazio hark gibelak erreko zizkiela Larraun Berrikoei. Timo bitsetan zebilen, Akelarre osoari lotsak ematea baino balentria haundiagorik egiten zuelakoan. Inork ez ihardestean, beroago eta harroago jartzen zen.

— Irten, kapaz bazarete! —hots egiten zuen, akuilua dantzatuz eta etxea berak kikil erazitako munstroz beterik iruditsuz.

Jonen ama senetik ateratzen zuten probakazio suntzun haiek.

— Ez ernegatu, ama —esaten zion Jonek—. Horiek horixe nahi dizute.

Bartelen baitan ba zebilen beste prozesiorik. Urdaileko gaitzak ez zion amorerik ematen. Gaurik gehienak gaubela larriak zitzaizkion. Bakartadearen muinean, zomorro bat ernetzen hasi zen: desesperazioa. Eskerrak ardoak zuzper erazten zuela. Zuzperraldi batean, burutapen jeniala ekarri zioten Jonen hitzek:

— Ba dakizu Lasunda gai eta birjina dagoela.

— Madarikatua! —hots egin zuen berekiko—. Bartel ez dela inor? Laster jakingo diagu.

Lasunda bezalako basemea menderatzeak bizitzarik okerrena ere sobera justifikatzen zuen.

— Hire bi tituluok gaizki behar dinate gaur.

Garrafoi biluziari zurrut luzeak egin eta ba zihoan Mendiberuntz. Bidean estrategia antolatu zuen. Nola hasi, zer esan, nola pixkanaka adierazi, edo hobeki, nola pixkanaka zertu, zeren burua gorputzaren aurretik ohartzen ba zen, frakasu nabarmena gerta baitzitekeen.

— Nola ez zaik gaur arte bururatu?

Belar tratua zehaztu gabe uztea ere alde zetorren, hartzedun baitzegoen. Hainbeste gurkada guriren ordez, ez zen goitik eskatzea.

Bartelek Mendiben afaldu zuen, azken aldian maiz egiten zuen bezala. Gau hartan besteetan baino arretazago prestatu zuen afaria Lasundak, edo hala iruditu zitzaion Barteli. Lasundak ere asmazio berdinak ote zerabiltzan, ba? Afal ostean briskaldi bat.

— Pentsatu baino hobeki zihoak gauza.

Pattarra aipatu zuen eta Lasundak berehalaxe atera. Bartelen estrategian zer bakarra zegoen prebenitu gabea, Timoren presentzia, alegia. Hura ohera bidali ezik, ez zegoen zer eginik. Timo edanago eta animosoago zihoan eta, jakina, gero eta oherako itxura gutxiago, tentelak halakoak.

— Belarrihaundi batek dena hondatzea besterik ez diat behar!

Gauerdia eta Timo han oraindik. Haitzurkada bat gustora emango zion Bartelek. Noizbait aldegin zuen, hala ere.

— Ba ninan gogoa, Lasunda, biok bakarri geratzeko —esan zuen Bartelek—. Edan dezagun beste kopatxo bana eta gauden lasai. Ordubete gora behera, eguzkia betiko lekutik aterako dun bihar ere.

— Ez zekiat zer egin behar dugun hemen beste ordubetean.

— Zer egin? Ba, esaterako...(emaizkidan hitz egokiak, lamina traidorea!) neska-mutilak garela pentsatu eta... Zer

egingo dinagu, ba? Elkarrekin egon. Ez al gaitun, ba, neska-mutilak?

— Antxina zuan hori, Bartel. Berandutxo habil —esan zuen Lasundak, barre zakarrez.

— Beranduak ba din soluziorik. Hogei urte gazteagoak garela pentsatu eta aurrera.

— Pentsa dezagun. Eta orain zer?

Bartelek huraxe zela unea pentsatu zuen.

— Zer? Hauxe!

Bere galaimen guztiak atereaz, zirri batzuk egiten hasi zitzaion.

— Arraioa! Bihotza ziltzen eta eskuak...?

— Zil nahiz hil, Lasunda! Neska-mutilak ez bagaitun ere, ar-emeak gaitun behintzat.

— Ah, bai? —Tigremeak bezala saltatu zuen Lasundak—. Ar-emeak, eh?

Esku bata paparretik eta bestea bragetatik, airean uluka atera zuen gure gizona.

— Ai! Min egiten didan!

— Behin joko eta berean okerreko lekura joko huen, ba?

— Aaai!

— Titi puntak zeuzkaat nik hire potroak hainbatekoak! —bragetako eskua bortxaz estutuz.

— Ai! Aaai! Aaaaai!

— Abelkumea egiteko balitz ere! Baina gizakumea?

— Mesedez! Utz nazan mesedez!

— Berehalaxe! Blast! Hortxe freskatuko zaizkik berotasunak. —Bartelen buruak putzu hondoko basatza jo zuen—. Horrek sosegatzen ez bahau, asteme merke bat erostea daukak!

Bartel blai-blai atera zen putzutik. Hegalean erdi makurrik, ura zara-zara zerion.

— Sexu ahula hau baldin bada, zer ote duk sendoa?

Mendibetik Larraunera aldasgora erripea zegoen. Bartelek ozta-ozta arrastatzen zuen bere gorputza, ziria sarturiko bareak bezala, biziaren adurra bidean galduz. Frakasu lotsagarri haren errua bere buruari ez, baina estrategiako hutsen bati ezarri nahiz, ar-eme kontuak sumin erazi zuela Lasunda pentsatu zuen.

— Gauza hain poliki zihoala, halako zakarkeririk botatzea ere! Timo tentela lehenago oheratu balitz! Baina zer? Biok bakarrik gelditu ginenerako, Lasunda logurak erretzen baitzegoen. Logura duk maitasunaren lagunik etsaiena!

Ea zergatik ez zuen putetxera jo, halako trantze arriskutsuan sartu beharrean? Putetxean, ordea, diruaren balioa probatuko zuen, ez bere buruarena. Astemeak ere ez zion ezer konpontzen, gizonaren hiru laurdeneko animalitasuna bakarrik proba bait zezakeen harekin. Bartelek beste giza laurdenaren balioa probatu nahi zuen. Kontsolamendu bat aurkitu zuen, baseme harekin beste edonork ere berdin frakasatuko zuela.

—Kontuak kontu —aitortu zion txakurrari etxeratzean—, behin behintzat, zakarkitxo bazen ere, emakume baten besoetan ibilitako ugazaba daukan.

## FIDEL GAIZTOREN AGINTALDIA

Abuztuaren batean, berri harrigarriak asaldatu zuen Lezondoko herria.

— Fidel Gaizto agertu duk Larraunen!

Mokadutik mokadura, mahai guztietako hautua zen.

— Nor da hori? —galdetzen zuten haurrek.

— Gizon bizartsu bat —erantzuten zieten.

Aieteko mutikoak mahaipeko Bixerri begiratu zion. Txakurrak zeinu batzuk egin zizkion, zeozer erortzen uzteko adieraziz. Mutikoak, probisionalki behintzat, ba zeukan gizon bizartsuaren irudia. Haurren artean egungotasun haundia hartu zuen gizon bizartsuak, bai eta Bixer izeneko txakurrek ere. Gizon ona, gizon baketsua eta abar ez da nola iruditu ere jakiten. Gizon bizartsua, ordea, beste gabe itsatsi zen entzule txikien gogoan.

— Noiz igongo gaituk Larraunera, gizon bizartsua ezagutzera?

— Datorren igandean, eguerdi osteko hiruretan, denok pilotaleku ostean.

— Gizon bizartsua ala bizar gizontsua esan duk?

— Berdin dun, neska. Bertan ikusiko dinagu.

Barteli bizikera berria itzel zihoakion. Aspertu zen bizitza besteenganako erresumin morbosoan finkatzen.

Aspertu baino etsi hobeki, ispiluko bere irudiaren kontra oldartzen den txakurra bezala. Behin, komoda zaharreko ate ispiluan, bere tankera osorik ikusi zuen.

— Ez hago, ez, heure buruaz maitemintzeko moduan.

Baina desesperazioari eman beharrean, barreari eman zion. Izan ere, hirurehun urtetako etxetzar hartan, bipiaren kirrizkada etengabea ari zen gela zahar hartan, berramonak arreoan ekarritako komoda astuneko ispilu izurtuaren aurrean, hamabiak jarraian jotzeko adorerik ez zuen —norentzat joko zituen, ba? —erloju tramankulu haren alboan, etxe piztia guztiek beren akelarretzat zerabilten ganbara haren azpian, amonaren oheari lizuna eta goroldioa zerion gela haren gainean, giza itxuratik hezur-azalak eta urdail eroria besterik gelditzen ez zitzaion gizon hari Izadiko Erregea, Kosmoaren Gailurra eta halako fanfarreriak deitzea zirkuzkoa zen benetan. Bartelek gustora barre egin zuen. Nahi zuenean, ba zeukan nora begiratu. Soinean zeraman txistea.

— Baina barre hutsetik ez duk gizonik bizi. Zertatik bizi behar duk orain?

Lasundarena ondo bukatu balitz, nork jakin zer gertatuko zen. Egintza haren errentaz edo berriaren esperantzaz, entretenigarri luzea zukeen agian. Orain, ordea!

— Kooooino! Zertarako duk bizarra? Hi ez haiz Bartel, Fidel Gaizto baizik! Honelako kolperik ez zian inork espero!

Garai haietan Kubako berriak modan zeuden Euskal Herrian. Fidel Castro oso aipatua zen, hainbat euskaldunek zerikusia izan baitzuten hango gorabeherekin. Batez ere Castrok apaizak eta fraileak ere kainabera ebakitzen ipini zituela, edo hori egin nahi ez zutenak honuntz bidali zituela, oso gustora marmarikatzen zen euskaldunen artean, eliz gizonak egunean ordu erdiko lanez —eta bera

zurrut eta guzti— bizi zirela esaten baitzuten.

— Hemen ere ba zegok horren premia! —esaten zion lehenago Bartelek iloba apaizgaiari.

Baserrietan irratiak ugaritzea ere garai haietakoa izan zen gutxi gora behera, batez ere pilazkoak. Bartelek txiki bat erosi zuen eta Kubako berriak entzuteagatik bereziki erosi zuela esaten zuen. Behizain ari zela, bere irratia golkoan zuela ibiltzen zen beti, musikak eta kantak topera ipinirik.

Ez dakigu Castro-tik Gaizto-rako aldakuntza berak hasia ala lezondotarrek nahasia eta gero berak ere hala ikasia zen. Lezondo guztiak eta berak ere Fidel Gaizto esaten zuen behintzat. Astebetean inguruetako gizonik ahotuena bilakatu zen. Bizitzeko, jaioz gainera, arrazoiren bat behar denez gero, estridentzian aurkitu zuen Bartelek. Eta bai posibilitate ugariak zituela egoera berriak! Errealitatea beti da berri, ikusmena ez balitz zaharra. Aski da simetria konbentzionalean metro erdi jiratzea, dena kontraste gerta dadin. Eguzkitik eguzkira, egunari bizipidea atera ezinez ziharduten lezondotarrei, bat batean Fidel Gaizto agertzeak eta egundoko berbaldiak botatzen hasteak simetria guztiak husten zizkien.

— Nora hoa, senarra?

— Tabernara, emaztea?

— Egunero tabernara?

— Fidel Gaiztok hitz egiten din.

— Horrek emango ziguk jaten guri!

— Ez gaitun jateko bakarrik jaio.

— Zertarako, ba?

— Tabernan entzungo dun. Goazen biok, andrea.

— Eta haurrak?

— Datozela horiek ere!

**Goazen tabernara**
**Ardoaz batera**
**Biziaren mana**
**berria edatera.**
**Ez dela, ba dela**
**Fidel Gaizto berbera**
**goazen tabernara**
**biziko bagara.**

Askingo tabernan gauero zen mitina. Bartelek mostradore gainetik ekiten zion:

— Aurreruntzean, jaunak, langileon lan bakarra egiten ez dutenei eragitea izango da.

— Hori, hori!

— Eta ardorik onenak edatea.

— Hori batez ere!

— Josepa! —hots egiten zion tabernandreari—. Atera daukanan ardorik onena.

— Hauxe duk guri komeni zaigun programa, ez Pello?

— Edan, jaunak, bildur gabe! Abstemioekin eta neutroekin ez dago gizarterik berritzerik.

— Hori, hori! —entzuten zen entzulegoan—. Ardo zaharrak berritzen dik gizona, bai eta gure atsoa ere.

— Mundua bi sailetan banaturik dago: lapurrak eta lapurrak.

— Ja, ja, ja! Zer alde zegok ba, lapurretatik lapurretara?

— Tenteltzarra! Bizi guztia lapurretan eginda, hori ere ez dakik? Haundietatik txikietara dagoena, gizona!

— Ah! Mozkorretik mozkorrera bezala orduan.

— Lapur batzuk daude, gehienak hobeki, gehien osturik ere, tokatzen zaienaren azpitik gelditzen direnak.

— Defizita esaten zaiok horri.

— Horixe esan nahi nian. Zeozertarako balio dik hire karrerak —esan zion ikasle bati. Eta berehala herriko arlotetzat zegoen bati: —Hi, Moxal! Barka, baina denok zekiagu lapurra haizela. Zenbat ostu dukala jotzen duk heure bizitza guztian?

— Denak batera asko, baina apurka ezer ere ez —erantzun zuen Moxalek.

— Batera ere zenbat? Lau miloi?

— Lau miloi? Miloiak usinak direla uste al duk?

— Horixe da hain zuzen nik diodana, jaunak. Zeren badira beste lapur batzuk, gutxien osturik ere, ehun miloitatik beheratzen ez direnak, tokatzen zaienaren goitik.

— Superavita esaten zaiok horri.

— Koino! Ba al dakizue mutil honek asko dakiela?

— Horrenbesteko lapurrak ez dituk libre ibiliko, ez? —galdetu zuen norbaitek.

— Nola uste duk, ba? Auzitegiak eta presondegiak litxarreroentzat eginak dituk. Debekaturik zeukatek haundirik hartzea.

— Mundu ederrean bizi gaituk orduan.

— Zuek, lapur txikiok...

— Aizak, Fidel Gaizto edo haizena haizelakoa! —bota zuen beste norbaitek—. Lapurra heu izango haiz, ez gu!

— Iso, jaunak! Lasai! Edan beste zurrut bana. Lapurreriaz eritzi okerregia daukazuela bistan dago. Gertatzen dena lapur txikioi lapurrak esaten digutela, lapur haundiei berriz, ongileak. Pentsa ezazue ni mirua naizela eta

zuek Joseparen oiloak. Artalea jan ahala botatzen badizuete, ez dago problemarik. Baina gutxiago botatzera, denok bilakatzen zarete lapur, harrapatzen duzuena besteei kentzen baitiozue. Nik, miru honek, atseginez begiratzen ditut zuen arteko mokoketak eta, azkenean, oilorik onena neronek eraman. Eskasia eta lapurreria elkarrekikoak dira, jaunak.

— Denok nahikoa bagenu ere, ez lukek lapurrik faltako, asko daukanak gehiago nahi baitu.

— Horrexegatik hilko gara bagenutik ba dugura pasatu gabe. Hortxe dago hain zuzen lapur haundien kontua.

— Jakin al zezakeagu nortzuk diren lapur haundi horiek?

— Berehala. Piztu telebista, Josepa.

— Hona kantari bikote bat —zioen tele hizlariak— «Mundutarrak» izenez, entzute nazionala ez ezik, internazionala lortu duena. Neskak hogei urte eta mutilak bi gehiago. Zer kantatuko diezue teleikusleei?

— «Ezin dut lorik egin» izeneko kanta —esan zuen neskak.

— Guk hainbat lan eginik, egingo likeate, bai, lo — esan zuen tabernako batek—. Horiek zer, Fidel Gaizto?

— Lapur txikiak. Berei entzuten egiten den denbora bakarrik lapurtzen dutenak.

— Uste al duzu zuk, jaun Garmendia, —zioen geroago tele hizlariak— moda modatik joan daitekeela?

— Inola ere ez, zeren...—ekin zion jaun Garmendiak.

— Eta zuk, andre Tortijos, moda nori zaiola beharrezkoago uste duzu? Gizonezkoari ala emakumezkoari?

— Biei berdin esango nuke, zeren...

— Horiek zer, Fidel Gaizto?

— Horiek ere lapur txikiak akaso. Haundiak ostean dabiltza hor. Zuetatik zenbatek lan egiten du oihal fabri-

kan? Bat, bi, hiru, lau, bost, sei. Galde hauei nortzuk diren horien ostean dabiltzan lapur haundiak.

— Banku Zentraleko batzorde admnistratiboak..... —zioen telegunkariak.

— Hemen zetozek lapur haundiak! —hots egin zuen Bartelek.

— ...atzoko batzarrean erabaki zuen, kredituak aurreruntzean...

— Aurreruntzean atzeruntz beti!

— Horra batzorde buruak hitzaldia hasten duen mementua, zeinek hileko balantzea azaltzean... —telebistak batzarreko irudiak ematen zituen.

— Oraintxe begiratu ondo, jaunak, lapur haundiei! —hots egin zuen Bartelek.

— Buka berri da ministroen kontseilua —jarraitzen zuen telengunkariak.

— Hemen gure mutilak!

— ... zeinetan akordatu baitute sindikatuak—

— Uuuuf!

— ...langileen eskabideak

— Gezurrak dintasunez esaten ikasi nahi duenak entzun arretaz.

— ... justiziaren eskubide... aurrerakuntza armonitsua... anaitasun baketsutik... komunitate osoaren onerako.

— Dena argi, ez?

— Nazio arteko informazioan nabarmendu dira gaur —zioen telegunkariak— Hego Amerikako... Vietnamen berriz... Europako batasunak... Beltzak gorriak ikusten...

— Oooo! Itzal telebista, Josepa, neuk kalkulatzeko baino lapur haundiagoak baitatoz orain. Fidel Gaiztok goldearen legea deklaratzen du: sartu eta irauli! Iraul eta iraul!

— Noizko jotzen duk ordenu berri horren hasiera?

— Inorentzat horrenbeste lan egiteaz etsi dezazuen biharamonerako.

— Orduan ere norbaitek lan egin beharko dik.

— Denok, baina batez ere lehen egin ez dutenek

— Horiek lanean ikasi orduko, gureak egina dik.

— Ikasi ez? —Sumindurik jartzen zen mitinlaria—. Guri irakatsi zigun maisuak berak irakatsiko die horiei ere. Derrigorrak! Ez gaude bihozberakerietan ibiltzeko. Derrigorrak ezin balu, makila dago. Haltzak eta gorostiak ere zertanbait enplegatu behar ditugu.

**Haltzak ez du bihotzik**
**Ez Fidel Gaiztok gezurrik.**
**Ez diat uste geldituko dela**
**Osorik hoien hezurrik.**

## 2

Lezondoko neska talde batek audientzia pribatua eskatu zion. Fidel Gaiztok bere harenean onar zitzala eskatzera zihoazen.

— Ohore haundia litzaiguke, harentxo bat biltzeko asmoa izango baituzu, ez?

— Zer dun harena? —galdetu zuen Fidel Gaiztok, erantzuna asmatzeko luzapidez.

— Beno, ba. Ba dakizu —hasi zen neska bat, barre artean nola jarraitu ez zekiela—. Ba, horixe. Lehendakari haundi batek, ondo agintzeko behar duena.

— Buru argia eta bihotz nagia. Alderantziz lehendakariaren azkena. —Fidel Gaizto eztitan zegoen neskak halako endreduan sartu zituelako.

— Baina ondo agintzeko... Esan nahi dut... gizonak... —barretan ito zen neska gaizoa.

— Barrabilak behar dituela! —bukatu zuen beste batek. Horrenbeste kopla gauza bat esateko.

Horiek ba ditinat nik, baina ez harenak, neureak baizik.— Eta airerik xaloenez gaineratu zuen: —Ez dakidana dun zer zerikusi duen horrek zuek diozuenarekin.

— Zer zerikusi?

Izarretarainoko barre algara jaurti zuten neskek. Betunak erditzearekin zer zerikusi duen galdetu balu ere!

— Honek oraindik haurrak poxpoloetatik datozela uste din. Eta hik, tipula buru horrek jakin dezaan, harena duk lehendakari ganorazkoak beretzat apartatzen duen birjina saila eta birjinak dituk...

— Marka hautatuko botilak bezala, —moztu zuen Fidel Gaiztok— behin irekiz gero, errespeto guztia galtzen dutenak.

Harenaren esanahia eta nesken proposamena argitutakoan, Fidel Gaiztok ederki zeritzala esan zuen, baina lehenago azterketatxo bat egin behar zela. Neskak baiezkoan zeuden.

— Ea! Ireki ahoa.

— Zertarako?

— Hortzak ikusteko

— Hortzak zertarako.

— Ez naun alperrik tratulari izana. Ganaduari hortzetara begiratzen zaion lehenbizi.

— Eta gero?

— Gero haginetara. Ireki gehiago. Tira! —bukatu zuen azterketaren lehen zatia—. Oraindik hortzak erakusteko moduan hago.

Horrela denak banan-banan pasatu ondoren, bigarren zatia zetorren.

— Ea! Jira pixka bat! Ile labanegia dun hik. Hik, ordea, begi saltariegiak. Gona luzeagoa eta hatzazal laburragoak behar ditun hik. Ezpain beroegiak dauzkan hik. Hire aurpegiak krema gutxiago eta ur garbi gehiago behar din. Beno! —bukatu zuen bigarren zatia—. Agerian duzuenetik, aski dun. Ezkutukoak hurrengoan.

Neskak ez zeuden batere konforme azterketa modu hartaz, akatsa besterik ez baitzien aurkitu.

— Alderdi onen bat ere nonbait edukiko dugu, ez?

— Bai noski. Alderdi bat daukazue, akats guztietatik libratzen zaituztena: Emeak zaretela.

— Bai aurkikuntza! —hots egin zuten neskek—. Zila ebakitzean erabakitako auzia. Nola hartuko ote lukete gizonezkoek ar soiltzat jotzea?

— Gaizki segur asko, baina horrek ez din ezer kentzen —erantzun zuen Fidel Gaiztok—. Beste modutan geundeken maitasuna deritzan drogeria hori horrela sinplifikatuko balitz. Animaliek, anitz gauzatan bezala, irakatsi ederra ematen zigunate horretan ere.

Konparazio hark eskandalu haundia sortu zuen neska artean.

— Animalien instintu mailara jextea besterik ez geniken behar!

— Jetxi ala igon? Jakin nahi niken zergatik zor zaien giza men bikainak direlako horiei instintuei baino abegi hoberik. Kontuak kontu, zer dun gizakia ere instintu multzo bateko animalia besterik?

— Aizue, neskak! —burlatu zen krema gutxiago eta ur garbi gehiago agindu ziona—. Aurreruntzean ba dakizue zer egin. Arra den galdetu eta ezetzik ez badio, aurrera berarekin. Zertarako saiatu geure buruak dotoretzen? Eme txartela erakutsi eta kito. Programa horrekin —bukatu zuen barre gangarrez—, gaizki behar din Fidel

Gaiztok.

— Fidel Gaiztoren erresuman —oihuztatu zen ozenki, eskuina goian eta ezkerra bizarrean—, zango okerrek zango artezek hainbat abegi izango dinate. «Hainbat» zionat, ez «gehiago», lehengo gaitz berean ez berrerortzeko.

— Baina nola nahi duzu hain grina berezkoak eta unibertsalak abolitzerik?

— Ez zegon ezer berezkorik, esplotatua ez izateko grina besterik. Gustoak, hanburgesak bezala, egiten diren modukoak ditun. Berreziketaren gorabehera. Fidel Gaiztori bizarrik erne dakion bitartean, lortuko dun, bai! Erredios!

— Astoa jaiki eta kukurruku egin! —bota zuen ezpain beroegiak zituela esan zionak—. Bere bizi guztia ganadu konparaketan emandako tratularia sinpletasuna aldarrikatzen orain.

— Ah! —ihardetsi zuen Fidel Gaiztok arrandiaz—. Ganadua bezala, salerosgai izan nahi baduzue, hor konpon zuen duintasunaz

— Beno! Harenik biltzeko usterik ba duzu ala ez?

— Ez zekinat, asko beharko bainituzke. Asurbanipalek seirehun omen zitinan eta hainbesterik Lezondo guztian ere ez zegon.

— Seirehun? —hots egin zuten neska guztien ahoek batera—. Urteak hirurehun egun bakarrik ditu gero!

— Asurbanipalek ez zitinan, ordea, zuek pentsatu duzuenerako erabiltzen, oherakoan hirurehunen esneaz oinak eta jaikitzean beste hirurehunenaz aurpegia garbitzeko baizik. Horrexegatik erabiltzen omen zinan beti esne txarreko aurpegia. Nik nahiago dinat neu bezalako ahuntz bizartsuen esnez garbitzea. Ezer esatekotan, aker aurpegia dudala esan dezatela.

Azkenez, harenik jartzeko gogorik ez zeukala esan zuen. Hain gabeko lehendakaria gradurik gabeko ardoa

dela ekin zioten neskek.

— Faraonen, Salomonen eta justizia pornografitzat hartzen dutenen kontuak ditun horiek.

— Hala ere ohore haunditzat genuke —kostatu zitzaion esatekoa bukatzea— maitasuna Fidel Gaiztorekin estrainatzea.

— Je, je, je! —Bizarra ferekatuz, behetik gorainoko begirada aztertzailea bota zien—. Nola jakin zezakenat estrainatzeko zaudetela?

— Zerorrek probatuta.

— Soluzio okerra zeritzanat, zeren, proba bazaitzatek, gero benetakoan ez zeukanat birjinarik estrinatzerik. Gainera gakoa ez zegon zuen birjintasunean, neurean baizik, zeren, inoren birjintasun asko hautsi ahal izan arren, neurea batekin bakarrik hauts zezakenat eta nire birjintasunak bakarrarekin hausteko baino gehiago balio din. Ez dinat bizarra alperrik utzi. Ohore hori inori ematekotan, putak lituzken aurrenengoak, horiexek baitira lanik gehien egiten dutenak. Ez uste Fidel Gaiztoren erresuma ohez ohe ibiltzea izango denik. Edertasun aretoak perretxiko mindegi deklaratuko ditinat eta miss mazionalak haien simaurtzaile.

— Iso! Sexu ahularentzat programa gogorregia ez al deritzazu?

— Ohituko zarete ispiluko denbora jimnasiari ematen diozuenean.

Bartelek berekiko pentsatu zuen sexu ahularen arazoak aisa konponduko zirela Lasunda Mendibeko feminitateko arduradun jarririk.

# 3

Pentsatu bezala, igande arratsalde gabez, neskato mutiko talde bat Larraunera heldu zen, gizon bizartsua ezagutzera. Fidel Gaiztok pozik bezain solemneki hartu zuen espedizio hura. Txikienek urrundik eta errezeloz begiratzen zioten lehenengotan, tipo bitxi hura Bartel Larraun, Fidel Gaizto, mamua ala zer ote zen. Bakoitzak bere irudia zeraman gizon bizartsuaz, baina inorenak ere ez zion ikusten ari zirenari hurrik eman. Haurrei, ordea, aurreritziak uztea zintz egitea hainbat kostatzen baitzaie, laster lagun egin ziren.

Halako gudari zaila beste gabe bera ikustera etortzeak odola berotu zion Fidel Gaiztori. Ea olgetan hasi eta benetan amaitu behar zuen! Zerbait asmatu beharra zegoen. Ekintzaile xehe haiek, etorkizun berriaren promesak, ez zegoen Larraundik defraudaturik bidaltzerik. Haurrei atsegin zaien komediarik ugari egindakoan, intxaurrondo milenari batera igon eta zabaletara zeukan beso sendoan tente jarri zen, haurrek espektazioz begiratzen ziotela.

— Intxaurrondo honek —hasi zuen mitina, zuhaitz kapela eskerga seinalatuz—, milaka eta miloika urte dauka. Antxina, oiloak arraultzea egiten hasi baino antxinago, intxaurrondo hau bere onenean zegoenean, gure asabak, —gomuta bikaineko tximinoak—, zuhaitz gainean bizi ziren, naturalago den bezala, eta lurrean ibiltzen deskuidatzen zirenak zoroetxean sartzen zituzten. Beren jatorriaz konforme ez ziren errebelde batzuk lurrera saltatzen hasi zirenean, gerra haundiak sortu ziren, zuhaiztar ortodoxoek zibilizazioaren hondamendia zetorrela uste baitzuten. Baina luzera errebeldiak irabazten baitu beti, mendez mende burruka krudeletan ihardun ondoren, lurrera zaleak nagusitu ziren, zibilizazio zaharraren oroikarritzat Gernikako

arbola utzirik. Zueri eskolan eta elizan irakasten dizuen jatorrizko pekatuaren bertsioa honexen konponketa zuntzuna besterik ez da. Auzia ez zen zuhaitzetik jan ala ez, zuhaitzetik jetxi ala ez baizik. Gero maiz berritu izan dira zuhaitzera itzultzeko afanak. Alperrik. Gizakia fakultateak galdurik zegoen, eta saiatzen zen bakoitzean, bi adar eta lau saihets hausten zituen. Horregatik segurantza forestalak batetik eta sozialak bestetik astunki debekaturik daukate zuhaitzetara igotea. Nik, ordea, lege agurgarri horiek uzkitik pasatzen baititut, eta batez ere lurrean arrastaka dabiltzanak burutik daudelako, berriro zuhaitzera igotea erabaki dut. Gustatzen al zaizue zuhaitzetara igotea?

Neskato-mutiko guztiek aho bateko txilioz baieztatu zuten azpitik gora. Hau duk lehendakaria!

— Gustatzen al zaizue puntaraino igon eta birundaka ibiltzea?

— Baaaai!

— Gustatuko al litzaizueke katagorriak bezala zuhaitzik zuhaitz saltatzea?

Lezondoko haurrek inoiz ez zuten halako indar mentalez eta eztarrikoz baietzik eman.

— Igon orduan intxaurrondora! —agindu zuen Fidel Gaiztok.

Minutu baterako, intxaurrondoaren kapelatzarra neskato-mutikoz josirik zegoen, munduko txilioketa guztia haraxe bildurik.

— Eskerrak zuek sano zaudetela oraindik. Baina zorotasuna itsaskorra eta zentzua, ordea, urrunkorra baita, zuek ere, beste zoroak sendatu ezik, berdin bukatuko duzue, zuhaitz tutu batera igoteko gauza ez zaretela. Fidel Gaiztok ohore hunditzat dauka lurrean dabiltzan sano bakarrei intxaur gainean hitz egin ahal izatea.

Hitzaldiaren hitzaurrea amaitua zen. Haurrek berrike-

tarako eta zuhaitzean leku hobeak harrapatzeko probetxatu zuten tartea. Zuhaitzetik hitz egitea poliki justifikaturik gelditu zela pentsatu zuen Fidel Gaiztok. Nondik, ordea, jarraitu? Dudarik ere ez intxaurkada hura haundiak entzuteko esperantzaz zegoela. Gainera gudari sail hari ekintza eman behar zitzaion, baina hartarako berotu egin behar lehenengo. Kolpera bururatu zitzaion zuhaitzera igoteari baino bere bizarrari nabarmenago eritziko ziotela. Garai haietan apenas ikusten zen oraindik bizarrik Euskal Herrian. Gainera bizarrean biltzen zen Fidelen Gaiztotasuna eta Gaiztoren Fideltasuna. Intxaur adar bat bortxaz iharrosi zuen, haurrei susto galanta emanik. Neskatoei bere numerotxoak egiten ari zen mutikoa bi metro beheragoko adarrera erori zen. Beste iharrosaldi bat eta isiltasun leherkorra nagusitu zen.

— Lehengo gau batez —hasi zen berriz Fidel Gaizto—, loak har hurran nengoela, miragarriak gertatu ziren nire gelan. —Bere gelako leihoruntz luzatu zuen besoa—. Tximista etengabeen distirek flist-flast argitzen zuten gela. Trumoi ordez txistu zorrotz zorrotzak entzuten nituen. Logura arras joan zitzaidan eta flistadak kontatzen hasi nintzen. Bat, bi, hiru, sei, hogei, ehun, mila, ehun mila, ehun mila miloi, triloi, koatriloi, mejiloi, zentiloi, motiloi... eta bat. Utzi egin behar. Kontatzeko baino azkarrago zihoazenez, leihora jaiki nintzen. Ba al dakizue zer ikusi nuen? Tamainuak hartu ezineko bi erraldoi izugarri bata iparrean eta bestea hegoan, elkarri izarrekin harrika. Izar harrikadak fiiinnn! txistu eta flist-flast argi egiten zuten. Baina ez batak ez besteak ez baitzuen kontrariorik azartatzen, izar guztiak, erdiak iparretik, erdiak hegoatik, mundutik kanpora erori ziren. Orduan iparreko erraldoiak ilargi irten berria jaurti zion besteari, eta bekokiko begi boskoitzean hartutako ilargikadaz, hegoako erraldoitzarra ere mun-

dutik kanpora erori zen, izarren atzetik. Ilargiruntz zihoazen kosmonautak Atlantikora erori ziren. Eskerrak gaua zela eta eguzkia beste aldean zegoela. Bestela hura ere jaurtiko zuten, mundua betiko ilunetan utzirik. Erraldoi irabazleak ortzi gorenera igon eta bere sudur zazpikotzetik hamalau tximista jaurti zituen, Euskal Herriko zazpi mendirik gorenetara. Gorbea, Aizkorri, Aralar, Oiz, Larrun, Ibañeta eta Orhi suak hartu zituen. Su bakoitzetik lamina urdin urdinak eta argi argiak irtetan hasi ziren eta erratz izeki bana airean dantzatuz, bakoitza bere tximistatik gora, erraldoi sudur zazpikoitzaren mutur bueltan bildu ziren. Erraldoiak bere ahoko lezetik aldez eta aldiz kanporainoko uhua bota zuen, zeinen ondoren lamina urdinek erratz dantza hasi baitzuten, irrintzinaka zorabioak hartu arte. Erraldoiak beste uhu bat bota zuen lehengoaren bila. Dantzariak gelditu eta sudur zazpikoitzaren hamalau zuloetan hamalaunaka, bakoitzak bere erratza sartu eta itzalitakoan, iparreruntz abiatu ziren errezkan. Kantuariko itxaso parean heurt egin eta neure leihotik pasatu zen errezkada osoa. Bakoitzak bere erratz itzaliz, baina oraindik ketsuz, matrail bakoitzean igortzi bana eman zidaten eta hegoatik aldendu ziren. Ortzi gailurretik erraldoiak goruntz saltatu zuen. Ikusgarriok ikusirik, berriro oheruntz abiatzean, hona leihoan behera, okotzetik lurrera, bizarrez loturik nengoela. Lamina urdinen igortziek igarri gabe bizartu ninduten. Bizarrari tiratzen nion, baina alperrik. Esku artean zerekin ebakirik ez eta bizarrean behera jetxi behar izan nuen etxe aurrera. Haitzurra hartu eta ingurua zulatzen hasi nintzen, bizarra osorik ateratzeko. Ekin eta ekin, harrikadak hondorik ez jotzeko moduko zuloa egin nuen. Haitzurra gastatu zitzaidan eta bizarra oraindik sakonago. Etsi eta bizarrean gora berriro igon nintzen lurrera. Sega hartu eta hemendixe —eskuz bizar multzoaren ertza

seinalatuz— ebaki nuen. Ez da bizarra gizonetik erne, gizona bizarretik baizik! Zoritxarrez zuhaitzetik jextea bezala, bizarra ere moztea bururatu zitzaion gizakiari, pixkanaka bere jatorriaren ezaguera galduz. Ba dira oraindik zorionez Fidel Gaizto bezalako bizardunak, zeintzuri eskerrak itzuliko baita mundua bere jatortasunera.

— Hor tranpa zegon! —esan zion mutiko batek ahapetik ondoko neskatoari.

— Galde ezaiok!

— Galde ezaion herorrek.

— Galdetuko zioat, gauez etxera laguntzen badidak.

— Egina! Lagunduko dinat.

— Aizu, Fidel Gaizto! —hots egin zuen neskatoak—. Gizakiok bizarretik ernetzekotan, nola ez zaie emakumeei bizarrik gelditzen?

Emakumeek ere aurpegian ez bada, galtzarbean eta abar hainbat bizar daukatela esatekotan egon zen. Baina haur haiei emakumeen bizarguneak adierazteko goizegi zela pentsaturik, aldi hartan ez zegoela emakumerik erantzun zuen.

— Nola irakatsi digute orduan Jainkoak gizona eta andrea egin zituela?

— Jainkoa oraintsukoa dun, neska! (ez nazala inkisizioak entzun!

— Jainkoa ez al da, ba, betikoa?

— Gauza hauek, ordea, betikoaren aurrekoak ditun.

Neskato-mutikoak elkarri keinuka ari ziren. Fidel Gaizto bildur zen huskeri batengatik mitin guztia honda zedin. Beste mutiko batek teoria hari akats gogorragorik aurkiturik, gizonak berak ere bizar gabe jaiotzen direla bota zuen. Fidel Gaiztok entzulegoaren jabetasuna ia galdurik, eta irtenbide hoberen faltaz, aldi hartan jaiotzarik ez zegoela erantzun zuen. Nagusitxoenek —goiz bizkortzearen

abantailak—, elkarri ukondoka ziotsaten:

— Jakina! Nola izango zuan, ba, jaiotzarik, emakumerik ez bazen? Segi! Segi!

Hara non, berak nola ez zekiela, entzulegoaren hedeak berriro eskuratu zituela Fidel Gaiztok, autoa amildurik, lau bihurgune beheraago berriro martxan aurkitzen denak bezala.

— Hauek honela, (lehenengo egunerako nahiko ideologia sartu zieat) burrukarako prest al zaudete?

Txiliozko bai luze hura beheko ibarretaraino entzun zen.

— Prest al zaudete koartel militar guztietan asaltua jotzeko?

Gehienek «salto» edo zerbaitsu ulertu zuten eta lehen baino amorratuago baieztu zuten, denbora gehiegi baitzeramaten geldi. Txantxetako arazoa ez zela eta indarrak ondo neurtzeko oharterazi zituen Fidel Gaiztok, berak bizarretan zeukan hainbat koartel asaltatu beharko omen baitzen.

— Horrenbeste? —mutiko batek.

— Laster egingo diagu horiena! —beste batek.

— Fidel Gaiztoren bizar bakoitzak ondo merezia dik koartel bana.

Haurrak zuhaitzetik beheruntz hasirik zeuden, ekintzarako irrikitzen.

— Gaurtik aurrera, ez zarete eskolhaurrak, Fidel Gaiztoren gudariak baizik.

Egunean koartel bat eta Garellanotik hastekotan gelditu ziren. Denak gertu zeudela eta su! agintzeko zegoela, neskato bat intxaur ostean negarrez erreparatu zuen.

— Hasi aurretik desertore? Zer gertatzen zain?

— Ni ez noa! Nik ezin dut joan!

— Zergatik?

— Neba bat daukat Garrellanon soldadu.

Fidel Gaiztok, buruzagi azkar bezala, neskato gaizoa kontsolatu eta uste gabeko zirkuntantzia hark estrategia arras alda erazten zuela azaldu zuen.

— Arakatik hasiko gara, Garellano neba soldadua itzul ondorako utzirik.

## 4

Udazkenean, Lezondotarren Fidel Gaiztorenganako afana zuhaitz hostoekin batera erori zen. Jende helduak ez zezakeen joko hura gehiago luza. Bizimoduak zehazkiegi ebatzirik zeukan haien jokoa eta jokalegeak. Beharraren sokak laburregi lotzen zituen lurrera eta lanera. Zakur lotuari beste zakur bat erbiaren atzetik ikusteak bezalako sentsazioa eragiten zien Fidel Gaiztoren aireak. Egunak bere orduak zituen, haien bizitzako joko bakarrera, lanera, kondenatuak. Atzo, herenegun, ihaz... Edozein gertaera, datatuz gero, hatzemanik, denboran lekuturik gelditzen zela uste zuten lezondotarrek, albun batean bezala, nahi zutenean hartzeko. Lehena trumoiaren hotsa bezain erremedio gabeki aldentzerik ezin jasanik, denbora asmatu zuten, bizitzak eten gabeko urruntzetik salbo, konsistentzia maneiagarria eduki zezan.

Fidel Gaizto denboratik irtena zegoen, edo denboraren funtzionaltasuna galdurik. Berdin zaitzaion edozein ordu nahiz egun. Areago, ez zeukan ez ordurik ez egunik. Haren denbora bakarra naturak bortxaz ezartzen ziona zen: loa, urdaileko minaldiak eta gutxi gehiago.

Lezondotarrek orduak estuki berezirik zituzten beren lanetarako. Fidel Gaiztorekiko harremanak inkurtsio arriskutsuak ziren haien denboraren konsistentzian. Pixkana-

ka haren fantasiei bizkar ematen hasiak ziren. Irailaren erdirako, Fidel Gaizto ez zen Lezondon behinolako pasadizo bat besterik. Aldentze hura justifikatzeko, ba zen Fidel Gaiztoren zorotasuna atera zuenik, nahiz eta gehienek aitortu berak zeudela zoro, hainbeste lan inorentzat egiteko. Baina, Bernar Lekoizek zioenez, zorotasun hark ez zuen erremediorik.

Fidel Gaiztorekin hainbeste barre atsegin eginiko neska gazteak ere aspertu egin ziren. Ez zieten haren hautuei interesik aurkitzen. Ez ziren jadanik dibertitzen, besteak beste, jokatzen ez zekitelako, Fidel Gaiztok esaten zien bezala.

— Jokolariak joko berean gozatzen din gehien. Jokolaria ez denak, ordea, beti berritasuna behar, aspertuko ez bada.

Alperrik zen. Fidel Gaiztoren berritasuna joana zen haiengan. Areago oraindik, hark beti bere leloari ekiten baitzion, kapartzat ihes egiten zioten.

Haurrak ziren Fidel Gaiztori zintzo zerraizkion bakarrak. Fidel Gaiztok ere haiexek zituen maiteen. Zila ebaki zahar dutenekin ez dagoela zer eginik esaten zuen. Haurrak, zibilizazioari baino naturari atxikiago, edozein jenialitate asimilatzeko gai omen ziren. Etxeetan, ordea, beste soinurik zebilen. Izan ere, kontu hartzen hastekoa zen igande arratsaldero koartel militar bat suntsituriko euforiaz etxeratzea neskato-mutikoak.

— Militar guztiak akabatu aurretik aspertuko ditun —esan zion aita batek emazteari.

Baina aspertu beharrean, proportzioak haundituz zihoazen. Fidel Gaiztok iraultza drastikoki bukatzea pentsatu zuen.

— Jaun gudaritxoak! Gauzak orain arte errezegi atera zaizkigu, baina ez da zuhurtzia koartelak esku hutsez asaltatzea. Datorren igandean armaturik ez datorrena kirkir zuloak pizez betetzen ipiniko dugu.

— Hori, hori! —onartu zuten gudari txikiek—. Ez esku hutsez ezin dugulako, baina horrela eskarmentu gogorragoa hartuko dute.

Lezondoko haizkora, haitzur, aihotz, burduntzi, igitai eta solterik harrapatu zituzten erreminta guztiak Larraunen ziren hurrengo igandean.

— Ikusten gailur hura? —agindu zien Fidel Gaiztok.

— Gauerdian ilargia eserita egoten dena?

— Berbera!

— Ikusten dugu.

— Ba, hantxe biltzera denok. Prest?

— Baaai!

Fidel Gaiztoren irrintzia, gudarien erantzuna, ekin! agindua eta bakoitzak ahal zuena.

Oraindik tente al hago, koronel lotsagabe hori? Haizkorakada bat, bi, lau, hamalau! Lizar bat gutxiago. Mirentxu! Hi lot hakio soldadukume horri, nik honi ekiten diodan bitartean. Izorratu besterik egin ez duzuenok! Arkazi mehe bat eta gaztaina sendo bat gutxiago. Ekark haitzurra! Militarren sustrairik ere ez dinagu utzi behar. Ai! Zer egin duk? Hanka harrapatu zidan! Madarikatua! Oraintxe ikusiko duk. Zirt, zart! Ez duk gehiago inor zapalduko, ez galoirik jantziko. Aihozkada bat, bi, hiru... Egik ihes, gauza bahaiz! Eror hakit gainera, militarra ba-

haiz! Lau, hamar, hamalau... Krrraaask! Blast! Ustel hadi hor, jeneralen jeneral hori. Tantai eder bat behera. Eh! Eta errekatik ihes egiten badigute? Ez, horixe! Dzanga! Baina urpetik badoaz? Egia! Murgil hadi! Murgil herori. Nik ez diat ito nahi. Halako gudaria diagu hirekin. Eh! Egina! Ura pizeztatuko zieagu. Ja, ja, ja! Gusto ederra edukiko dik. Errekaren alde bakoitzean hamarna iturritxo ziren, erdira apuntatzen. Hi, Luken! Beste alderaino ezetz iritxi! Baietz! Ezetz! Ezin. Bukatu egin zaidalako! Baietz iritxi pizgale haundia dudanean. Pipa pakete bat ezetz. Baietz! Bihar arratsaldean? Egina!

Eta neskak? Hauek begira gehiago dibertitzen ziren, mutilak piz egiten baino. Aizan, Arantza! Begira nolako esparragotxoa daukan Aitorrek. Ura bota behar zionat. Eh! Neurea urrunen! Azkenengo tantak erori zitzaizkion. Aurrera, mutilak! Jo! Hautsi! Eratzi!

Belateko tontorrean giro epikoa nabari zen.

— Portatu zarete, neskak! Portatu zarete, mutilak! Lainoak ere odoleztatu baitituzue. —Arraskorri zen—. Hurrengo koartelean apenas lanik dukegun, gaurkoa entzunik, ikaraz hilko baitira. Batez ere errekako armatxoak erabatekoak izan dituk. Horrelakorik ez ziaten jeneralik argienek ere espero. Ohartxo bat, ordea, hurrengorako. Ondo zegok lehenbizi gorengoak likidatzea, baina sarjentuen, kabuen eta soldadu soilen ardura ere hartu beharko dik norbaitek.

Etxera orduko, mendiko zifrak hamar bidertu egiten ziren.

— Ama! Berrogei jeneral garbitu ditut.

— Berrogei inurri esan nahi izango duk.

— Zereko inurriak! Jeneralak, ama, jeneralak! Zuk ez dakizu horiek zer diren ere.

Aste bitartean ez zegoen oporrik. Auzune bakoitzekoek

beren gerlaxkak antolatzen zituzten. Ba gaituk ia justizia geure esku hartzeko lain. Neba-arreba hirukote batek, bi mutikok eta neskato batek, etxeko arta sororik haundiena asaltatzea pentsatu zuten. Hik goitik, nik behetik eta hik hegaletik. Lehenengotan kontuz, baina artatzan barruratu ahala, berotu ziren eta hura arto erortzea! Ordu laurdenerako, hondamen alorra zen hura. Hauek ez ditun Altxamendu Nazionalerako ere jaikiko. Beste soro bati oratuko al zioagu? Gaurko nahikoa dun. Napoleonek ikusi behar likek hau! Oinik ere ezin zuten bota, hainbeste gorpuren artean. Balentria galanta egin diagu. Galantagorik egin behar zuten etxean haien sei belarriek.

— Militarrak horiek? Zipli, zapla! Bakoitzeko bana. Esak orain ere militarrak zirela!

— Ez, aita, ez! Artoak ziren! Artoak ziren!

— Ama! —esan zuen treneko bagoikada osoak entzuteko moduan—. Aurreko igandean zazpi kapitain, hamairu koronel eta hogeita hamairu jeneral garbitu nituen.

— Hago isilik, txotxo! Haur moduak datozena orain!

— Hurrengoan gradu bakoitzetik bosna gehiago.

Jendeak ezaxolaz begiratzen zuen, telebistan ikusitako gaztelu jokoren bat izango zelakoan.

— Ez zekiat zertarako ematen dituzten horrelako gauzak.

— Fidel Gaiztok esan zigun... —berriz ere hark.

— Zer ziok mutiko horrek?

— Iruñeko koartela harrapa dezagunean...

— Hori ez zitekek telebistan entzuna izan!

— Euskadi libre...

— Etxean ipurdia gorrituko diat! —mutikoaren amak.

— Izango dela...

— Lotsagabe horri!

— Lapur haundi guztietatik.

— Hamar urte gehiagorekin, mutiko horrek gaizki behar dik —esan zuten trenekoek.

Nahastea ez ezik, kaos garbia zen hura, haurren amentzat noski.

— Kijotekumeok herri eta geu azpikoz goratu behar gaituzte. Idazkariak baleki!

— Militarrak ez dituk gero matxinsaltoak! —ziotsan Bernar Lekoizek bere mutikoari—. Nik hainbat ezagutzera, ez huke izenik ere aipatuko.

Hurrengo igande arratsaldean, Lezondoko neskatomutikoak kanposantu ostean batzartu ziren. Zer egin? Fidel Gaiztori ordezkari bat bidali zioten, mezu telegrafiko honekin:

— Ezina jarraitzea. Gauzak beltz. Belarriak gorri. Haunditzen garenean, konta gurekin. Gora Euskadi!

Irailaren erditik gora, Fidel Gaizto bere buruaren aurrez gelditu zen berriro, behia eta txakurra lagun bakarrak zituela. Urdaileko sugea, eufori aldietan lozorroan egona, izugarriro zitaldu zitzaion. Beheraldietan sumin doblez mendekatzen zen, traidorea alaena. Egun bikainak. Esperientzia bitxiak. Baina hura bukatua zen. Aurreruntzean zer?

## PLAGAREN LEHERKUNDEA

**Irailak hogeita bederatzi**
**Lezondon San Migelak**
**Jan ditugu herriko**
**Arrain eta okelak**

Larraun Berrin etxe bete bazkaldar zeukaten. Osaba Barteli ere gonbita egin zioten, baina, pentsatzekoa zenez, hura ez zen agertu.

— Ni ez nauk osaba Bartel, Fidel Gaizto baizik.

Gainera egun hartan operazio haundi bat burutu behar zuen.

— Operazio militarra? —galdetu zuen Jonek—. Har al nezake parterik?

— Mundu guztiak hartu beharko dik. Zin egiten diat gogoratuko haizela aurtengo San Migelez.

Gaueko hamarrak aldean, plaza bete jende zen. Herrikoak eta alberrikoak erruz bildu ziren Lezondon.

**Urteko azken erromeria**
**Pentsa nork nori bota begia.**

Sei gaztez hornituriko orkestatxoak, enarakume go-

setiak habiatik bezala, gartsuki ziharduen bere kioskotik, ehundaka bikoteri itsatsirik ibiltzeko aitzakia emanez. Zenbat bitarte? Agoazilak parte eman arte.

**Maite zaitut, maite zaitut**
**diostazu alperrik**
**maite nauzu, maite nauzu**
**baina eskuz bakarrik.**
**Nahi baduzu, nahi baduzu**
**hartu nire gorputza**
**Ken eskuok, otoi, eta**
**emaidazu bihotza.**

**Maite zaitut, maite zinez**
**munduan zu bakarrik**
**Ez, maiteño, esan maite**
**zaitudala alperrik.**
**Laga, otoi, besarkatzen**
**eskuz zure gorputza**
**eskuetan baitakartzut**
**nahi zenuen bihotza.**

Jon Elgarekin dantzan ari zen.

— Bai kanta polita, ez?

— Ez dinat kantuaz ohartzeko astirik, hi eskuetan hautalarik.

— Eskerrik asko, baina kantua ere polita duk.

— Zergatik polita? «Maite» zortzi bider dioelako?

— Eta poliki dioelako.

— Zer dun zalaparta hori?

Neska-mutil korru bat plaza erdiruntz zetorren.

— Uhuhi!! Hau duk sasoia! Ea, Txistu! Jo zeozer. Eusko gudariak gara...

Erdian norbait zekarten. Kioskora heltzean, musika-

riak isil erazi eta herriko mutil batek mikrofonoa hartu zuen:

— Jaun-andreok! Ustekabe harrigarria iragartzeko ohorea dut. Lezondok eman duen eta eguzkipean dabilen gizonik aipagarriena dohan mintzatuko zaigu, belarri garbien gozamenerako. Denok duzue ezagun, honen sonak haizeak jotzen duen zoko guztietaraino heldu baitira. Hona berton bera!

Han agertu zen —Jonentzat bai ustekabe harrigarria!—, gizon luze, ihar, bizartsu bat, bera bezalako beste bi gutxienez sartzeko moduko soinekoetan. Kantuak zioenaz kontra, bihotza baino eskuak lantsuago zerabiltzatenak ez ziren askorik poztu, mikrofonoan arlote hura ikustean. Gehienei, ordea, jai giroa edozein nabarmenkeri onartzeko puntuan baitzegoen, egundoko espektazioa sor erazi zien irudi xelebre hark.

— Ez nauzue Don Kijote, Fidel Gaizto baizik.

— Hori, hori!

Egundoko txaloaldia atera zuen. Apaizen sermoi mengelez, alkatearen aurkezpen tentelez, gobernadorearen berbaldi marroz eta Francoren gabon mezu marratuz kokoteraino zeudenentzat —edozein ketok uste baitu herria asper erazteko eskubidea duela—, atsegin askatzailea zen halako egunean halako hizlari bitxia entzun ahal izatea.

— Isi, jaunak! Isi, esateko haundiak eta urgenteak baitakartzat.

Jendeak lehen baino gartsuago txalotu zuen.

— Zaudete isilik, alde egingo ez badut! —Plazakada jendea plazakada isiltasun bilakatu zen—. Gaur arratsaldean, eguzkiak zeruertza jotzean, Estatu Berriko antolamendua osatzen intxaurpean ari nintzela, grisetik beltzerako hodeitzarra hauteman nuen gainean. Oskarbian halako multzoari arraro eritzirik, begira jarri nintzaion. Hodeia

beheruntz zetorren, berunezko kea bezala. Hurreragotzean, firrindadatxoa, gero zurrumurrua, azkenez burrunba irenskorra. Teilatuan, zuhaitzetan, belarrean, lugorrian, edonon kokatzen ari zen. Orduantxe igarri nuen hodeitzako hura koko plaga zela. Haritz ezkurraren tamainuko kokotzar higuingarriak. Hegoak erneak ez, baina sartuak zeuzkaten. Beren janbehar desesperatuak bakarrik sor zezakeen hain mugikera baldar nazkagarria. Dena, ene larrua ere bai, mihizkatzen eta xurgatzen zuten, halako lehiaz, non hurrengoari fitsik ez uzteko fatalismoa zekartela baitzirudien. Goragaleak emanik, etxean ezkutatu nintzen, ate-leihoak itxita. Baina ordurako etxe barrua ere kokoztaturik zegoen. Lehen gutxi baziren, tximinitik behera blist-blast erortzen ziren. Hura harrigarria, zeren, koko haiek bederen erretzat nituela, kokokume prozesioak ateratzen baitziren sutatik, sukalde osoan sakabanatuz. Hauek gorputz guztia inguratu zidaten. Eroturik, kanpora abiatu eta neure burua osinera bota nuen. Alperrik! Uretatik atera eta hasuinez azotatu nuen gorputz guztia. Alperrik! Neure buruari sua eman nion. Alperrik! Zer zomorro madarikatu ziren jakin nahiez, hatz artean leher erazi nuen bat. Harriturik ikusi nuen ez zeukala bihotzik, ez birikirik, ez hezurrik, ez ezer. Dena ziren aho eta urdail, beren etengabeko xurgaketan edoskitako likinkeriz hanpaturik. Likido berunkara hura odolaren eta izerdiaren nahastea zela konprenitu nuen. Harrigarriena, ordea, lehertzean ez zirela hiltzen, zati hainbat kokokume sortzen baizik, eta hala ugaltzen, ez ar ez eme ez baitira. Xurgatu, hanpatu, lehertu, eta kokokume pilo berria, sekulorun sekulotan, amai gabeko prozeduran. Erlez inguraturiko ahuntzak bezala, arinari eman nion mendietan behera. Iratzarik iratza, saskardirik saskardi, kokoetarik libratzea lortu nuen. Hemen nauzue, jaunandreok, plaga lazgarri baten berri ematera etorria. Ibaiak,

zuhaitzak, abereak, lurrak, giza odolez eta izerdiz bustitako guztia kokoztaturik utzi dut. Bihar goiza orduko, herria harturik dagoke. Haiek hiltzeko arma bakarra inanizioa da, odol eta izerdi arrastorik aurki dezateino, biziko eta ugalduko baitira.

— Odol, izerdi, hil! Zer ziok arlote horrek? —Taketak artegatzen hasirik zeuden—. Ea subertsio nazionala dakarren honek!

— Bai zera! Ordenu soziala zoro batek lokatzeko baino finkoago zegok.

— Sar bedi bakoitza bere etxean! —zioen Fidel Gaiztok—. Itxi ate, leiho eta tximiniak eta egon gelditasunik osoenean, fosiltasunean ahal bada, odolaren zirkulazioa ere gelditurik. Ez joan inor lanera, ez lantegira, ez itxasora, ez mendira. Justizia bila baletorkio ere, Jainkoa azkenetan dela entzun baleza ere, ez egin zirkinik inork. Fidel Gaiztok greba orokorra manatzen du!

— Greba orokorra esan al dik? —Hitz deabruegiak noski haien aingeru belarrietarako—. Subertsioa duk hau!

— Zer duk subertsioa? —galdetu zuen taket gazteak?

— Subertsioa duk norbaitek ordenu sozialaren aurka... Hauxe duk subertsioa!

Hamar taket kioskoruntz zihoazen zirti zarta, beren egiteko bikainaren kontzientzia argiz.

— Askotzak hilko dira —ari zen mitinlaria—, fosilaldiari eutsi ezinik, baina bizirik salbatzen direnek lur berria dukete lantzeko, odoletik eta izerditik garbi. Greba orokor honi marro egiten diona traidoretzat hila izango da. Horra lehenengo traidoreak! —oihuztatu zuen, taket aldra seinalaturik.

Pistola bat atera eta dinbi danba bi tiro bota zituen goruntz. Danbada haiek bi eztanda atomiko bezala izan ziren, airea, barrukoa batez ere, desintegraturik. Izu ola-

tu batek plazakada jendea bortxaz atzeruntz jaurti zuen, taberna, atari, etxarte eta bakoitzari estuasunak ematen zion tokian ezkutatuz. Taketak ere jendetzarekin batera atzeratu ziren. Behin behintzat, nahiz eta arautegi militarrek koldarkeria heriotzaz zigortu, iraun sena egitekoaren betetzea baino indartsuago gertatu zen. Bi balak bertikalki erori ziren erdi erdira. Lezondotarrek, ustez salborik ia, leiho ertz eta orma osteetatik kukuka ziharduten, urruntasunaren segurantza engainakorrez, balari, joez gero behintzat, sudur punta erakustea ere aski ez balitzaio bezala.

— Jaun-andreok! —jarraitu zuen Fidel Gaiztok—. Bildurra libre da, baina hurreratu mesedez. Ez dut inor hiltzeko asmorik, gutxiago lezondotarrik. Horra bi balak mantso eta odoletik garbi, biolentziaren aurka bakez manifestatzen. —Udaletxe azpian multzoturik zegoen taket aldrari oihukatu zion: —Tiratzekotan, azartatzeko izan bedi, bestela gomenda Jainkoari. Arma hau, jaunak, —berriz ere jendeari—, hurreratu, otoi, hurreratu lasai, arma hau, diot, defentsa hutserako ekarri dut. Zuek, inozo garbiok, esku hutsik etorri zarete.

Idazkaria eta alkatea ere taketen arten ziren. Eztabaida beroa zebilen, tiratu ala ez.

— Zeren zain zaudete? —zioen idazkariak—. Basakume hori lehen ere gehiegi burlatu da gutaz eta justiziaz.

— Musikari batzuren leloez leloturik, loturik zabiltzate, hamabi fusilen begiradaz ohartzeke. Pistola tutu bat atera dudalako, denok ihesi. Sano al zaudete?

— Bera ere armaturik zegok, ordea! Gainera herri osoa berton! —Dudarik gabe, huraxe zen taketen kamustasuna gainditzen zuen emerjentzietariko bat. Sarjentuak esan zuen: —Egitekoaren betetze itsua baino zuhurtzia profesionala behinago da sarritan.

— Zuek —zioen Fidel Gaiztok—, golkoak eta beherago

akaso eskuztatzea lortu duzuenok, ez al zarete ohartzen guzti hori hamabi fusilen baimen tazitoari zor diozuela, eta ez zuen galaitasunari? Horiexek dira koko plagari odola hornitzen diotenak, horiexek zuen izerdia polboratzen dutenak. Oraintxe kargutzen naiz kokotzar haien likido likinaren uhertasuna polborazkoa zela.

— Lasai, jaunak! —erregutzen zuen alkateak—. Gerta dadina gertatu, neu erantzule. Hori burutik dago eta onena haintzat ez hartzea. Biharko egunsentian atxilotu eta kito.

— Hurreratu, jaunak! Hurreratu, otoi! Fidel Gaiztok ba daki nor ez den garbitu behar.

Jendetza, izuaren eta espektazioaren muinera jaurtitako hipnosis boladak erakarririk, aurreruntz hasi zen, nahiz eta kontzientziko azalak atzeruntz eragin.

— Pistola hau neure defentsarako ekarri dut, uste baitut tximino bakoitzak ba duela bere zuhaitzean dilindatzeko eskubidea—. Mikrofonoa oinetik atera eta kordeletik dilindatuz, tximino zabuketa imitatu zuen—. Bai eta zuen defentsarako ere, uste baitut tximinokideek ere ba dutela beren zuhaitzera begiratzeko eskubidea.

— Ikusten? Zeharo burutik egon behar, bat batean tximinoetara jotzeko —esan zuen alkateak, txokor bat piztuz eta huraxe zela alkatetasunaren tenplea erakusteko unea pentsatuz.

— Burutik? Hainbat okerrago orduan! —esan zuen idazkariak—. Ea hurrengo burualdian geure buruetara tiratzea bururatzen zaion.

— Barka bezaidate gure asaba bikainek —zioen beroturik Fide Gaiztok—. Ez dut haiekin berdintzeko usterik, ordutik hona giza arraza asko endakatu baita. Horra gure idazkari agurgarria! —Plazako buruteria, mekanismo bereko piezak bezala biratu zen udaletxe azpira—, gure amaren hondarrak eramatera etorria. Larraundarrekiko

hainbeste arduragatik eta batez ere sekula ez bezalako afaria jan zigulako, bertan garbitzekotan egon ginen. —«Ginen» honek eztanda batek baino susto haundiago eman zion Joni belarri ostean—. Baina hurrengorako utzi genuen. —Berriz ere «genuen»—.

— Egia al duk hori? —galdetu zuen Elgak, Jonek arrapataka erantzunez:

— Bai, beno, osaba Bartelek zakurraren laguntza ere gu-ka adierazten din. Naturala dun hori, lagunik ez duena abereekin kidetzen baita.

— Hori ez. Afariarena esan nahi nian.

— Ah, bai! Lapurra dela bezain egia.

— Ez ikaratu, jaunak, garbitzekotan egon nintzelako. Egon nintzen, baina ez nuen egin. Ez naiz, beraz, erhalea, zeren, horrelako abortu frustratua eliminatzeak genealogiari mesede galanta egingo liokeen arren, pentsamendu hutsak ez baitu ez onik ez gaitzik egiten.

— Zer nahi duzue? —Idazkaria sutan zegoen—. Jendea berotu eta geu garbitu gaitzatela?

— Esan beza nahi duena. —Alkateak baretasuna eskatzen zuen berriro—. Berez aspertuko duk.

— Pentsamendua efikaza balitz, ez legoke zazpirehun eta zazpi bider hautsia izan gabeko birjinarik, ez ez Jainkoaren ama bera ere.

Ateraldi hau harrikada bat bezala izan zen, konkordura orokorreko osinaren hondotik barre puspulu batzuk atera zituena.

— Fidel Gaiztok zibilizazio berria sortzea erabaki du. Auzia ez da putei lana kentzea, denei eragitea baizik. Lana eta autohornitzea! Lana eta autohornitzea! Horra zibilizazio berriaren oinarriak. Autohornitzea! autohornitzea! Ja, ja, jaaa!

Algara hauek mikrofonotik Gernikako danbarrada zi-

ruditen. Larraungo ekintza militarretan ibilitako neskato-mutiko batzuk kioskoaren pinu adarrezko hesitik buruak sar-ateraka ari ziren.

— Hau duk hau lehendakaria, ez errege katolikoak eta mokordoak!

— Autohornitzea! Zer autohornitze eta zer buztan saltsa, ordea, sei musikariren doinura eta hamabi fusilen erritmora dantzatzen baituzue maitasuna? Fidel Gaiztok greba orokorra manatzen du!

— Subertsio ageria duk hau! —esan zuen sarjentuak—. Gertu atakerako!

— Bai, gure sarjentu!

— Odola eta izerdia! Arras debekaturik maitemintzea!

— Señor Olivejo!

— Mande, mi sargento.

— Jo hiru kornetada!

— Odola eta izerdia maite ez dituenak ez du maitemintzeko eskubiderik!

— Sí, mi sargento. Lau ere bai, behar bada.

— Plaga bukatzean, odola eta izerdia berkonkista ditzagunean, orduan mintzatuko gara maitasunaz.

— Señor Mordejuelo!

— Mande, mi sargento!

— Egin bi danbateko airera.

— Airera? Penagarria bi bala alperrik galtzea.

— Greba orokorra! Greba orokorra!

— Obedi ezak, herorren buruan probetxatzerik nahi ez baduk.

— Sí, mi sargento!

— Hil ala bizi! —klik klak—. Hil ala bizi!—Dinbi danba!

Herria, izuak itsuturik, ahal bezala aldendu zen plazatik. Ahal bezala noski, taketek ahal hainbat egur bana-

tzen baitzuten harrapatzen zuten bizkarrean. Fidel Gaizto, bera inguratzeko zirela igartzean, mikrofonoa plaza erdira jaurti eta eskola albotik gora ilunetan galdu zen.

— Su! Egin su!

Hamabi fusilen tiroketak udazkeneko orbeltzak astintzea eta kristal piloa birrintzea besterik ez zuen lortu.

Jon, taketen galjotzetik libratutakoan, tximistan abiatu zen osabaren atzetik. Kanposantuan gora deihadar larriak entzun zituen.

— Jon! Itxaron! Itxaron! Jon!

Elga Agerreko oilo pertsegitua bezain hatsangaturik zetorren.

— Lagunduko al didak?

— Nola ez, ba?

— Emaidak eskua.

— Bai eta besoa ere, nahi badun. Zer gertatzen zain?

— Ikarak hartu nik.

Jonek bortxaz estutu zion eskua.

— Ai! Zertan ari haiz, mandakume hori?

— Ikarak ahatz erazteko. Nahiago niken ni ere ikarak hartu banindu, sarjentuaren kulatak baino.

Joanaldi luzea egin zuten, isilik baina bizkor. Lehenengo muno bizkarra harrapatzean, Lezondoko argiak urrun ikusten ziren. Jaietarako jarritako farol ugarien argitara taketak bakarrik ageri ziren plazan, otsoak artegi hutsean bezala. Basoak segurantza ustea bihurtu zion neskari.

— Kulatada esan al duk?

— Gibel gibelean. Berak ere tamainukoa hartu din. Hanka artean ostikada bat eta luze utzi dinat.

— Sarjentua luze?

— Defendatu besterik ez dinat egin. Defentsarik onena punturik onenean atakatzea dun.

— Ederra egin duk.

— Hobe betiko ziztortu badun! Arraza hori esistitzea zoritxar haundia izanik, haundiagoa dun ugaltzea.

— Ezagutu al haute?

— Jakina! Eskola osteraino atzetik jarraitu zidanate.

— Astakiloak!

— Horientzat piropoa dun hori.

Mutilak, basa senaren bultzadaz, pausakera azkarra markatzen zuen. Naturaren sorburura abiatzen zirela zirudien, lehen ere naturatik aldendu gabeek bakarrik zezaketen irmotasunez.

— Zer deritzak zuen osabaren mitinari?

— Gauza batzuk eritzia baino aurreragokoak ditun.

— Esak, ordea, zerbait. Ona, txarra, ala dena delakoa.

— On-txarrak zer arrunten nolakotasunak ditun. Fidel Gaiztoren berbaldia ez dun ez ona ez txarra, jeniala baizik.

— Ez al zaik iruditu pitin bat burutik?

— Zer burutik eta zer ipurditik! Hi ere hortik? Zibilizazio berriaren lehenengo egitekoa jenio tradizionalen lekuan zoroak eta pailazoak jartzea izango dun.

Mozoloak uhu egin zuen, ahazkorrei bere gaueko hegemonia oroit eraziz. Bi hontz ere pare bat metrotara altxatu eta birundaka hasi zitzaizkien.

— Zer adur gaizto ziragartek hegada tentel horiek?

— Akaso beren ezti ilargitan zebiltzanan eta onenean hondatu ditinagu.

— Ea Larraun laster inguraturik dagokeela adierazi nahi duten.

— Iragarri gabe ere, bistakoa dun hori. Horrexek zemaion, ba, biribiltasun osoa gure osabaren jenialtasunari.

— Herorrek ere gaizki behar duk.

— Datozela! Larraundik gizonik eramatekotan, ehi-

ziekin burrukatu beharko dute lehenbizi.

Agerreko bide gurutzeko artapera heldu ziren. Zuhaitz zahar hura hamaika kontu gozo entzuna zen, pertsonei eusteko hainbat sendotu zenetik gora. Gau hartan, ordea, presak bentzutu zuen artapeko kutuntasuna.

— Gau on.

— Ez al didak musurik eman behar?

— Ez al dun entzun greban gaudela?

# AZKEN AFARIA

Jonek leihotik kuku egin zuen. Sukaldea olio zakardun kriseiluak argiturik zegoen, edo nabarturik, aireak mamu geriza dilindariz beterik baitzirudien. Ke beltzezko txorro zauliak sapairaino luzatzen zuen metxa, goian jotzean, sukaldean zehar mamukumeak hedatuz. Mahai gainean, kriseiluaren alboan, pistola zetzan. Bartel, eskuak sakelean, ormara begira. Jonek atzez ikusten zuen. Txakurra ere, aurreko hankak mahai gainean, begira zegoen, behin pistolara, behin ugazabaren aurpegira.

— Ez al hau horren begi beltzak ikaratzen?

Txikik halako zurikeriak egin zituen, ulertu balu bezala. Nahi zuena mahai gainera osorik igoteko aitzakia zen eta hala egitera zihoakeen, Bartelek muturretik atzeruntz sakatu ez balio.

— Ez dun mahai gaina txakurrentzat egina.

Sutondoan kokoriko, suari putz egin zion. Goporkada haundi bat ardo berotzen zeukan. Herriko eta inguruetako koartelek gizontxo haren harrapaketa antolatzen ziharduten bitartean, Jonek eupada egin zuen. Txiki senetik atera zen. Leihoan norbait, berak igarri gabe?

— Errekoino! Atetik etortzeko bildur al haiz?

— Etxeruntz pasatzean, argia ikusi dut eta eupada egi-

tea pentsatu dut.

— Pozten nauk. Ez zekiat zergatik, baina etorriko hintzela ematen zidaan barruak. Nola gelditu duk herria?

— Greba orokorra hasteko moduan.

Bartelek gustora barre egin zuen. Jonek sarjentuarekin gertatua kontatu zion.

— Beste kulatada bat ere pozik hartuko nuke, halako potroetakoa emateagatik.

— Apaizgaitegian erakutsi al zizkiaten teknika horiek?

Bartelen barreak etxe guztia durundatu zuen. Haizeen jainkoaren atsegina zerion, egundoko ekaitza leher erazi ondoren, Olinpotik itxasoaren asaldaduraz gozatzen bezala.

— Sarjentua luze utzi dukala. Konortedun ala konorte gabe?

— Ez neukan hura atenditzeko astirik, baina gabe uste dut.

— Lastima galanta! Kolpe dezenterik behin hartuko eta berean konortea galdu behar. Zer egiten duk hor? Hator barrura, gau haundia baita gaurkoa.

Sukalde leinutsu hari inoiz baino atabismoz kargatuago eritzi zion Jonek.

— Ba nian hirekin hitz egiteko gogoa eta premia ere.

— Bildur ala?

— Bildur? Zeren? Harrapa nazaten? Bizirik ez behintzat.

— Arin eta urrun alde egin beharko duzu orduan.

— Horiek ez inork ez harrapatzeko bezain urrun.

Bartel alboko gelara sartu zen. Jon urduri zegoen. Airea nondibait leher hurran zela ematen zion barruak, ez usteko zerbaitek krask egin behar zuela. «Zin egiten diat gogoratuko haizela aurtengo San Migelez». Su antzestral hark asmakeria hutsetan ari zela konpreni erazi

zion. Lehenago ere kinka larriagorik ezagutua zuen sukalde historitsu hartan. Larraungo historiko gau bat gehiago. Bartel ogi batekin itzuli zen, kolorean ere harria bezain gogorra zela igartzen zitzaiona.

— Zer pentsatzen hago?

— Suari begira nengoen. Sua zorabiagarri da. Ez zaharra, ez gaztea. Ez zaharra, ez berria. Su hutsezko munduan bizitzea gustatuko litzaidake.

— Hoa eguzkira orduan.

— Urrunago. Askoz urrunago. Mila miloi urtetako argitara gutxienez.

— Ez diate, ba, esaten sua eta bizia elkargaitzak direla?

— Lur atzeratu honetako kontuak dira horiek. Bizia bizi baldin bada, derrigor egon behar dute sutatik sortutako bizidunek.

— Apaizek eta fraileek, horrenbeste kopla gabe, ifernua deitzen ziotek horri.

— Zer ifernu eta zer turuta? Beste mundu batez ari naiz. Baliteke mundu hartarako jauzia heriotza izatea.

— Laster jakingo diat orduan.

— Hilko zaituzten bildur ala?

— Ni ez nik inork hilko. Neuk hilko diat neure burua.

— Zure burua zer?

— Urkatu egin behar dudala! —lepoa moztekoa eginez.

— Iso, iso! Atera ezazu garrafoia, berri hori astunegia baita, hutsean irensteko.

Bartelek goporkada ardoa sutatik atera zuen. Estalkia kentzean, sukalde guztia lurrun beroz bete zen.

— Ardoa eta emakumea dituk berorik sanoenak.

Mendibeko Lasundaz oroitu zen, salbuespenak araua baitesten duela eta.

Goporkada ardoa lurrezko erratilu zabalera hustu zuen. Eskuekin ezinik, belaunean apurtu zuen ogia.

— Hori jateko, hortzak mailuka sartu beharko.

— Laster bigunduko duk —Bi zatiak ardotara bota zituen—. Ardo berotan itotzea gustatuko zitzaidaan, baina pobreok hil ere ezin gustora hil, koino!

— Zer esaten ari zara?

— Eser hadi. Afaldutakoan mintzatuko gaituk horretaz.

Jon eseri zen. Bartelek beste afaldar bat falta zela esan zuen. Nor falta zitekeen Larraun Źaharren, mamuren bat izan ezik? Pare bat minututara itzuli zen, bere behi bakarra adarretik zekarrela.

— Behia sukaldera?

— Sukaldera ez, afaltzera baizik. Hamaika ez duinagok zapaldu dik sukalde hau.

Behiak zoko guztiak usnatzen eta ikusmiratzen zituen, nork jakin kuriositatez, harriduraz ala bildurrez. Zena zela, behi gaizoak txit arraro eritzi zion pertsonen habiari. Txakurra arretaz zegoen, eskuak mahai ertzera zituela.

— Igon hadi gainera!—agindu zion Bartelek—, gaur azken afaria baitugu. — Zer besterik entzun nahi Txikik?—. Baina formal egotekotan gero!

Jonek eskuinean behia, ezkerran txakurra eta aurrez osaba zeukan. Afaltzen hasi ziren. Txurik ogi erdi glausk irentsi zuen, bai eta ardo beroari beherakada ederra eragin ere.

— Oooo! Besteok ere edan behar dinagu! —hots egin zion Bartelek behiari.

Txikik muturraz ardoa ukitzean, muzin batzuk egin zituen, baina laster animatu zen. Joni higuina ematen zion lauek ontzi beretik edateak.

— Ekin! —esan zuen Bartelek—. Ez zegok hau baino urbanitate sanoagorik. Inork erreparorik edukitzekotan, berauek eduki behar likeate, pertsonen ontzian muturra

sartzeko.

Isil isilik jan-edan zuten. Txiki geldigaitza kolegiorik artezenean hezirik bezain formal zegoen. Ardo beroaren lurrunak, edan ahala, lauren buruak lilura erazten zituen. Arnasa hordigarri bilakatu zen. Joni inoizko erritorik zorabiozkoenean sarturik zegoela ematen zion barruak. Jakien eta jaleen, gizakien eta animalien, biziaren eta herioaren arteko mugak ezabatzen zituen erritoa.

— Eta? —galdetu zuen bukatzean Bartelek.

— Gutxitxo hala beharrik —erantzun zuen Jonek, txakurrari erratilua mihizkatzeko emanez—. Horditzeko harian nago. Ekarriko al dut gehiago geuretik?

— Ez zaiguk horditzerik komeni. Azken afariak barrua bero, baina burua argi behar dik. Jesukristok ere beltza botako zian, azken afarian horditzea otu balitzaio. Egia esan, nahiko hordituri egon behar, hala harrapatzen uzteko. Ba al dakik nolako amorrua emango dien Larrauneraino etorri eta inor ez harrapatzeak? Hirugarren egunean piztea baino adarjotze haundiagoa duk hori.

— Ba dago horretarako urkatzeaz beste biderik. Laguntzarik behar bazenu etorri naiz hain zuzen. Ihes egin eta mugaz beste aldetik sarjentuari eta idazkariari eskutitz bana idatzi, sano zaudela esanez.

— Ez didak ulertu. Nik ez diat gertatuagatik erabaki urkatzerik. Erabakirik neukalako agertu nauk Lezondoko plazan. Ulertzen?

Jonek gehiegi ere ulertzen zuen, baina tentel aurpegirik harrituenaz, ezetz erantzun zuen.

— Aizak! Ez diat harrigarikeririk nahi. Hiltzea nahi diat eta kito. Zer arrazoi? Bizitzen jarraitzeko arrazoiak bukatu zaizkidalako. Aspaldi ibili nauk neure burua hiltzekotan, baina beti aurkitzen nian aitzakiren bat. Huntza orma zaharrari bezala atxiki natzaiok bizitzari, zirritu guz-

tietako hezedura xurgatuz. Bukatu zaidak xurgatzekoa. Aldeko arrazoiak bukatzean, bidezko duk aurkakoei makurtzea.

— Jakin al nezake zeintzuk diren aurkako arrazoiok?

— Hona haundiena.

Bartelek sabela seinalatu zuen. Luzaz eztabaidatu zuten ez zela eta ba zela erremediorik. Jonek ez zela itxaropenik galdu behar, Bartelek ez zeukala zentzua galdurik, Jonek senda zitekeela, Bartelek gehiegi itxaron zuela alperrik.

— Gainera zahartzaroan sendatzerik ez nikek nahi ere, zahartzaroa bera baita aski gaitz. Ni ez nauk hik inoiz aipatzen ditukan filosofo edo direnak direlako horietarikoa, bizitzak zentzurik ote duen galdezka denbora galtzeko. Ni tratularia nauk. Orain arte irabazi edo parra egiten nian. Heldu duk garaia galtzen ari naizena, tratulari onak inola ere jasan ez dezakeena, eta tratua haustea erabaki diat.

— Ez al duzu erabaki hori desesperazio aldian hartu?

— Tratulari hasberrien kontua duk hori. Desesperazioa, jakina, ikusgarriagoa, liluragarriagoa duk, baina nik ez zioat horri funtsik aurkitzen.

— Hiltzea horren hozki onartzeko baino atxikiago zaude zu biziari.

— Ohitura gorabehera. Berez hiltzen direnak, gehienak behintzat, lasai hiltzen dituk, derrigorraren aurka desesperazioak alperrik direlako. Niri kostatu zaidana hiltzea derrigorra nuela sinestea izan duk. Hortik gora, gainbehera zuan dena. Gainera berez hiltzea baino interesgarriago duk norberez hiltzea. Jaiotzeko iniziatibarik izan ez genuenok bidezko duk hiltzeko bederen edukitzea.

— Pentsatu al duzu ondo bueltarik gabeko erabakia dela?

— Ni ez nauk hiltzeagatik hiltzen, bizitza uzteagatik baizik. Bueltagabetasuna arrazoi bat gehiago, beraz. Ba al dakik zer den gau madarikatuak betiko joanak direla pentsatzea?

Isilaldi luzea izan zuten. Behiari ez zitzaion, antza, hautu hura askorik axola. Sukaldean zehar zebilen, ormarik orma usnaka. Txiki ere gogaitu zen mahai gainean formal egoten. Gizalegeak utzi eta txakurlegeei jarrai, saltatzea pentsatu zuen. Orduantxe konturatu zen bere tokia mahaipea zela.

— Bai, ene koronela! —zioen sarjentuak telefonoz, gaueko ordu batetan.

— Dozena bat gizoneko eta zakurreko patruila bidaliko dizute, mendirako espezializatua —zioen beste aldetik taketen Probintzi Buruak—. Gainerakoak herorrek hornitu, Lezondoko eta inguruetako koarteletatik.

— Bai, ene koronela!

— Heriotzaz debekaturik operazioak huts egitea—. Gero eta abots burrunbatsuagoa zetorren entzutailura.

— Bai, ene koronela! Harrapatuko dugu, bizirik edo hilik.

— Hilik ez, bizirik baizik! —trumoikatu zuen abotsak.

— Bai, ene koronela! Bizirik dakarkegu.

— Gizon hori bizirik behar dugu.

— Bai, ene koronela!

— Besterik ezer ere ez!

— Ez, ene koronela. Beno, beste mutil bat ere atxilotu nahi nuke. Hanka artean mandoak bezalako ostikada eman zidan eta...

— Justizia ez duk xetasun horietaraino iristen. Norbere hankartea norberak jagon behar dik.

— Bai, ene koronela! Agindu, ene koronela! —Zegoen lekuan koadratu zen, pentsatuz: —Xehetasunak! Hero-

rrek ez huen xehetasun hau hartu!

Jonek ez zuen osabaren erabakia erabatekoa zenik sinestu nahi. Amore eman erazteko ahalak egiten ari zen, nahiz eta alperrik ari zela susmatu.

— Nik sinesten ez dudana da urdail eroriak bakarrik har erazi dizula erabaki hori. Ba da hamaika munduan gorriak ikusten dagoenik, baina ez zaio urkatzerik bururatzen.

— Arrazoi puntua duk agian. Ehizia eritzean, ez dik gaitzak hiltzen, inaktibitateak baizik. Pentsa ezak hanka hautsitako otsoa.

— Inoiz ez dut hurretik ikusi, baina pentsatzen nago.

— Pentsa ezak orain zer litzatekeen ardi ederrez inguraturik aurkitzea eta piztia gaizoak, bere hanka madarikatua tatarrez, batto ezin harrapatzea. Areago, ardi mutur luzeek korruan adar joka erabiltzea.

Bartelek zutitu eta erasokor jaso zituen besoak. Une huraxe izan zen, Jon gero oroituko zenez, gau hartan osabaren aurpegira amorrua agertu zen bakarra.

— Larraun adar jotze garbia zaidak! —hots egin zuen—. Emaidak Larraun berritzeko egunean bi ordutako ahalmena eta bizirik ziraukeat.

— Larraun berritu behar al duzu derrigor? Ba dira beste lan batzuk ere: lantegiko begirale, atezain, edo zer dakit, ba, nik? Edozer.

— Edozer ez duk Bartelentzako lana! Ez duk arranoa

barkilusaltzaile edo ahuntza postari jarriko.

— Ulertzen dut.

Isilaldi luzearen ondoren, Jonek galdetu zion:

— Ez al dizu minik ematen maite dituzunak uzteak?

— Nik ez diat inor maite, bizirik jarraitzeko hainbat behintzat. Aizak! Ba zuan gizon bat, aitak munduz mundu bidali zuena, esanez:

— Seme! Etxean jaio hintzen, baina bizimodua etxetik kanpoan atera behar duk. Gaurtik aurrera aitak ez hazake manten.

— Baina kanpoan non, aita?

— Ahal dukan lekuan, seme, ahal dukan lekuan edo uzten diaten lekuan.

Herriak eta munduak korritu zitian eta urdailak arazo gehiegi ematen ziola konturatu zuan. Hi, miru! Egidak habia pagorik haundienean. Urdaila ganibetez atera eta hantxe jarri zian. Itzel! Askoz azkarrago zebilaan. Laster konturatu zuan bihotzak ere —emakumeak, lagunak, haurrak... —gehiegi entreteni erazten zuela. Hi, uso! Egidan habia pagorik haundienean. Bihotza ganibetez atera eta uso habian ipini zuen. Basahuntzak baino jareginago korritzen zian. Baina urdaila eta bihotza aspertzen hasi zituan.

— Zer egiten dugu guk pago puntan?

— Itxaron apur bat. Laster hartuko zaituztet berriro.

— Emaidak jateko gehiago —kexatzen zen urdaila.

— Orain ezin diat. Bizimodua mendera dezadanean agian...

— Emaidak maite bat —eskatzen zuen bihotzak.

— Orain ez dinat astirik. Bizimodua mendera dezadanean agian... Gainera hik ba dun iloba bat.

— Hori ez duk gurea! Noiznahi kenduko zigutek.

— Ez! Ez zigunate kenduko.

Iluntzero bezala, pagadira joan zen batez, bihotza erorita aurkitu zuen pago orpoan.

— Ai! Zer gertatu zain?

— Iloba kendu zidatek. Apaizgaitegia eraman diate.

— Jaiki hadi! Betiko gaixotuko haiz hor.

— Emaidak beste maite bat.

— Ezin dinat. Ez dinat astirik. Gainera orain berandu

— Emaidak beste maite bat ala ez konta nirekin.

— Zertarako beste maiterik, berriro kentzeko?

Hartan urdila ere blast erori zuan.

— Hi ere behera?

— Aspertu nauk pago puntan.

— Baina nola ez didazue lehenago abisatu? Igon, otoi, berriro, urtebeterako bederen. Zuek hobeki edukitzeko modua egin arte.

— Ez! Ezin diagu. Berandu duk.

— Ai! Nireak egin dik.

Urdailari lizuna eta bihotzari goroldioa egin zitzaion.

— Senda gaitzak! Noiz sendatuko gaituk?

— Ezin diat. Neuzkanak gastatu ditiat.

— Asma ezak moduren bat, baina senda gaitzak.

— Iso! Sendatuko zaituztet. Zergetatik libre uzteko eskatuko zioat. Idazkari jauna! Azkenengo zergak ordaintzera natorkizu.

— Nola azkenengoak?

— Ezin dut. Ba dakizu zer egoeratan nagoen. Utz nazazu libre, mesedez.

— Libre utzi? Zer uste duk hik? Bapo geundekek salbuespenak egiten hasiko bagina.

— Baina nire kasua desberdina duzu, jauna.

— Ordaintzerakoan, kasu guztiak dituk desberdinak.

— Baina nik ezin dut, jauna. Urdailari arrain zuri pixka bat emateko ere ez zait iristen. Konpreni ezazu ez dauka-

nak ez daukala.

— Konpreni ezak hori herorren kontua dela, ez legearena.

— Legeak ezinik ere ez al du onartzen?

— Ezinak haintzat hartzekotan, erdiak libre utzi beharko genitikek. Probaturik zegok ezinak modu askotakoak direla. Jendeak, ordua datorrenean, ahal izaten dik, hik izango dukan bezala.

— Eskerrik asko, idazkari jauna. Goraintziak zure genealogiari eta hurrengora arte.

— Sendatuko zaituztet! Idazkari horri bost axola diozue, baina ez duk berearekin aterako.

Biotza saihespean eta urdaila sabelean berriro sartu eta ibiltzen jarraitu zian. Urteak joan, urteak etorri, bihotza kirikinotu egin zuan eta haren arantzeek urdaila zulatu ziaten eta gizonak ibiltzea utzi egin behar izan zian eta... Beno, luze lihoazkek zer hauek. Gainerakoa beste munduan kontatuko diat.

Jon mutu zegoen. Bihotzaren arantzeak, urdaila, zulatu, erori, iloba kendu...

— Zer? Ez al diok ezer?

— Zer esatea nahi duzu, ba? Ez dudala nahi erabaki hori bete dezazun. —Zutitu eta sentimenik haundienez erregutu zion: —Zatoz Larraun Berrira. Zuk inor maite ez arren ere, ba dira zu maite zaituztenak.

— Ezin diat. Goragalea ematen zidak. Gainera sentimenak bigentzia erlatiboa dik. Urtebete barru, ahazturik zaudekete nitaz. Denontzat hobeki. Ez nikek zuentzat karga izaterik nahi, nik ere, neure erara, maite baitzaituztet.

Behiak eskilarapean hazka ziharduen. Kolpera adarkada bat eman zuen, teilaturainoko zuraje zaharra dardaratuz.

— Oooo! —hots egin zion Bartelek—. Beltza lukek buruhiltzeko erabakia hainbeste kostatu eta gero, behiak etxea erautsi zuelako hil beharra.

Jonek gudua galdurik ikusten zuen. Zergatik ez daiteke gizonik berraltxa? Ezin zen, antza. Argudio moraletara jo zuen, ea agian sorginkeri arrastoren bat gelditzen zen osabaren baitan.

— Pentsatu al duzu bizia ez dela norberea eta...

— Oraintxe bota duk haundiena! —moztu zuen algaraka Bartelek—. Hamalau urtekin galtzua egin nuela konfesatu nian. Ederrak entzun nitian, hazi hura ez omen baitzen nirea, Jainkoarena baizik. Orduantxe jakin nian Jainkoa arra zela. Artoak eta gariak ere ez zituan, antza, gureak, urtero eramaten baitzizkiguten erdiak. Orain bizia ere ez dela nirea. Neu ere ez naizela nirea. To! Esaidak orduan zer den nirea, sabeleko minez eta zergak ordaintzeko obligazioaz gainera.

— Nik esan nahi nuena zen beste mundura zoazela eta horrela joatea ez dakit, ba.

— Ez diat hango edozeinen aurrean agertzeko bildurrik. Justizi apurrik bada, onartuko niate. Bestela ikasirik nihoak ezin dudana ordaintzen.

— Beno! Nire argudioak amaitu dira eta hor konpon.

— Hortik hasi bahintz, ez genian hainbeste denbora alperrik galduko.

Jonek ez zekien zer sentitu ere, pena, harridura, tristura, espektazioa, barregura ala ezer ere ez. Sentimenaren orpotik aterata, airean zegoen. Eskuak su inguruan igurtzika, biak sutondoan zeudela, Bartelek galdetu zion:

— Mesede bat egingo al hidake?

— Bai bi ere. Laster hiltzekoak ez du haundiegirik beharko.

— Hiltzeko hain zuen. Aizak! Ez zekiat neure burua

hiltzeko adorerik dukedan. Zergatik ez nauk herorrek hiltzen?

— Nik hil zu?

— Zergatik ez? Ez diat uste ezein moralek mesede egiterik debeka dezakeenik.

— Baina nola dezakezu?...

— Nola? Edonola. Haitzurrez buruan jota, ganibetez lepoa moztuta...

— Iso, iso!

— Iso herori! Eskena horri izugarri baderitzak, jar hadi nire larruan. Ganibeta hartzen diat, lepora hurreratzen diat, sakon sartzeko adorerik ez eta sastadatxo bat ematen diat. Berriro hasi behar. Odola ikusi eta bigarrenean pultsua dardar. Segi horrela, bat, bi, hiru, hamar, nork jakin zenbat bider.

— Zaude isilik, mesedez!

— Konpreni ezak hik ni hil nahiz nik neure burua hil, hiltze bera dela. Ez uste herorrek parte zuzenik ez hartzeaz, nire heriotzatik libre haizenik. Gertatzekoa berdin gertatzekotan, zer arrazoi duk ukatzeko?

— Ez dakit, baina ezin dut. Hor dituzu barbiturikoak. Loak hartu eta akabo.

— Nik ez diat logurarik. Behin hiltzekotan, ganoraz hil nahi diat.

— Ez konta nirekin. Beharbada egin beharko nuke, baina ezin dut. Zuk hiltzea erabaki duzu, baina nik bizirik jarraitu behar dut. Ez! Ezin dut!

— Nahi ez baduk, alperrik duk ekitea. Ikusiko diat nola moldatzen naizen.

Gaueko isilunerik luzeena izan zuten. Biak suari begira, nork jakin bakoitza noruntz zeraman tximinian gorako garrak. Jonek esan zuen:

— Ba al dakizu ez garela ezertan akort jartzen?

— Zer akordu nahi duk, ba, auzirik funtsezkoenean, hil ala bizi, desakort bagaude? Berdin zaizkidak bizien ardurak nahiz gorilandrearen hazkurak. Akordura heltzeko azken aukera emango diat.

— Esan!

— Bizitzan dena kendu nahi ziotenari hiltzean lur zati bat ematea adar jotze gehiegi lukek. Ez diat nahi nire bizitzari barre egin diotenek nire heriotzari negar egin dezaioten. Ehortz nazak herorrek.

— Nik ehortzi zu?

— Zergatik ez?

— Non?

— Larraunen berton. Iturraldean, haritz nagusiaren azpian.

— Ez al naute eraletzat joko?

— Ondo ehortzen banauk, ez dik inork ezer jakin beharrik.

— Egina!

Barteli barreak eman zion. Hura koadroa ikusiko zena Larraunen, biharamon goizean! Batailoi osoa beste gabe Fidel Gaizto hatzematera eta arrastorik ere ez inon.

— Pena bakarra zeukeat —esan zuen Bartelek—. Begirik ezin bizirik utzi, intxaur puntatik maniobrak ikusteko.

## BARTELEN TESTAMENTUA

Gauerdiko hamabiak aldean, Bartelek sutondotik sukalde erdira jauzi egin zuen. Bi aldiz pentsatzekoa eginik, esan zuen:

— Iberiako militarrak esan al duk? Zer deritzak haiei testamentua bidaltzea?

— Itzel! —erantzun zuen Jonek.

Bartelek alasak eta kutxa zaharrak arakaturik, lapitz muskil bat eta paper moduko batzuk aurkitu zituen. Joni eman zizkion, esanez:

— Eskola pixka bat ere ba duk eta ea nola idazten dukan.

— Bai, zer ipini esaten badidazu.

— Hori bion artean asmatuko diagu.

Izenburua ez zitzaien gutxi kostatu. Ohitura mekanikoz «Iberiako Militar maiteak» ipini zuen Jonek.

— Militar maiteak? —hotz egin zuen Bartelek, albotik begiratuz—. Etsaiak maitatzea, tira! Baina militarrak? Iberiako militar jaunak eta bi puntu. Ala Iberiako militar jaunak eta bi tiro? Iberiako militar aluak eta kito. Ala Iberiako akerrak beste gabe?

— Beno, hi! Oilarrak jo aurretik, jar ezak «Iberiako Ehizitegi militarrera» eta aurrera.

Jon lehengo papera sutara bota, berria hartu eta hasi zen:

«Iberiako ehizitegi militarrera: Zuen errobotak bila ari diren Bartel nauzue. Eskutitz hau hartzean, bilaketa bukatzeko balego, emazue amore, zuek egitekoa neronek egin baitiot neure buruari. Pena haundia dut zuen aurpegirik ezin ikusteaz, beti izan bainaiz zirkuzale amorratua, ehiziengatik batez ere».

— Oker gabiltzala uste diat —protestatu zuen Bartelek—. Ea ehiziekiko konparantzak kortesiazko tratamendutzat hartzen dizkiguten.

«Ohartzen naiz nolako krimena egin dudan, justizia neure esku hartzean. Bizia Jainkoarena eta Jainkoa zuena baita. Pena dut zuen gerra kontseilurik ikusi gabe hil beharra. Horregatik han esatekoak edo esaten utziko ez zenizkidatenak paperez bidaltzea pentsatu dut. Nire ilusiorik haundiena astebeteko muki multzoa zuen mahai gainera zintz egitea izango zen».

— Hori hobeki zihoak. Segi!

«Sokratesek, hiltzeko bazen ere, berak nahi zituenak esateko era izan zuen»

— Nork duk Sokrates hori?

— Greziako eta antxinate guztiko gizonik haundienetarikoa.

— Zer kristo axola zaiguk antxinako gizonik, auzoak ere apenas ezagutzen baititugu?

— Baina hau hiltzera kondenatu zuten, zu egingo zintuzketen bezala. Hala ere, berak egin zuen bere buruaren defentsa, bostehun epaileren aurrean.

— Bostehun epaile? Haiek mantendu behar zituen herriaren akabua!

— Haiek ez omen ziren herriaren bizkarretik bizi, beren lanetik baizik.

bidaltzekoa.

— Haitzurrera ohiturik dagoenarentzat, erreminta eskasa duk hau! —esan zuen lapitzari begira—. Nola zituan gure eskolako idatz arauak?

**Antes de Pe y Be**
**en ves de Ene**
**póngase Eme**
**Ene seme, ar ez eme**
**urdaiari harrak erne.**
**Antes de la muerte**
**cómase fuerte.**

**Viva Franco! Pater Noster**
**Hobe hilko balitz laster**
**Kyrie eleison, Kriste eleison**
**sei andre eta zazpi gizon**
**Zazpigarren bakarrari**
**bildu zaio gure Mari**
**Santa Virgo Virginum**
**Gure atsoa puta dun!**

— Euskaraz ez omen zegok emerik sartu beharrik, ez?

— Idatz ezazu gogoak damaizun bezala. Ez dira ortografoak eta gramatikariak idazteko eskubidea daukatenak, zer esana daukatenak baizik.

Kopiatzea bukatutakoan, Bartelek paperari zeharkara begiratu zion.

— Kasik berriro jaiotzeak ere merezi dik, honelako bat idazteagatik.

Sinadura kontzientziz bota zuen, aspaldian entrenatu gabe bazegoen ere. Errubrikatzat marra luzea atera zitzaion, izen-deiturak alderik alde pasaturik.

— Hau duk sinadura, hau! Beste munduan bakoitzaren bokaziorik errespetatzen badute, letra bakoitza militar bat den sinadurak botatzen ekitea eskatu behar diat, lepoen paretik ezpataz errubrikatzeko. Zarrast!

Jon papera gordetzera zihoala, Bartelek berriro kendu zion, esanez:

— Iso! Oraindik beste hiru sinadura falta dituk hemen.

— Beste hiru?

Jonen harriduraz, txakurrari deitu eta esku bata eskatu zion, Txikik biak eskainiz. Beso ezkerra papereruntz hurreratu zion.

— Ea! Formal gero! Horrela.

Txiki, eskolara ibili gabea izaki, ez zegoen halako eginkizunetara ohiturik, baina azkenean ugazaba nagusitu zitzaion. Bapo! Txikiren oinatza Bartelen sinaduraren ezker aldean geratu zen. Gero behia ekarri zuen. Abere gaizoa amonaren gelan zebilen, denbora nolabait eman beharrez, amaraunei puzka eta muturretan itsasten zitzaizkionak mihizkatuz, bere urbanitate arautegiaren arabera.

— Hiri ere heldu zain lehenengo eta azkenengo sinadura botatzeko ordua.

— Horren oinatzak ezartzekotan, agur gure papera! —esan zuen Jonek.

Bartelek, ordea, burua oker erazi eta adarraz sina erazi zion.

— Uztarritik sinadurara alde haundia, ez? Ederki!

Txuriren adar marka Bartelen sinaduraren eskuinean geratu zen.

— Norbaitek edukitzekotan, honexek zeukak adarra jotzeko eskubidea.

Gero ilinti bat kea zeriola ekarri zuen.

Suaren sinadura aurreko hirurak zirkulu beltzez inguratzea izan zen.

— Hona gure sinadura! —esan zuen, paperak Joni luzatuz.

Amonaren arreoko erloju zaharrak goizaldeko hirurak jo zituen.

— Hurrengo ordurik ez diat entzungo

Joni dardara sartu zitzaion. Paper, sinadura eta abar, gau hartako egia nagusiaz ahazturik zegoen.

— Lehenean al zaude, osaba?

— Aizak, mutil! —mintzatu zen azkenengoz Bartel—. Ordua heldu duk. Hoa ala hago, baina ez ezak eragozterik pentsa, neurekin etortzerik nahi ez baduk. Honetaz aurrera, ez diat neure buruaz erantzuten. Heure kontu txakurra eta behia. Gau on!

Bizkar emanik, sukaldean hara eta hona hasi zen, bakarrik balego bezala. Jonek ez zuen gau on erantzuteko adorerik izan. Astiro astiro, sugea leze burutik erretiratzean bezain kontuz, kanporuntz abiatu zen atzez. Atalburutik pasatzean, arnasa gabe zetorrela ohartu zen. Amonaren arreoko erloju zaharrak bigarren goizaldeko hirurak jo zituen. Jonek ataria beteko ilargiarekin topo egin zuen. Balkoipean gora begira jarri zen, hankak zabalik. Lasterrera zirristada entzun zuen. Ilargitik begirada jeistean, piz egiten zegoela konturatu zen, esku ezkerraren laguntzaz. Ohitura zaharra, ia egintza autonomoa, ilargirik ikusten zuen guztian. Ohitura hark ez zeukan hutsik izan beharrik, sukaldean gizon bat bere burua hiltzen ari zelako. Apo bat baldarki jauzika iragan zen, zirristadaren parabolapetik. Gelditzen zitzaion apurra ondo administratuz eta hobeki apuntatuz, apoaren bizkarrera egin zituen azken tantak.

— Hik ez daukak urkatzeaz arduratu beharrik, usterik gutxienean zapalduko haute eta.

Etxe albotik pasatzean, ezin leihotik begiratzeko ten-

tazioari eutsi. Izugarria ikusgarri baita. Etxe fatidiko hartatik bere burua ahalik urrunen egozteko premia sentitzen zuenaz batera, beste indar atabiko edo zerbaitsu batek bortxaz erakartzen zuen. Zorionez sukaldean ez zen oraindik hain eskena bildurgarririk agiri. Bartel, sutondoan kokoriko, txakurrarekin jolasean zebilen, behiak mahaia maiestatez mihizkatzen zuelarik. Txikik aurpegia harrapatu nahi zion, baina Bartelek muturretara putz egiten. Azkenez begiak itxi eta geldi-geldi jarri zen. Txikik leihaz eta nahi hainbat mihizkatu zuen azkenengoz ugazabaren aurpegia. Brast zutitu zen Bartel. Txakurrari eta behiari zeozer esan zien. Beheko gelatik ganibet luze distiratsua ekarri zuen. Gau hartarako apropos erosia? Ganibetaren ahoa besoan zorroztu eta lepoa moztekoa egin zuen. Erreminta ondo zegoen. Ataritik haizkora ekarri eta mahai gainean utzi zuen, ganibetaren ondoan. Halaber haitzurra, eta ganibetaren eta haizkoraren ondoan utzi zuen. Pistola hartu, eskuineko lokira apuntatu eta gatiluari eman zion. Ez zeukan balarik. Mahai gainean utzi zuen, ganibetaren, haizkoaren eta haitzurraren ondoan. Sega haundiari kirtena kendu eta hura ere mahai gainean utzi zuen. Txikik operazio guztia adi-adi jarraitzen zuen. Indar batek ihesera eragiten zion Joni, beste batek leihoa haustera eta sukaldera saltatzera. Garondotik belarrietara abots zurrunbiloa zebilkion. Koldarra! Eralea! Orain berandu duk. Ez duk! Inoren bizitzan sartzerik ez badago, gutxiago heriotzan. Herorrek hiltzea merezi duk. Bortxaz bizi eraztea bortxaz hiltzea bezain krimena duk. Ez zegok erremediorik. Bai, kriminala ez bahintz. Salta ezak sukaldera! Egik ihes leiho honetatik! Salba ezak osaba! Salba ezak herria, inork bere burua hiltzerik izan ez dezan.

Bartelek ispilu zahar bat ekarri zuen. Hari begira, lepoko zainak haztatu zituen, sast egiteko egokienaren bi-

la. Jonek ezin izan zuen begira jarraitu. Larraungo gailurretik lau haizeetara, lau arnasa sakon hartu zituen:

— Gizonak hiltzeko ere behar dik bizitzeko hainbat eskubide.

Haizeak eraman zuen

## 2

Sukaldeko kontraleihoak itxita aurkitu zituen Jonek. Kanpoko aldetik adi-adi jarri zen. Ez zen ezer entzuten.

— Ea damutu den eta bizirik dagoen oraindik. Isi! Zer duk hori?

Ezer eze ez. Bere pultsuaren taupaketa. Atariko atetik barruruntz, ilunpe osoa zegoen, ilargiaren kanpoko argitxoak eta bere asmamenak mamutua. Koldarra! Eralea! Zertara hator orain? Apur batean geldi egon zen. Argi zinta motel bat hauteman zuen beherean: sukaldeko atepeko argitasuntxoa. Ikarak hartu zuen.

— Ea erdi bizirik dagoen ate ostean, herori garbitzeko zain. Ondo merezia huke.

Hartan, hura sustoa. Norbaitek atzerik hara saltatu zion.

— Abisa ezak, koino!

Bere txakurra zen. Etxean gelditzeko agindu zion, baina hark obeditu ez.

— Puntu puntuan hator, bildurra erdibanatzeko.

— Osaba Bartel! —dei egin zuen gero, eskua kisketean zuela.

Inork ez zuen erantzun. Atea ireki eta behia aurkitu zuen atzez, sukaldearen erdian, bere txahal erdi berria balu bezala, Bartelen gorpua mihizkatzen. Txiki ugazabaren on-

doan zetzan hilik. Bartelen odol guztia edan zuen. Jonen txakurrak oinaze haundiko jirabirak egin zituen Txikiren inguruan.

— Sentitzen diat, Luki. Nik osaba galdu diat, baina hik ama.

Sukalde guztia odoleztaturik zegoen, Txikiren mihizkadurek ez baitzuten dena garbitzerik izan. Odol bide batek beheko gelara zeraman, amonaren ohe zaharreraino. Ohagaina, buru aldea batez ere, odolduraz beterik zegoen. Zenbat denbora eta pentsakizun egin ote zuen han? Beste odol bide batek, eskilaretan gora, Bartelen gelara zeraman. Hemen odoldura gehiago eta nahasiagoak zeuden. Bistan zegoen ohaperaino iraulka ibili zela. Komodako ispilu izurtua birrindurik zegoen.

— Zer diostan, ispilu madarikatua? —esan zion Bartelek.

— Orain berandu dela damutzeko.

— Nork esan din hiri damutu naizenik?

Ukabilkada amorratu batek ispilu berritsua betirako isil erazi zuen. Leihotik burua bota eta bat batean akabatzea ere intentatu zuen, kanpoko aldetik hatzazal arraskaduraz beterik baitzegoen orma. Baina lasterbide hartaz lotsaturik, pentsatu zuen:

— Behin hiltzekotan, ganoraz hil behar diat.

Sobera betea izan zen haren gogoa.

Amonaren arreoko erlojuak goizaldeko laurak jo zituen. Ordubete barru, bi gehien, Larraun Zahar inguraturik zegokeen. Jonek Bartelen gorpua lehenbizi eta Txikirena gero, elkarren gainean sorbaldaratu zituen. Zer gehiago? Haitzur nagusia, mutikotan gizon lanak egiteko ba zela ustez, amonari ostu eta bi egunetan gorderik eduki zuena, pala eta zakutzar bat. Iturri alderuntz abiatu zen. Behia atzetik zetorkion, bizkarretik dilindan zihoazen

Bartelen eta Txikiren buruak mihizkatuz. Ilargi beteak atzerik hara ematen zien. Pare bat metrotako geritza multzoa zeramaten aurrean. Geriza lazgarria, nola ikusten baitzituen ilargiak. Behin beste mundurunzko sentsazioa nabari zuen, behin mundu honetako justizi eta injustizi guztiak jazarrika zetozkiola, eta behin ezer ere ez, joan eta joan baizik.

Haritz baten kontra atseden hartu zuen. Ilargiaren argigerizek nabartutako hariztia edozer sujeritzeko moduan zegoen. Berdin zitekeen tragikoaren, ederraren, fantasiaren, arrunkeriaren, barregarriaren nahiz hutsaren adierazpena. Joni ez zion besterik gogarazi nolako perretxiko piloak han antxina batzen zituen baizik, eta nola, eskolaruntzean, haritz hartantxe ikusi zituen lehenengoz bi amilotx maitasuna egiten eta nola harrika banatu zituen, emeari mesede egiten ziolakoan. Aurrera jarraitu zuen, orbeltzan garraskots zarratua atereaz. Gizona ehorztea eta berria egitea ez dituk lan zailak. Goizaldeko laurak. Bigarren iharduki aldia.

— Hamaika espermatozoidek aurkitu dik oraingo bere bidea, eskolaruntz goizegi zihoan mutikoren batek harrika egin ez badie.

Bartel bankari nagusia eta Txiki haren emaztea izateagatik, munduari buelta osoa, atsedenik hartu gabe, emango ziola pentsatu zuen Jonek. Iturri ondoan gorpuak lurrean utzi zituen. Behiak mihizka eta mihizka jarraitzen zuen. Hogei metro beherago, erreka aldean, osabak esandako lekuan egin zuen zuloa. Biak elkarren ondoan ehortzi zituen.

— Ikusi arte, berriro ikusteko bagara.

Lur hutsa ipini zien gainean, piztu balitez ere, harria kendu beharrik izan ez zezaten. Azkenez, bere txakurrari ohar gogorra egin zion, hilobi hura azterkatzeko tenta-

ziorik izan ez zezan.

— Alperrik duk, Luki, hor muturkatzea. Ama galdutzat eman behar duk.

Lukik arretaz entzun zuen. Gero ikusi behar zer ulertu zuen.

Behia zen Larraun Zaharretik gelditzen zen bizidun bakarra. Muturrean eta buru osan hazka eginez, kontu luzeak esan zizkion Jonek.

— Sentitzen dinat, Txuri. Ugazabak hitaz arduratzeko agindua utzi zidan. Sentitzen dinat, baina hil egin behar haut. Nola ez didan adarkadarik ematen? —Behiaren nobletasunak malkoak atera zizkion Joni—. Emaidan adarkada bat, bestela hilko haut. Ez zezakenat jasan idazkariak eraman hazan eta hire okelak haziendakoak gizen ditzan. Hoa! Harraio errekari! Alden hadi lurralde honetatik!

Txuri sekula baino mantsoago zegoen. Ihesari eman beharrean, eskua mihizkatu zion. Jonek biak eman zizkion, azken guraritxoa ezin ukaturik.

— Baheki zer esku mihizkatzen ari haizen!

Haren mihiaren laztasunak bizkarhezurreraino zirraratu zuen Jon. Hala ere, egin egin behar. Burua zakutzarrez estali eta garondoan puntzetada segur bat emanik, abere gaizoa hankaz gora erori zen. Zulo haundi bat egin eta han gelditu zen hura ere betirako, ugazabaren eta txakurraren ondoan.

Jonek Larraun Zaharreko odoldura guztiak garbitu zituen, ezeren aztarrenik ez gelditzeko. Amonaren arreoko erloju zaharrak egunsentiko seirak jo zituen. Bigarrenak jo aurretik, Jonek pisuak kendu zizkion.

— Isil hadi betirako! Hilek ez diate ordurik behar.

## EHORTZIAREN BILA

### 1

Gaua egunari lekua uzten hasiz batera, herribeherak laino mamiz estaliak ageri ziren Larraundik. San Migeletako ajearen lurruna. Edo esne uholdea agian. Noren esnea, ordea? Batzuk ura ardotzeko ahalmena duten bezala, lezondotarrek ardoa esnetzekoa ote zeukaten, ba? Goiak garbi zeuden. Aralar, Aizkorri, Gorbea, argituz zihoazen, ekialdeko mendi katea batez ere. Egunsentia ikusgarri zetorren, baina ikusgarriagorik ba zen Larraun Zaharren. Berezteko hainbat argitasun egitean, etxea inguraturik ikusi zuen Jonek. Eskuak emozioz igortzi zituen, bere Belateko gailurrean. Laster komediak ikusi behar. Bat, bi, lau, hamar, hogeita hamalau gizon. Etxe aurrean sarjentua, beste lauk eskoltatua, bostek fusilak tente. Korrua estutuz zihoan apurka apurka. Ez zegoen handik ihes egiterik, tximinitik suziriz izan ezik.

— Horiek hartu behar diate amorrua, etxe hutsa inguratu dutela konturatzean —pentsatu zuen Jonek.

Asmatu baino biribilago zihoan dena. Sarjentuak eupada egin zuen. Inork ez zuen erantzuten. Turuta jotzeko agindu zuen. Larraun Zaharrek alderantziturik ematen zuen, kanpoarekikoak betirako eginik bezala. Bi fusil danbada. Alperrik. Bi bala gutxiago. Jonek bere txakurraren

zaunkak entzun zituen, haranetik bueltako oihartzun eta guzti. Bi danbada haiek Lezondoko txakur guztiak asalda erazi zituzten. Lainotzan gora, zaunkaketa zarratua zetorren mendira. Behin denak batera isiltzen, behin berriro egundoko eskandalua ateratzen zuten. Sarjentua eta bere laukotea, atea bortxatu eta barrura sartu ziren.

— Anfiteatroko ikuskizunak zozokeri hutsak zituan honen ondoan —pentsatu zuen Jonek—. Berrogei gizon armatu, gizon bakarra atxilotzera. Ez dituk berrogei mila, aginduak hala ipintzen ez zuelako.

Larraun Zaharren, bipia bakarrik gelditzen zen, eten gabe kirrinka, denboraren laguntzaz etxeari lurra jo eraztea pentsaturik. Bartel defuntuaren harrapaketa balentria nazionalen antologian geldituko zen betirako.

«Hemen nauzue koko plaga izugarri baten berri ematera etorria. Ez dute bihotzik, ez birikirik, ez hezurrik. Dena dute aho eta sabel. Izerdia eta odola. Edanago eta egarriago. Zomorro higuingarriak».

Ba zirudien Jon ikusten ari zena bera kontatu zuela osabak. Beste hamaboskote bat etxera sartu zen, sarjentuaren aginduz. Inor ez zegoela jakiteak ematen zien ausardiaz, etxea azpikoz goratu zuten. Haiei eskerrak, Larraun Zahar bipiak eta denborak erautsiko zuten baino mende erdi lehenago erori zen. Beste gizon bat, kaletar jantzirik, ikuilura sartzen ikusi zuen.

— Koino! Horra idazkaria. Hori duk leialtasun profesionala!

Hura, ordea, desengainua, ikuilukada ederraren lekuan, eguna pasatzera sartutako saguzahar pilo bat ikusi zuenean.

— Madarikatua! —hots egin zuen idazkariak—. Zin dagiat munduaren azkeneraino jazarriko hautala.

Eskerrak munduaren azkena baino harago zegoela

Bartel.

— Ikusten al dun, Txuri? —esan zuen Jonek—. Lurpean hilik hobeto hago, horren eskuan bizirik baino.

Une hartan Bartelen gelako leihoa ireki zen eta sarjentuaren burua ikusi. Gerotxoago bi balkoiak eta leiho guztiak taket buruz beterik zeuden. Etxe inguruko indarrak atarian pilatu ziren. Sarjentuak bi danbada bota zituen hutsera.

— Jaunak! Etxe honetan arratoirik ere ez da gelditzen!

Beste bi danbada airera. Batak teilatu hegala jotzean, leihoetakoek barruruntz saltatu zuten sustoz. Etxe aurrekoak ikaratuago zeuden.

— Etxe honetan ez dago bizi arrastorik! —hots egin zuen berriro sarjentuak.

— Ikuiluan ere ez! —erantzun zuen idazkariak.

— Etxe honi sua ematea litzateke bidezkoena —jarraitu zuen sarjentuak—, gure gorputz benemerituaren desohoragarri ez balitz.

Kulatada batez leiho erdi sastegira jaurti zuen. Parean firmerik gertatu zenak alboruntz egin zuen, diziplina baino bere burua maiteago izaki.

Goizeko zortzirak aldean, etxe eta etxalde errukarri utzitakoan, bilaketari utzi eta erretira jo zuen sarjentuak. Milkiades bere soldaduekin baino pausakera irmoagoz aldendu ziren Larraundik.

— Biribil! —esan zion Jonek bere buruari.

Tropa zuhaiztian behera ezkutatu zenean, egun berriari begira gelditu zen mutila. Fresko bezain argi zegoen. Gailur hartatik udazkena bere dimentsio osoetan ikus zitekeen. Irailak hogeita hamarra. Apaizgaitan, egun hartan, urtero igon ohi zen gailur hartara, oporrak agurtzera. Egun tristea. Aurreko urtean ere mendi hartantxe egon zen eguzkiaren sarreran. Behean, amona iturritik etxeruntz ikusi

zuen, balde zabala buruan, pausakera ahulez, ez eroriko, bai eroriko. Osaba Bartel txakurra lagun zuela, bere behi bakarra bazka erazten, behinola dozenaka zebiltzan landa zabalean. Apaizgaitegian ez zuen edukiko egunean hogeita hamazazpi tirrinots obeditzeaz beste giza eginkizunik. Urtebetean hara zenbat gauza gertatu zen.

— Hogeita hamazazpi tirrinetatik berrogei fusiletara ba zegok aldea.

Hartan, etxeko txakurra heldu zitzaion, arnasa estuka ito beharrez, buztana baino mihi luzegoa zeriola.

— Zer gertatzen duk, Luki?

Txakur gizoa sugandilaren buztan ebakia baino urduriago zebilen, esan guraz eta azaldu ezinez. Intziri larriak, mugimendu eragabeak, jauzi eroak egiten zituen.

— Zer gertatzen duk, Luki?

Jon mendian behera abiatu zen, txakurraren atzetik. Amaren deihadarrak entzun zituen bidean.

— Zer gertatu da? —galdetu zuen Jonek, etxera heltzean.

— Horixe duk hain zuzen nik jakin nahi nukeena —erantzun zion amak—. Zer gertatu duk Larraunen?

— Osaba Bartelen bila dabiltza.

— Osaba Bartel? Zer egin dik, ba?

— Lasai, ama. Osaba Bartel ez dute eramango.

— Eta heuk zer egin duk?

— Nik ezer ere ez.

— Nolako ezer ere ez? —Negarrari eman zion—. Sarjentuak hitaz galdetu dik. Herritik hintzela esan zioat. —Orduantxe gogoratu zen Jon bezperan emaniko ostikadaz—. Hire ordez anaia gaztea eraman diate.

— Anai gaztea eraman?

— Zer egin duzue? —galdetu zion berriro amak, solapatik heldurik—. Esaidak ala itoko haut!

Jonek gertatutako guztia kontatu zion, hitz hauekin amaiturik:

— Osaba Bartel bere behiarekin eta txakurrarekin datza, iturraldeko haritzaren azpian.

— Nik ez dakit ezer! —zioen Loren mutikoak, esturaren presioz. Ezpain ertzetik odol zirrista zerion kokotzean behera. Lau taketek erdian harturik zeukaten, koarteleko kalabozoan.

— Non duk osaba? —zioen sarjentuak, galderako matrailekoa emanez.

— Nik ez dakit ezer. Ni ez nintzen plazan egon.

Sarjentuak nekatzerik ez zuela nahi eta beste hirurei agindu zien, belarrondoko batzuna emateko.

— Ea oroimena argitzen zaion.

Hortz bat ahoan solte nabari zuen Lorenek. Ikararen ikaraz, ez zuen minik sentitzen. Lurrera erori zen. Hiru borreroek ostikoka erabili zuten, ukabilka baino erosoago zela eta.

— Nik ez dut ezer egin!

— Egin ez dezaan orduan! —esan zuen zakarki sarjentuak—. Hobe duk prebenitzea, damutzea baino.

— Nik ez dakit... Ai!

— Anaiaren berri ere jakin ez? Gezurretarako toki okerrera etorri haiz, mutiko. Eman!

— Ai! Nik ez dut ezer egin!

— Eman!

— Nik ez dakit ezer!
— Eman!

Jon koarteleko atean zegoen. Sarjentuak arrandia haundiz eta eskuketa ugariz hartu zuen.

— Ondo etorria! Ez dakik nolako gogoa nuen, hi ikusteko. Aurrera! Heure etxean hago.

Lizun usaineko pasabide ilun mehar batean zehar zeramatela, Jonek alto egin zuen ausarki.

— Sarjentu jauna! Egidazue nahi duzuena, baina lehenbizi nire anaia askatu duzuela jakin nahi nuke.

— Hori geure kontua duk. Heure buruaz arduratzea ere aski zaik hemen.

Kulatada batez, muturrez aurrera bota zuen. Sei metro luze eta lau zabaleko gelara, barka, zerritegira, heldu ziren.

— Lasai! —pentsatu zuen Jonek—. Hik ez daukak ezer egin beharrik. Berek egingo diate dena.

— Gogoratzen al haiz nolako ostikada zor diadan? —esan zuen sarjentuak, gailenki hurreratuz. Jonek atzeruntz egin zuen, orma jo arte, esanez:

— Gogoratzen al zara nolako gibelekoa eman zenidan lehenago?

— Ah, bai? Desorekaturik hagoke orduan. Laster berdinduko haut.

Idia erausteko moduko kulatada ezarri zion beste aldean. Hil orroa ito batez, lupua bezala okertu zen Jon, burua belaun arteraino sarturik.

— Oreka bihurtu beharrean, gal erazi egin diogula uste diat. Emaiok bergazo bat bizkarrean.

Dzist airean, zapla bizkarrean. Oraingo txilioa labaina bezain zorrotza izan zen. Lamina zaulia bezala arteztu zen, hain biziki non buru atzeaz egundoko kolpea eman baitzion ormari.

— Egik deihadar. Orma hauek sendoegiak dituk, bihozberatzeko. Jainkoak ere, ona eta ahalguztiduna izanik, ez dik gurekin konpromisorik nahi. Eusteko kemena emango dik akaso.

Sarjentuak bi pauso atzeratu eta gerrikoa askatu zuen. Brageta ireki, galtzontzilo sendoak beheratu eta hankartea bendaturik erakutsi zion, esanez:

— Ikusten hau? Ba al dakik hilabeteko paroa ezarri didakela?

— Bakarrik? —pentsatu zuen Jonek.

— Eta hainbeste denboratan geldi uzteko baino emazte tentagarriagoa dudala?

— Eros ezaiok aker bat, hik baino leunkiago tratatuko baitu.

Galtzontziloak eta galtzak berriro egokitu eta bi pauso aurreraturik, sarjentuak hots egin zuen:

— Gaurtik aurrera, Lege Zaharreko Justiziak puntu bat gehiago dik. Begiko begia, hortzeko hortza eta arraultzeko arraultzea.

Bere bost libera eta erdiko bortzegiaz, eman ahaleko hanka artekoa ezarri zion. Pulpa zakua bezain konorte gabe erori zen Jon. Sarjentuak eta lau laguntzaileek algaraka aldegin zuten.

— Itzela izan behar dik tortilarekin amets egitea.

Ba zen Lezondon Haitzarno izeneko leze bat, oso leiendatsua eta misteriotsua. Inork ez zekien zer sakonera zeukan. Ba ziren ifernuraino zeramala ziotenak. Gehienek lurraren erdiko sutegiaren tximinia zela usten zuten. Leze haren golkoan biltzen ziren fantasiak asmatutako izaki, gizaki eta piztia mitologiko guztiak. Hauek, jakina, oso barruan bizi ziren, itxasoa ureztatzen duten ibaien sorguetan. Etxe bakoitzak bere kondaira berezia zeukan Haitzarnoko harrigarriez. Etxean entzunaz gainera, haurrek berek, inork baino kontakizun haundiagoak edukitzearren, asmatzen zutena erantsiz gero, ez zen harritzekoa Haitzarnoko ahora hurbiltzea ere balentria nabarmena izatea.

Lorenek haundiena egitea pentsatu zuen. Entzuna asko bazen, zer izango ote zen ikusia kontatzea? Hamaika urte zituela, farola hartu eta sartzea pentsatu zuen. Ikaraz, baina lilura magikoak erakarriz, joan eta joan zihoan, leze zuloko zabal-meharguneetan zehar, munduko abenturarik aipagarriena burutzen ari zen kontzientziaz. Zer aurpegikera jarriko ote zioten etxean, eskolan, herrian, hura konta zezanean? Okerrena ez ziotela sinetsiko. Atzeruntz begiratu eta sarrerako argi izpirik ez zuen ikusten. Munduaren erdian zihoan gutxienez. Hobe badezpada heurt egin. Ibili eta ibili, irteerarik ezin aurkitu eta kandela amaitu zitzaion. Ilunpe osoa.

Galdurik zegoen. Sakoneko ibai marmarioa herensugearen irristakera begitantzen zitzaion, haitzei zerizkien tanta hotsak berriz muskerkumeen jauziak.

Haztamuka hasi zen, baina gelditu egin behar, estalaktitak suge buztanak eta haitz ertzak musker boskoitzaren

bizkarrak zirela pentsatzen baitzuen. Negarrari eman zion, gero garrasiari, baina ifernurainoko piztia guztiak asaldatzeko bildurrak berriro isil erazi zuen. Nola aurkituko zuten, ordea, isilik egonda? Gau guztian Lezondo osoa bila eta bila ari ondoren, biharamon goizean salbatu zuten mutiko gaizoa, Luki txakurraren usnari eskerrak.

Loren, iluntzeko zortziretan askatu zutenean, Haitzarnoko lezezuloaz oroitu zen. Berriro sartzekotan, zeinetara nahiago? Batera ere ez.

— Lehenago hil! —pentsatu zuen, burua bortxaz astindurik.

Baina derrigorra balitz, eta hiltzeko mesederik inork egin ez? Orduan dudarik ere ez. Herensugea eta musker boskoitza piztia balakariak ziren sarjentuaren eta haien ondoan. Oinen gainean ozta ozta etxeratu zen.
Ez zuen sekula gehiago ezer egingo.

— Baina to! —pentsatu zuen berehala—. Zer egin diat, ba, nik? Madarikatua! Ezer egin gabe kristorenak hartzekotan, hobe kristorenak eginda hartzea.

## 2

Hiru ordutara hasi zen konorteratzen Jon. Betazalak erdi irekitzean, begitzar baten begirada depresiboz inguraturik aurkitu zen. Lausotasuna pixka bat garbitzean, kalabozoko bonbila zaharra zela ohartu zen. Sare metalikoz babesturik, haren argiak argitasuna baino areago iluntasun gardena ematen zuen. Ilunpe itoaren larritasuna hautemateko hainbat argitasun doi-doi. Mugitzerakoan, hezurrak klakadaka hasi zitzaizkion. Orduantxe izan zuen lehenengoz hezurduraren esperientzia zuzena. Zementu lakarrean

zetzala konturatu zen. Zutitzean, aldamio erori bat altxatzen ziharduela pentsatu zuen. Orma kontrara tentetzea lortutakoan, gertatuaren oroitzak baino areago kolpearen durundioak hanka artera eraman erazi zion eskua. Bularhezur paretik belaunetara bitartea eremu hila zuen, kataklismoak dena enuldu balio bezala. Arnasa hartzean bakarrik igartzen zuen alde hartan ere ba zeukala gorputz zatiren bat. Eskuz ukitzean, ordea, ia berriro lurra jo erazteko moduko zartada orokorra sentitu zuen. Hiltasun hura ez zen, antza, eskua traizioz harrapatzeko tranpa baizik.

— Arraioa! Hauek ez zeudek zirrietarako!

Arnasa sakon hartzeari eman zion. Ariketa honek on egin bide zion, ormaren laguntzarik gabe tente egoteko gauza baitzen. Oraindik bere lanbrotasun mentaletik arras itzuli gabe, pauso batzuk ematera menturatu zen kalabozoan zehar.

— Oinez ahaztea besterik ez nikek behar.

Irtenbide gabeko zuloan zegoela onartu ezineko pizti bultzada instintiboz, goruntz begiratu zuen. Ez zen kanpoarekin zerikusirik zuen ezer ageri. Leihorik ere ez? Noizbait, orma gorenean, sapaia jotzen, kalabozoko belztasun orokorrean, beltzune karratu bat hauteman zuen. Sare metalikoa, burdintsarea eta harago iluntasuna berriro.

— Hortik ez zegok etorkizunik.

Bere esistentziaren erreferentziren bat aurkitu nahiz, erlojuari begiratu zion, baina eskuturra hutsik. Orduantxe gogoratu zen, kalabozora jaurti aurretik, solte zeraman guztia kendu ziotela. Atea jo zuen, zertarako pentsatu gabe. Inork ez zuen erantzun. Berriro jo zuen ahalik gogorren. Ate hotsek ola zahar baten deskatxarramendua ziruditen. Hurrengo joaldian burdina hotsak entzun zituen, gero eta hurrago. Anbotoko atsoaren biktimak betiere guztian katetzarrak arrastatzera kondenaturiko zuloan ote ze-

goen pentsatu zuen. Atea ez, baina leihatila ireki zen, oraindik burdinazko sare trinkoa gelditzen zelarik.

— Zer nahi duk? —galdetu zuen handiko aldetik aurpegia ala ipurdia zen antzematerik ez zegoen zerbaitek. Galdera honek pot eginik utzi zuen Jon. Zulo hartatik deitze hutsa ere aski ez balitz bezala. Azkena iruditu zitzaion gizona halako zulora botatzea, gero zer nahi duen galdetzeko.

— Zer nahi duk hik? —orroatu zuen zakarki aurpegiak edo ipurdiak, bigarrenez galdetu beharraren amorrua estali ezinik.

— Zer ordu den jakin nahi nuke.

— Zertarako behar duk hor ordurik?

— Gaua ala eguna den jakiteko.

— Eta zer koinotarako behar duk gaua ala eguna den jakiterik?

— Lurrean ala —brast itxi zen leihatila— lurpean nagoen jakiteko. Madarikatua!

Itxiera zakar harexek itzul erazi zuen bere egoeraren jabetasun osora.

— Zer nahi izan behar duk orduan hemen? —galdetu zion kalabozo itoari.

Biraoka hastea alperrik zen. Kalabozoan zegoen eta eustea beste erremediorik ez. Denboraren noziorik ez edukitzeak ez zuen denbora pasa beharretik libratzen. Mementuz ormetan aurkitu zuen entretenigarri polita. Era guztietako letrak, marrak, irudiak, karikaturak, elkar gainka, goitik behera, luzetara, okerkera. Urrundik egundoko zirriborro nahaspila ematen zuten lau ormek. Pintura abstraktuaren eta surrealismoaren nahastea, pintzelak hatzazalak izan zirelarik. Zikinkeriak eta argiaren horitasun motelak ia berezkaitz bihurtu zituen arte errupestre haiek. Gizonak, antxina haitzuloetan bezala, bere esistentzia

ormetan itsatsi beharra sentitu zuen han ere. Atekoak dezifratzen hasi zen. Hurreratzean, abstrakzio haiek oso zehatzak bilakatzen ziren.

«Oraintxe bete ditut bost egun eta lau ordu».

— Maratoi ederra —pentsatu zuen Jonek.

«Servi pide a lo choriceros que no sean tan pobres robando».

— Arrazoia! Pobreei asko kentzea baino hogen haundiagoa duk aberatsei gutxi ostutzea.

Bihotz bat zegoen gero, ohiko geziz zeharkatua, eta azpian: «Yoli, espérame».

— Orma hauetan bihotza marrazteko pultsurik duenak ba dik, bai, bihotza edo zeozer.

«Yo estoy aquí por gilipollas y nada más».

— Ba dakik. Politikan sartzen ez dena ere berdin sartzen diate hemen.

« Hementxe egon zer Arruza, alias Moxo. Gora Euskadi»

Beste batek: «Nik hartutako hostialdirik ez diot inori opa. Gora langileak!»

— Bapo gaudek hemengo hostiek ere kristauek jaten dituztenen berezitasunak badituzte, banatu arren ahitzen ez, zatitu arren txikitzen ez, eman arren gutxitzen ez.

«Aker, putakume, txibato aluak! Sinaturik: Edozeinek».

— Zirku ederrean sartu nauk.

Bat batean emakume buru bat aurkitu zuen, guztiz originala. Begitzat bi feto zituen, beren umontzi gardenetan kiribildurik. Sudurtzat gizon biluzia ahozpez eta buruz behera, hanka zabalduekin bekainak formatuz eta eskuak ezpain giltzetara. Alderdi bateko adatsa mugaz bateko Euskal Herria zen eta bestea mugaz bestekoa, bi adatsen marra banatzailea Bidasoa ibaia zelarik. Ezkerreko matraila

Aralar mendia zen, eskuinekoa berriz bolkan baten ahoa. Handik beherunzko aurpegia hiru letra hauek osatzen zuten: JON, O ahoa zelarik eta J eta N, matrailetan behera konoan estutuz, kokotzean biltzen ziren. Jon luzaro egon zen begira. Irudi haren egilearekin hunkigarriro kideturik aurkitu zen, bere izena hain sinbolismo bikainaren zati ikusten zuelako eta batez ere emakumea —propagandaren beita eta ninfo geldoen hobbya— eduki gurenaren adierazpena zelako. Renbrandt-en eta beste anitz pintore haundiren emakume biluzietan baino edertasun errealagoa eta idealagoa, bareagoa eta leherkorragoa aurkitzen zuen orma zikin hartan. Elga Agerrekoz eta oroitu zen. Kalabozoko emakume buruaren antz harrigarria, ia kidetasun osoa aurkitu zien denei, ez jakin emakume konkretuen ezberdintasun agorkaitzak irudi hura bizi erazten zuelako ala irudi harexek soma erazi ziolako sexu ahularen potentzia funtsezkoa.

Lau ormak ikustea bukatu zuen. Asko dezifratu gabe utzi zituen, baina oraindik izango zuen astia. Denbora erreferentzirik hartu ezin izan zuenez gero, —zenbat ordu, egun (agina mende, kordegabetasuna denboraz neurtzeak ez baitu zentzurik) ote zeraman kalabozoan?—, espazioan behintzat egoera bat finkatzea pentsatu zuen, konbentzionala bazen ere. Bere buruari barre egin zion paradoxa hartaz, hain mugaturik, hain hertsaturik egonik, orientazio bat sortu beharra sentitu zuelako, esistentzian deslai balego bezala. Lau ormei Iparra, Hegoa, Ekialdea eta Mendebaldea deitu zien. Orain behintzat ba zeukan gizakiaren ezagutzarik elementalena bezain oinarrizkoena, eguzkiaren norunzkoa. Orain behintzat gizakiaren lagunik leialenaren, itzalaren, egoera iruditzeko moduan zegoen.

— Hona hire lau puntu kardinalak!

Eskola denboraz oroitu zen, zeinetan, lau puntu kar-

dinalotara heltzean, ezin baitzuen ulertu ez zirela leku edo puntu zehatzak, inon hasten ez bukatzen ez diren errefe-rentziak baizik. Harbelean, gurutze baten lau ertzetan, lau inizialak ikustean, puntuak ez, baina puntak izan behar zutela pentsatzen zuen.

— Puntak ez, puntuak baizik! —zuzentzen zuen beti maisuak—. Puntu kardinalak egotez ez daude inon!

Jon mutikoarentzat inon ez egotea ezer ez izatea zen. Iturria, azkonar zuloa, Anbotoko haitza... hantxe zeuden, ez harago ez honago.

— Edo, hobeki esateko, egotez nonahi daude —berriro ere maisuak.

Nahaste gehiago oraindik, elizan nonahi dagoen bakarra Jainkoa dela irakatsi baitzioten. Puntu kardinal bakarra izatera, agian Jainkoaren eskol izena zela pentsatuko zuen. Baina lau ziren eta Jainkoak derrigor bakarra izan beharrez gainera, —ez zuen belarrondoko makala hartu Jainkoak ere jolaserako jainko lagun batzuk behar lituzkeela esaten deskuidatu zen batez—, nonahi daudenak lau izanik, elkarren gainean ibili behar. Eskolako lehen buru nahaspila hartan, auzia aisa atondu zuen, bere usteak golkoan gorderik eta liburuak zioena buruz berresanik. Geroztik hilabetera, puntu kardinalen kontua amak argitu zion, porru landareak sartzen ari zirela, eguzkia mendi ostean ezkutatzen ikusi zutenean.

— Eguzkia etorri datorrena ekialdea duk eta joan doana mendebaldea.

— Hori besterik ez al da guztia? —hots egin zuen mutikoak, maisua burutik zegoela pentsatuz.

Ateko leihatila berriro ireki zen. Burdina sarera bulto bat hurreratu zen. Ehizia barruan eta bizirik, edo ez hilik behintzat, zegoela segurtatzean, brast itxi zuen.

— Ez dituk beti begiratze hutsera etorriko —pentsatu

zuen Jonek.

Puntu Kardinalak asma berri zituen, laster hasiko ziren ordinalak. Ozta ozta zegoela tente igarri zuen. Mareoak eratzan aurretik, etzatea pentsatu zuen. Ahoz gora zegoela, lehenengoz ohartu zen trafikoaren hots sogor etengabeaz. Burrunbada zapalkorra, konkorgarria, motorren estridentziak eta zarata ezberdinek irentsirik, lurraren beraren durundioa zirudiena.

Noizik behin trailer diganteren batek trinkotasun leherkorra ezartzen zion dardara hari.

— Norbaitzuk ba zebiltzak hor goian ere.

Trafiko burrunbada urrun hark itxidura ez ezik, ehorzpen sentsazioa ematen zion.

— Harrak etortzea bakarrik behar diat.

Nora garraisi egin trailerren burrundada ozta ozta heltzen zen mausoleo hartatik? Lur azalean bizitzako trafikoak bere abio inpertsonala zeramakeen, kalabozo gainetik zebilela ohartzeke, non jendeari ez baitzitzaion iraupen sena besterik gelditzen, bizitzen jarraitzeko. Haurretako mamuak bururatu zitzaizkion. Baina lasai gelditu zen, haietatik behintzat libre zegoela pentsaturik.

— Mamuei, ilunetan bada ere, haizea sartzen den tokietan ibiltzea gustatzen zaiek.

Besoak begi gainean uztarturik —bonbila madarikatua!—, ezer ez pentsatzen saiatu zen. Bere baitan zeraman bikiaren kontraesan senez, ordea, ezer ez pentsatzerik pentsatzea aski izan zen pentsamentu guztiak arrapataka etortzeko. Osaba ehortzia, txakurra, behia, anaia gaztea, sarjentuaren aurpegia, —hurrengo aukeran herriko oilar guztiek lutua hartzeko modukoa emango zioat!—, borreroen bergak, Elga Agerreko, Iberiako militarrak, ama, aitaren izerdia, amonaren arima, deabruaren buztana, Larraungo azkena. Pentsamena helizea bezala jiraka ari

zitzaion, buelta bakoitzean oroitzapen berria bilduz, gero eta azkarrago, obsesiboago, ahultasun fisikoaren laguntzaz, abiadura zorabiagarriraino. Bekokia gori gori nabari zuen. Neurona asaldatuak sosegatzeko, buelta erdi eman zuen eskuinera, gorputza alboz beso gainean eta matraila zementu zikinaren kontra. Bat batean burua berotasun hura beste sentimentu bortitzago batek irentsi zuen. Higuina. Behetik gorainoko goragaleak eman zion. Hirugarren okadan multzo likin beroa aurkitu zuen ahotik zementura. Orma kontran brast eseri zen. Zikinkeria hura ez zen aurretik han egondako herkideen izerdiz, odolez, pizez, zirinez ere bai, eta hautsez egindako zarakar urtetsua besterik. Guzti hari tokiaren itotasuna eta airerik eza gaineratuz gero, mirakulua zen nola ez zion goragaleak lehenago eman. Urdailak oka egin behar, burua hango higuingarrikeriaz ohartuko bazen. Bere oka eginaren ikusteak eta batez ere kalabozo guztian zehar hedatuz zihoan lurrun epelak goragale berria eman zion. Zotin bizia eta zarratua etorri zaitzaion. Erraietako ordenu soziala irauli eta bat bateko matxinada orokorra zen hura, zeinetan alderdi guztiek ahotik irten nahi baitzuten.

— Ea neure burua oka egiten dudan.

Buruera honek matxinadari alderdi xelebrea erantsi zion. Barreari eman zion.

— Umore gabeko iraultza, gorringo gabeko arraultza. Pixka bat baretutakoan, bere oka eginaz lotsatu egin zen, ez baitzeukan hura non ezkutaturik. Giza eskubiderik aurrenengoak jana eta lana zirelakoan, hara non aurkitu zuen ba zela aurreragokorik.

— Gizonak organismoaren traizioz ateratzen zaizkion hondakinak inori erakutsi gabe estaltzeko eskubidea behar likek gutxienez.

Lotsarik eta era batera amorrurik gehien eman ziona,

ordea, munduko gairik nobleenaz higuindu zela. Aurretik han egoniko herritarrik duinenen izerdizko, odolezko eta zirinezko «zikintasunak» oka eragin zion hain zuzen.

— Hamaika jaitoki, diruetxe, eliza eta abar pasatu diat, goragalerik sentitzeke. Airea kutsatzen eta buruak eta sakelak huts erazten dituzten lurrinek atsegina eman eta izerdiak eta odolak goralea? Madarikatua! Alderantziz egina negok.

Okerrena berriz organismoa bera zela konplize nagusia aldrebeskeria hartan. Gehiago pentsatu gabe, oka egina jaten hasi zen. Sabelak, buruaren arrazoiez jabetu gabe, halako kontraerasoz erantzun zuen, non zaharrak eta berriak egotzi baitzituen.

— Honek ezin dik honela gelditu!

Ormak eta zorua mihizkatzen hasi zen. Sabelak lehen baino sumintsuago ihardetsi zuen, sudurretatik ere lizuna zeriola.

— Hirugarrena nagusi!

Alperrik, ordea.

— Dema irabazi ala Larraungo endatik ezabatu!

Lau, sei, zortzi, hamar, hamabi saio egin zituen. Kalabozoa zipriztinezko irlateria zen. Hamairugarrenez ere alperrik. Zenbaki gaiztoa izaki. Tradizio zaharraren arabera, hamalaugarrena omen da ekinaren eta ezinaren arteko muga. Eta hara, autosujestioz edo hamalaugarren ahaleginaren benetako ahalez, urdailak amore eman zuela. Ormak eta zorua gutiziz mihizkatu zituen, zakur gosekilak bezala. Odoldurak, bezturak, urteetan karealdi baten zain alperrik egonak, Jonen mihiak hezatu zituen lehenengoz. Pozik zegoen, poz haserrekorrez, poz agresiboz, dema haundia irabazitako atseginez. Haren organismoa, hots, bere burua, menderatua izan zen.

— Hau duk hau berreziketa!

Buruko neurona makurgaitzak ez ezik, sabela bera makur erazi zuen higuinaren eskala berrira. Zementu gainean etzan zen. Ezer ez pentsatzea lortu zuenean, leihatila ireki zuten.

— Begira nola lo egiten duen alu horrek! —esan zuen handik norbaitek.

— Ez nikek horren itzartzerik neuretzat nahi —esan zuen beste batek.

Borrero boskoteak kalabozotik «operazio gelara» eraman zuenean, kontsolamendu bat zeukan Jonek, alegia, ba zuela denboraren gutxi gora beherako berri bat, gehienean gauez hasten baitira egurketak. Ba zen gela berrian tramankulurik ugari. Jonek ez zuen ezertan arretarik jarri. Eskuak atzean bilurturik, ba zeukan bere baitan zer pentsatu. Zer esan? Nondik hasiko ote zitzaizkion? Lehen neurriz, bostek elkarri pistolaz jaurtika erabili zuten korruan, biraorik eta algararik lotsagabeenez. Ustez tenplaturik zeukatenean, batek hots egin zuen:

— Non duk osaba?

— Hauek ez zekitek ezer —pentsatu zuen Jonek—. Nola jakingo diate, ba, neuk esan ezik?

— Non duk osaba? —berriz ere indartsuago.

— Berrogei gizon beste gabe joan eta niri galdetzen —zapla matrailekoa— al didazue?

— Haiek turismoa egitera joan zituan! —zapla beste matrailean.

— Jakin al dezaket zer zerikusi daukaten matrailekoek osabarekin?

— Laster jakingo du, bai! —alderdi banatan beste matraileko bana emanez—. Non duk osaba?

— Matrail hauexen tartean! —erantzun zuen Jonek, mihia erakutsiz.

— Burlaka oraindik?

— Ba dator eguna, hortzak ere erakutsiko dizkizueguna, astazakiloi! —hotsegin zuen Jonek ahalik eta amorratuen, ea hala pixka bat nahaspilatzen zituen.

— Ah, bai? —orroatu zuen Polifemoren jatorriari zorrik ez zion batek—. Egun hori heldu zaik, adiskidea, horzkinik onenak baititugu hemen.

Fusil puntaz ahoa zabalik eduki eraziz, hortzak banaka limatu zizkioten. Kirrizkada haiek garunetan sarturik gelditu zitzaizkion hil arte.

— Edonon erakusteko moduko hortzak dauzkak orain —esanez jaregin zioten eta mutilak lurra jo zuen, arras durduriturik.

— Non duk osaba? —ekin zioten berriz, pixka bat seneratzen hastean.

— Zer esatea nahi duzue? Ba dakidala? Gezurra litzateke. Ez dakidala? Ez zenukete sinetsiko. Egizue nahi duzuena!

Berriro eskuz esku jaurtika erabili zuten, batek pare bat danbateko egin arte.

— Hurrengoa garunetara. Noiz ikusi duk azkenengoz osaba?

— Eraman nazazue epailearen aurrera, mokordo zati ibilkariok!

Jon ez zen bere errepikatik ateratzen. Epailea gora eta epailea behera. Egurraldi luzea eta anizkoitza izan zen. Bi ordutako kirofanoa, non bizirik ez galtzea hilezkorta-

sunaren garantia baitzen, ur izoztua, zartada elektrikoak, eskegialdiak eta abar. Borrero boskoteak hiru bider txandatu ziren. Egunsentia ba zetorren eta ez zioten ezer ateratzen, izerdia, odola, piza eta zirina besterik.

— Fardel honek ematekoa eman dik! —esanik, lehengo kalabozora jaurti zuten.

Ahoz behera gelditu zen, egoerarik aldatzen hasteko adorerik gabe. Izter artean bustidura epela eta mardula somatu zuen. Organismoaren pot orokor hartan gelditzen ziren erresistentzia bakarrek amore eman zuten eta isurki seminala, ahul ahulki, batere bultzadarik gabe, isurtzen eta isurtzen ari zen, biziak, gorputz hartaz etsirik, bere espermatozoideak deslai utzi balitu bezala.

## 4

Epailearen aurpegikera ez zen ez astuna ez arina, erkina baizik. Bibote zerrenda ihar harek bitika deselikatuaren tankera ematen zion, harixe eskerrak disimulatzen bazuen ere bestela merroago zitekeen muturraldea.

— Larraundarrok burutik eragin behar diguzue. Giza zentsotik piztienera aldatu behar ote zaituztegu?

— Barka, epaile jauna, baina larraundarrok, erasoak izan ezik, erasotzen ez dakigun piztiak gaituzu.

— Utz alferreko xehetasunak eta esak esatekoa. Epailea eskatu omen duk. Hemen nauk. Non duk osaba?

— Lehenengo eta behin, epaile jauna, ofizialki konsta erazi nahi dut zer ankerki torturatua izan naizen, ezeren errurik gabe.

— Torturatua? Errurik gabe? Horren azkar ahaztu al zaik sarjentuari eman hion...? —galdetu zuen meharki, izen haren omisiora behartzea ere nahiko hogen zela

adieraziz.

— Ba al dakizu berak nolako kulatada eman zidan?

— Hark ordenu soziala defendatu beharra zian.

— Nik ere neure burua defendatu beharra nuen.

— Ordenu soziala hire burua baino lehenago duk, gazte.

— Ez zen nire burua bakarrik, plazan zeuden guztiak baizik.

— Han zeundeten buruok zaudete pozik lehengo lepoan gelditzeaz.

— Eskerrik asko onberatasun horregatik, jauna. Zergatik ez diezue gauzei beren izena ezartzen eta ordenu sozialari masakre soziala deitzen?

— Gazte!

Epailea brast zutitu zen, kokotzeraino estaltzen zuen mahaitik. Haren merrotasunaz batera, agintearen bortiztasuna tentetu zen.

— Ahaztu egin al zaik epailearekin mintzo haizela eta bizi guztirako kalabozoan sar erazteko eskubidea dudala?

— Barka, epaile jauna, desneurritu baldin banaiz. Jota nagoela esan dizut eta ez dakit nola mintzo naizen ere. Horrexegatik lehenbizi konsta erazi nahi nuen...

— Bai! Ulertu diat! —Jonen aboskera apalak epailea bere aulkian eser erazi zuen, aire adikorragoa harturik—. Baina hik salatzea ez duk aski.

— Nork orduan?

— Ezin diat beste gabe hire esanik sinestu.

— Beste gabe? —Berriro berotuz zihoan mutila—. Gutxi al deritzazu gorputz munstro honi? —galdetu zion, amen batean biluztuz. Gorputz hark ez zeukan giza itxurarik. Aurpegia bakarrik utzi zioten erdi sano.

— Ni ez nauk teknikoa. Forentsearen agiria behar duk lehenbizi.

— Begiak ez al dira, ba, sobera teknikoak honetarako? Mediku sinadura uher batek sinets eraziko al dizu gorputz honek ezin duena?

— Jantz hadi agudo, errespetorik ezagatik auziperatzerik nahi ez baduk.

Jonek kinka bat izan zuen, epailea bertan itotzeko putz erdi falta izan zitzaiona.

— Iso! —pentsatu zuen berekiko—. Komisartegian hago, ez tiobiboetan.

— Non duk osaba?

— Aizu, epaile jauna. Zuek ez ezik, neu ere irrikitzen nago osaba non den jakiteko. Bildur naiz, ordea...

Esatekoa airean utzi zuen astunki, susmoaren aipamen hutsak ere ikara balemaio bezala.

— Zeren bildur?

— Hilik ote den.

— Hilik? Non? Nola?

Hara, epaile agurgarria. Plazako zer triste hura gertatu ondoren, etxera joan nintzaion, ez bildurrik gabe. Familian aspalditik genbiltzan osaba burutik hasi ote zen kezkaz. Gainera armaturik zegoela jakinik, pentsa nolako ikara eramango nuen. Baina joan egin nintzen. Senetik irtenda zegoen. Bere burua urkatzea ere aipatu zuen. Ez nion haintzategi hartu, azken aldion maizegi entzuten baitzitzaion halakorik. Pistolaz kokozpetik tiratzekoa egin zuen. Haitz, ahuntz, ehizi, ihesi, eta horrelako hitz solteak bakarrik ulertu nizkion. Bat batean, neure muturren aurrean, txakurrari tiratu eta garbi utzi zuen. Kontuz eta ez arian, kapaz baitzitekeen, ihesari eman banio, neuri tiratzeko ere, atariruntz urrundu nintzen. Hura arnasa, neure burua salborik ikustean! Horra, epaile jauna, nik dakizudan guztia.

— Ez al zezakeat susma gorderik daukazuela?

— Pentsa nahi duzuna, baina egia horixe duzu. —Eta berekiko pentsatu zuen:

— Egurrik gabe, hi baino argiagoa nauk, gorotz prijitu hori.

— Urkatu esan al duk?

— Pentsatzeak ere dardara ematen dit, baina horixe ulertu nion, eta aurkitu ez dutenean....

— Baina urkatu izan balitz, hantxe aurkitu behar zuaten gorpua.

— Zein hantxetan, ordea? Jainkoak daki nora jaurti duen bere burua. Hala ere, epaile jauna, lepoa jokatuko nuke bizirik dagoela. Lehen ere, aldikadak ematen zionean, egunak eta egunak pasatzen zituen, non zen ez genekiela.

Idazkariak esan ahala transkribatu zuen dena. Epaileak ere dena sinestu zuen, ofizialki behintzat. Idazkariak bozgoraz irakurri zuen. Konforme? Bai, jauna. Besterik ezer? Ez, jauna. Hirurek sinatu zuten eta paper bat gehiago artxibo nazionalerako.

Iluntzea zen, Jon libre utzi zutenean. Kaleak lehengo lekuan zeuden. Ez zegoen motiborik ere, beste leku baten egoteko. Baina Jonek denari deslekuturik eritzi zion. Kaleetan gora eta behera zebiltzan jendetzak koko eliak iruditu zitzaizkion, edozein unetan botatzar batek zapalduak izateko arriskupean. Edozein kaletan ireki zitekeen kalabozoetara zeraman sokaboia. Airea hain gogorkeriz kargaturik nabari zuen, non ez baitzen zigarrorik piztutzen ere ausartu, eztanda orohilgarria sor erazteko bildurrez.

— Onetik apartatu haiz.

Pausoa azkartu eta burua makurtu zuen, inorekin toperik ez egiteko hainbat bakarrik aurreruntz begiratuz. Larraunera lehen bait lehen iritsi nahi zuen, gertaeren abioa mendiko hatzemangaiztasunetik zelatatzeko. Agerretik pa-

satzean, ordea, eta ez berak nahi gabe, Elgarekin topo egin zuen. Mende desberdinetatik bildurik bezala elkarri begiratu zioten.

— Jo egin al haute?

— Ez al zaidan igartzen?

Jon, nekez baina prestuki, biluzten hasi zen, Elgak ez zela beharrezko esaten ziola.

— Begira!

— Eskerrik asko. Jantz hadi.

— Lagun ezaidan pixka bat.

— Sarjenturik ikusi al duk?

— Ikusi bakarrik? Nora begira hago, ba? Ez al dun ikusten nolako izter artea daramadan?

— Hireak egin dik —esan zuen Elgak irribarrez.

— Nireak egin? Jakin ezan poxpoloak bertan piztutzeko moduan dauzkadala oraindik.

## AMA ERE ERAMAN?

### 1

«Zerekin konpara zaitzaketet? Akerrekin? Kokodriloekin? Animalia bedeinkatuegiak, zeintzukin konparaturik asko irabazten baituzue».

Une honetan kapitain nagusiak ezpata atera eta halako ukabilkada eman zion mahaiari, non bere aholkulari nagusitzat zeukan gurutzea zazpi zati egin baitzen.

«Beste mundurako dudan ilusiorik haundiena zuekin konparagarri den zerbait edo norbait aurkitzea da. Bildur naiz, ordea, betiere osoan saiatuz, ez dukedala beste erremediorik, militarrak militarrekin konparatzea baizik. Tautologiak zentzurik duen kasu bakarra. Heriotzaren behintasunak hondatzen zaituzte. Zer lastima bi, lau, hamar, ehun bider ezin hiltzea. Horregatik, jendea behin bakarrik hil dezakezuela ezin jasanik, pixkanaka hil eraztea asmatu duzue, edo pixkanaka hilez bizi eraztea. Mendiko urruntasunak zuengandik salbo nendukala uste nuen, baina denborak ikus erazi dit Larraungo ipar freskoa ere zuen garaipen arkutik pasaturik datorrela. Hamar urte daramatzat pixkanaka hiltzen, baina ez nuke azken zastada zuek ematerik nahi. Nire gorpurik aurki badezazue, ez, otoi, jan nauen harrik kondena, haiexengan baitaukat nolabait bizirik irauteko itxaropena. Esker hau zuen izorraberata-

sunetik erdiesteko ustez, agurtzen zaituzte, bihotzez eta ipurdiz, Bartel Larraunek».

— Abortokume hori hementxe behar diat berehalaxe! —orroa egin zuen kapitain nagusiak.

— Eskutitzak bere burua hil duela dio, ordea —oharterazi zuen idazkariak.

— Orduan piztu egin behar da!

— Zein artikuluren indarrez, jauna?

Huraxe izan zen Kapitain Nagusiak Arautegi militarra lehen aldiz madarikatu zuena, halako kasurik prebenitu ez zuelako. Gurutze zatikatuari begirada lehergarria bota zion esanez:

— Penagarria Bartel delako hori Jesukristo ez izatea, hirugarren egunean harrapatzeko.

Berehala, bere kontzientziaren zehaztasunez, gurutze zatiak kontuz eta debozioz bildu zituen.

Egun hartan Iberiako hortz militar guztiek garraska egin zuten, Inkisizio Santuak azkenengo tunanteak erre zituenez geroztik, ez omen baitzen halako lotsagabekeriarik ezagutu. Biziengandik erasorik zitalenak jasatera ohiturik zeuden. Gerra kontseilu batean ezpatada batez konpontzen da hori, lege zaharren bat aplikatuz edo berriren bat asmatuz. Baina hilak matxinatu? Auziak, militar zuloak ez ezik, kalea ere harrapatu zuen, bai eta mundua ere. Bartelen testamentua ahoz aho zebilen nonahi, kanpoko prentsaren eraginez batez ere, eta kanpoan berriketak zabaltzen direnean, etxean ere zerbait esan behar. Madrilgo gobernua sutan zegoen, «kanpoko azpi indar aitorrezinek orkestaturiko propaganda antiespainiar hura» zela bide. Pardoko miru zaharrari ere tokatzen zen baino dozena batzuk luma gehiago erori zitzaizkion egun hartan.

San Migel errepetizioa, Lezondoko errementazioa. Inbasio garbia zen hura, Larraun epizentru zela inguru guztietara zabalduz zihoana, lezeak, amildegiak, sasitzak, haitzarteak eta gizonak bere burua hiltzeko hauta zitzakeen zoko eta zulo guztiak arakatuz. Egun guztian ez zuten lorratzik hartu. Sail guztietako taketez osaturiko tropa mardulak gutxi behar zuen sublebatzeko ere. Ba zebilen ahapetik marmariorik eta dioskadarik ugari.

— Bizi bat bilatzea balitz ere! Baina hila?

— Astebete usteltzen daramana gainera.

— Ea hurrengo hegazti, narrasti eta pizti haragijale guztiak harrapatzeko agintzen diguten, haien sabelean ote dagoen.

— Hori Ehiza eta Arrantza Baltzuak debekaturik zegok, ordea.

— Hor konpon! Ni apolitikoa nauk.

— Eta ni polito bizi nauk.

— Lotsagarria! —orroa egin zuen goitik tropaburuak—. Halako jendetza egun osoan beste gabe, eta aztarrenik ere ez. Ezteusok! Ergelok! Bizia balitz ere! Ihes egiten dakiena balitz ere! Baina hil bat! Aurki ezazue gautu aurretik, bestela...!

— Bestela herorrek aurkitu —ziotsaten ahapeka elkarri—. Zertarako duk horrenbeste galoi?

— Okerrena berriz, gorpua aurkitutakoan, arimaren bila hasi beharko dugula.

Ilargia, eguzkiaren aldentzea probetxatuz, harrotzen hasirik zegoen. Taketak gose ziren. Tropaburuak otamen

bana ekartzeko agindu zuen, bai eta linterna indartsu bana ere. Aurkitu ala hil. Ohore nazionalaren gorabehera zen.

— Ezkon hadi honetarako —esan zuen ezkon jiratik itzul berri zen batek—. Emaztea ohean erretzen eta norbera sasitzan urratzen.

— Ea bila gabiltzana hire emaztearekin datzan.

— Neuk ere —esan zuen beste batek— iluntzerako zita jarririk nian, baina hemen ageri denetik, pinu kontrara hustu beharko diat.

— Kontuz erretxinarekin!

— Eta inurriekin! Horiek ez dituk berehalaxe itotzen, behar ez den tokian sartuta ere.

Jonek Belateko menditik jarraitzen zituen mugimendu guztiak. Gautukakoan, linternateri haren joan-etorriek eta ager-ostenduek mamu argidunen ugalketa ziruditen, ilunaren babesean biziak beste mundura eramatera etorriak. «koko plaga izugarria... Dena aho eta urdail... ez hezurrik, ez bihotzik...».

— Ederra armatu diagu.

Argiak iturri alderuntz biltzen hasi ziren.

— Hotz! Bero! Berotxoago! Hotz berriro. Kostako zaizue!

Berbaro haundiz, argi prozesio luzea egin zen mendietan behera, errepideraino. Auto eta furgoneta ilada amaigabea martxan jarri zen, Lezondotik haruntz aldendurik.

— Gure amona gaizoak ez zian sekula pentsatuko Larraunen danbolina jo eta mundua dantzan jar zitekeenik.

Gauerdia zen Jonen laguna mendira heldu zenean.

— Berandu habil, mutil. Zer berri?

— Berri larriak, Jon, berri larriak.

— Nolako berri larriak?

— Gaueko azken telegunkariak esan dik Bartelen gorpua aurkitua dutela.

— Aurkitua dutela?

— Lehenengotan beren asmakeria zela pentsatu diat, baina neuk konprobatu diat.

— Hik nola henkien, ba, ehortzita zegoenik ere?

— Argazki eta guzti eman diate lekua, zuloa eta dena. Ez dik tropaburuak harrotasun makalez hitz egin, aurkikuntza azaltzean.

— Hori ere badiagu?

— Nola arraio ehortzi huen, ba?

— Behar bezala. Ez nian lurraren sabeleraino sartuko!

— Pentsa dezakek zer ondorio atera duten.

— Bartelek ez duela bere bururik ehortzi. Normala.

— Ez eta bere bururik hil ere, testamentuan zioen bezala.

— Nork hil behar zian, ba?

— Ez al duk asmatzen nor izan litekeen haren eraletzakoa?

Jonek burua makurtu zuen. Isilune luzearen ondoren, esan zuen:

— Beno! Horrek ez zeukak bueltarik. Hil ala bizi! Jar ezak jakinean gure ama. Anaia gaztea gorde ezak zeuenean, bestela kapaz dituk berriz ere huraxe eramateko.

— Ama bakarrik utziko al duk?

— Gure ama emakumea duk, ez apaingailua!

## 2

Jonek anizgarrenez begiratu zion erlojuari. Goizaldeko laurak eta erdiak. Ilargi laurdena Aralarko zeruertzean adarra sartzen hasirik zegoen. Beren lehen kukurrukua edozein kontingentziren gainetik jartzen duten oilarrek egun hartan ere normal iragarri zuten argiaren hurbiltasuna.

Larraun Berri nekez berez zitekeen, ilargiaren ausentziak utzitako iluntasunean. Ba zeukan, ordea, salatari zihur bat. Larraun Berriko txakurra lotan ere, begiralerik itzarriena baino fidagarriagoa zen. Esan eta izan. Lukiren bat bateko zaunkaketa biziak eten zuen gau luze hartako espektazioa. Etxe aurrera heldu zirenean, txakur gaizoak ito behar zuen, arnasarik hartzeko astirik gabe. Amaren gelako leihoa ireki zen. Atea ireki zenean, amaren irudia garbi berezi zuen Jonek, balkoipeko fokoaren azpian. Amaren lehenengo egitekoa, eta ez hain erreza, Luki isil eraztea izan zen, bere txabola txikira bidalirik. Hitz batzuk trukatutakoan, erdiak etxean sartu ziren bristi brasta, beste erdiak inguruzain gelditurik. Jonek argien piztetik jarraitzen zuen araketaren martxa. Minutu batgarrenerako, etxeko argi guztiak pizturik zeuden, ataritik ganbararaino. Lezondoko emakume gordin batez oroitu zen Jon. Etxea erdi hutsik zeukalakoan, halako araketa baten ondoren, komentario hauxe egin omen zuen:

— Sarriago baletoz sikira! Hau dun ugaritasuna utzi dutena!

Larraun Berriko araketa ez zen hainbesterainokoa izan. Ganbarako saguek astebeteko gose greba egin zutenaz gainera —ez protestaz, zulotik irteteko bildurrez baizik—, bi aipagarri gertatu ziren. Jonen logelan lehenengoa. Sarjentuak, ohea amorruz astindu ondoren, hara non erre-

paratu zuen liburu gorriska bat, gaumahaiko kutxan.

— Zer dun hau? —galdetu zuen, Jonen amari muturretara zakarki hurreratuz.

— Nik ez dakit, jauna.

— Hik ez dakin ezer!

— Ez da harritzekoa, jauna, ez baikenuen ikasteko erarik izan.

— Ba al dakin zer liburu den hau?

— Nik irakurtzen ere ozta ozta dakit, jauna.

— Hik zer dakin orduan?

— Nik lan egiten dakit, jauna.

— Liburu hau deabruak egina dun.

— Ni ez nau deabruak ikaratzen, jauna.

— Honek eta honen irakurleek hauxe merezi dinate. —leihotik behera bota zuen.

— Ondo egina, jauna. Neuk altxatuko dut gero.

— Ez dun altxatuko, sua emango baitiot.

— Hobe da, bai, sua ematea, suak hartzea baino.

— Hago pozik etxeari ematen ez diogunean.

— Ohiturik gaude horretara ere gerratetik, jauna.

— Non dun mutila?

— Neuk ere horixe jakin nahi nuke, jauna. Zeuek ez al zenuten eraman?

— Baina atzo iluntzean askatu zinaten. Ez al dun etxera agertu?

— Ez, jauna.

— Seinalea pekatua daukala, barrabanak! Libre utzi zuenak errua. Eta herorrek haundiena, zerrikume bat egin ez huelako.

— Hala izango zen, jauna, zure hazitik izan balitz. —Eskerrak sarjentua ez zela konturatu.

— Semeak egiten ez ezik, zaintzen ere jakin behar dun.

— Nik haurrak zila ebakirik uzten ditut munduan,

jauna.

Ikuilutik gorako hil orroazko dioskada batek eten zuen elkarrizketa. Huraxe izan zen bigarren aipagarria. Berrogei erraldeko zekorrak taket bat, albotik pasatzean, ostikada bat gibel gibelean eman eta simaurtzara eratsi zuen. Beste hiru ikuilu arakatzaileek nahiko lan izan zuten beren numerokidea arnasaratzen.

— Hemen pertsonak eta animaliak, denak dituk basakiak!

Egunsentia aurrera zihoan araketa amaitu zenerako. Atari bete taket pilatu zen. Jonek arnasa sakon hartu zuen. Bukatuak ziren bizitza etengabeko bilaketa dela ziotenen bitxikeriak. «Bilaketa porrokatua». «Bilaketa asperkaitzean erre zuen bizia». Hamar urtetan zehar entzundako hitz hauen oihartzunak zetozkion, taketak etxe aurrean ikustean.

— Norbere bila datozenean probatu nahi nikek bilatzaile horien tenplea.

Hartan, ama hauteman zuen atalburuan, sarjentuak besotik zekarrela. Atariko multzoa erdibitu egin zen, bidea uzteko. Segundu batzuren barruan, tximistaketa izugarria ari zen Jonen baitan. Hura ez zitekeen izan! Nola baina? Ama erdian harturik, ba zihoazen etxe alboan zehar. Jonek begiak bortxaz igortzi zituen, espejismoren bat ote zen. Baina ez. Egia zen. Eraman zeramaten!

— Ama jendaila horren eskuetan? Lehenago edozer!

Edozer hura, ordea, bakarra zen: deihadar egin eta entregatu.

— Entregatu? Ez horixe!

Baina ba al zen beste biderik, amarik eraman ez zezaten? Txakurra ez zen aiko-maikotan ibili. Etxekoandrea ba zeramatela ikustean, itsuki oldartu zitzaion tropa osoari, halako amorruz, non amen batean lau berna hozkatuak

baitzituen. Indarren balantzea kontra zeukan, ordea, eta fusil danbada batek garbi utzi zuen etxazain leiala. Danbada harexek eta Lukiren heriotza heroikoak atera zuen zalantzatik Jon.

— Hori ez duk horrela gelditukoǃ

Mendian behera itsumustuan abiatu zen. Haiek haren oztopo saltakerak eta zuhaitz zeharkatze zorabiagarriak! Beheko gelako orman iltzetik zintzilik zegoen eskupeta hartu, kartutxorik lodienez kargatu, kartutxontzia bete eta etxe azpiko zuhaiztian zehar abiatu zen. Tropari behe aldetik aurrea hartu eta bide oste egoki batean kukutu zen. Han zegoen zelatan, otatza trinkoaren babesean, Larraun Berriko leopardo gaztea. Lekuak ez zeukan aitzakirik. Atzean aldasbehera erripea zegoen, ihesari eman beharrik gertatzekotan. Aurreruntz ikuspen luzea zeukan. Eskupeta ahoa bidea jotzen ipini zuen. Beraz, metro erditik bi metrotara harrapatuko zituen. Lau kilometro itokarrean eginda gero, ozta ozta kabitzen zen otatzan, arnasa estuaren estuz.

— Hemen ez zegok huts egiterik, tiroak atzeruntz irten ezik.

Tropa berbaroa gero eta hurbilago zetorren. Ez zitezkeen urrun izan. Bai! Han zetozen, berrogeita hamarren bat metrotara. Ikustea eta arnasa gelditzea bat izan zen. Ama erdian zekarten eta elkarri orpoak zapaltzen zetozen. Kulata paparrean finkatu eta tiratzeko egoeran plantatu zen. Berrogeita hamar metro haiek hotsaren marra luzetara irristatzea bezalatsu izan ziren. Bihotzak eskupeta nabarmenki taupatzerainoko zartadak ematen zizkion.

— Geldi, koino, hik ez baitun tiratu behar!

Ez zen ausartziarik eza, ez zen benetako orduan arrazoiek eta adoreak huts ematen diotenaren nobatokeria. Arratoiei baino begiramendu gutxiagoz tiratuko zien. Bai-

na ama? Taketen artetik haren irudia osorik erreparatu zuenean, barrua marro gelditu zitzaion, amari apuntatzen zegoela ikustean. Etxekoz jantzirik zetorren, mantala pixka bat albokera eta adatsa zapi beltzaranez baturik. Halako zirrada eragin zion, non munduko ezduintasun guztiak huts iruditu baitzitzaizkion haren duintasunaren ondoan. Hogei metrotara zetozen. Segundu gutxiren buruan, tiratu egin beharko. Eta ama ere garbitzen bazuen? Kasualitate haundiegia zatekeen ama ez beste guztiak garbitzea.

— Koldarra! Esak ez dukala barrabilarik eta egik ihes.

— Ez, inola ere ez!

— Ez haiteke mentura heure ama garbitzera. Armada guztien heriotzak baino gehiago balio dik horren biziak.

— Aitzakiak! Posibilitate hutsa besterik ez duk hori.

— Baina zihurra.

— Zertara jetxi haiz orduan menditik?

Hiru metrotara zetozen, marmarketa baldarrean, otatza barruan berentzat hil-biziko ezbaia eskupetaren zulotik ebaztear zegoela somatzeke.

— Tira ezak!

— Ezin diat!

— Bai ahal duk!

Amaren mantal ertzak eskupeta punta irristatu zuen.

— Oraintxe! Su! Ez! Bai! Ez zegoen zereginik. Tropa hamar metrotara zihoan, erremediorik gabe urrunduz.

Hain tentsio gogorraren ondoren, halako frustrazioa nabari zuen, non gorputz eta gogo pot eginik erori baitzen. Bere buruari tiro bat ematea pentsatzeko hainbat adore gelditu zitzaion soil soilik, ez, ordea, intentatzeko ere kemenik. Luzaro gogoa zuri eta gorputza enul eduki ondoren, pixkanaka zuzpertzen hasi zen. Ama bizirik zegoela eta agian ez tiratzeaz ongien egin zuela pentsatzeak seneratzen eta bere buruarekin berriro identifikatzen lagundu

zion.

Luki han zetzan luze, alanbresiko esol oinean. Joni, hura ikustean, berriro alde egin zion arnasak. Aurrean kokoriko, begira begira egon zitzaion luzaro.

— Ni baino gizonago portatu haiz.

Kontrasteak senti erazten zion apalmendua baino askoz haundiagoa zuen atsekabea. Berak ere ez zekien bere laguntxoa zenbat maite zuen. Animaliena heriotzaz bukatzen omen, gizakumea, ordea, hilezina eta zenbat gauza gehiago. Behatzetatik bururainoko suminez berotu zitzaion odola, bere destinoa txakurrengandik banatzen eta taketekin —giza esentzia sorginen baten indarrez— batzen zuten teoria guztien aurka. Lukiren gorpua muturretik buztaneraino ferekatu zuen eta heriotzak ere hautsi ezineko elkartasuntzat, belarrira putz egin zion.

— Gu bion destinoa, Luki, hutsa nahiz betea, bakarra izango duk.

## MUGAZ HANDIK

Honelakoxe mahaikadak zerbitzea gustatzen zaidak niri —esan zuen tabernandreak platerak bilduz—. Bi egun triste biziko eta berak jaio izanaren damuz eta hiltzeko bildurrez pasatuko ote ditugu, ba?

Jantokiko giroa bizituz zihoan. Hiru arkume janak zituzten hirurogei lagunen artean. Azaroko gau fresko, ia hotz eta guzti ere, leihoak zabalik zeuden. Hitz hainbat barre eta entzule hainbat esale ohi den puntura helduak ziren. Lehenengo txanpan kortxoa, bonbila huts egin eta sapaia jorik, mahaira erori zen, algara orokorrean galdua.

— Hori, hori! Beste bat! Danba! Ezetz jarri begia! Baietz! Pun! Ja, ja, ja!

Sudurrean eman zion. Beste botila bat. Hura zen punpaketa.

— Gerrak txanpan botilaz egiten direnean konponduko duk mundua.

— Danba! Pun!

— Beste bat!

**Maiteminak hil zian**
**bart gure mandoa**
**gaur beintzat konpondurik**
**diagu mundua**

— Beste bat! Danba!

**Bizitzen hainbat hiltzen**
**laguntzen dik lanak**
**eskerrak animatzen**
**nauela edanak.**

— Hori, hori! Ireki hamairugarrena!

**Biluzik jaio eta**
**jantzirik ehortzi**
**zurrut baten ondoren**
**muturrak igortzi.**

Lezaldeko neska-mutilek urteak zeramatzaten lantzean halako afari bat egiten. Gazteen afaria deitu arren, ba zen han gaztetxorik eta sasoikorik. Gau hartan ba zen beste berritasun bat ere. «Handiko» ere tartean zen. Lehenengotan «Mugaz handikoa» deitzen zioten, baina laburkuntza legeak laster utzi zuen «Handiko» hutsean.

— Nongoa haiz?

— Euskalduna.

— Nongo euskalduna baina?

— Mugaz handikoa.

Handiko deiturak ezin hobeki definitzen zuen Lezaldetarrek Joni buruz zeukaten ustea. Hilabete eta erdi inguru zen Lezaldera jo zuela eta taberna hartantxe zegoen ostatuz, besterik erabaki arte. Lezalderaino ere Fidel Gaiztoren berriak iritsiak ziren, baina inork ez zekien Jon haren iloba iheslea zenik, tabernako alaba Luzelek izan ezik. Afaldar haietariko edozeinen etxean gerta zitekeen Larraunen gertatua. Alde bakarra agian, umaldi bereko tigreetan odola ikusi duenetik ez duenera dagoena. Bera odola

ikus berri zen, baina hura ez zen pentsamenari ibiltzen uzteko lekua. Mutil gordin bat mahaiaren handiko puntan zutik zegoen. Bere txokorrari tengadaka eta arranoaren hegada nagia imitatuz, isiltasuna eskatzen zuen. Sei bider alperrik hasirik, baina gero eta ozenkiago kantatuz, noizbait lortu zuen jantokiko zurrunbiloa menderatzea:

**Hasiko al naiz hasiko al naiz**
**hasiko al naiz hasiko**
**Hasiko al naiz hasiko banaiz**
**hasiko balnaiz balsiko.**
**Hasiko al naiz hasiko banaiz**
**halsiko banaiz balsiko**
**hasiko al naiz hasi naiz eta**
**............**

Jende guztia isiltasun espektantez zegoela, pot egin zuen gaizoak, esanez:

— Segi beste batek orain! —eta bere tokian eseri zen, algaraz eta txaloz inguraturik.

— Bai penagarria hiru hitzen faltan gelditzea! —esan zioten.

— Berak zailenak, ordea! —erantzun zuen hark—. Bukatzen jakinik, ez nikek kontrariorik.

Ez zirudien pot hark askorik eragin zionik, aitzitik, ordea, Rommelek Afrika konkistaturik baino gozamen haundiagoa nabari zitzaion, bere txokorraren laino artean.

— Hauxe izan duk gauza xelebrea! —pentsatu zuen Jonek—. Zer pentsamendu ote zebilek horren buruan?

Ez zuen berriz ere pentsamenduetan sartzeko astirik izan, beste mutil bat baitzegoen zutik, kantuz hastear. Luzea, argala, aurpegi zimurtua eta triste samarra. Jendearen bat bateko isiltasunak mutil hari begirune haundia zitzaiola pentsa erazi zion Joni. Berari ere zirrada egin zion

hain irudi perfilatu hark, batez ere kantatzen hasi zenean:

**Bizitzak zazpi alderdi ditu**
**bi serio bost komiko**
**bi hoik kentzerik lor bageneza**
**bizi gintezke polito.**
**Bizi bagara, hil ez bagara**
**ez ginen jaio betiko**
**umore honek aileza iraun**
**gure bizitza guztiko**
**Lezalden pozik aurki hadila**
**opa diagu, Handiko.**

Oraingo txaloaldia lehengoa baino gartsuagoa izan zen. Denek Handikori begiratu zioten. Jaiki eta honela erantzun zuen:

**Ardoak zazpi begi emanik**
**kentzen dizkigu bi zango**
**asko ibili behar duenak**
**ez du askorik edango**
**Lagunarte hau maite dut auntzak**
**mendia baino geiago**
**Lezalden dena poz bazait ere**
**gauza baten penaz nago**
**nola ez dudan herri polit hau**
**maite izan lehenago.**

Txaloaldiak ez zeukan azkenik, inork ez baituzen espero Handiko bertsolari izan zitekeenik. Mutil argalak berriz kantatu zuen:

**Hau ustekabe uste gabea**
**eman diguna Handikok**
**haizeak nondik jo lezakeen**
**ez jakin sarritan inork.**
**Zorionean huen, Haitzarte,**
**lehen bertsoan egin pot**
**hasi ta amaitzen dakienari**
**lekua utzi baitiok**
**lezaldetarron belarri finak**
**alegra ditzagun biok.**

— Ea, Handiko! Jo eta ebaki! —hotsegin zioten eupadaka.

Handiko aitzakiak jartzen hasi zen. Bera ez zela bertsolaria, buruz kantatu zuela, entzuten pozago zegoela eta abar.

— Nolako ezetz? —esan zuen ostatuko alabak, Jonen ondora etorririk—. Hementxe itoko haut, kantatzen ez baduk! —atze aldetik bi eskuak lepoan ezarririk. Jon begiak itxi eta kantatzen hasi zen:

**Gorputz osoan dantzan dabilzkit**
**Akelarreko sorginak**
**ba dantzut haien oinots zolia**
**algarazko irrintzinak.**
**Buztan buruzko saldak sendatzen**
**ditin bihotzeko minak**
**zein esku finen kili-kilia**
**lepoan sentitzen dinat?**
**Gaizki kantatzen badut errua**
**hatzeman nauen laminak.**

**Zugarramurdin Aker-Atsoek**
**besarkatu dute elkar**
**milaka sorgin eta deabru**
**gure Bidasoak dakar.**
**Urperik urpe hasi dituzte**
**hamalau dantza militar**
**berrehun oinaztu hirurehun trumoi**
**iraul hadi, muga zatar!**
**handiko eta hemendikoak**
**gaitezen Euskadi bakar.**

Haitzartek erratz haundia koinakez busti eta sua eman zion. Jantokia lurrun hordigarriz bete zen.

**Muga ormazko, orma harrizko**
**harrizko lurrezko herri**
**erratzen latzen suak erretzen**
**mortu lehorrak luberri.**
**Bidasoako muga zatarra**
**gaitz bakar balitz gaitz erdi**
**noiz arte behar dugu gizonok**
**galdu hainbeste izerdi?**
**Banku guztiek su hartzearren**
**jango nituzte aker bi.**

Haitzartek erratz gartsua airean dantzatuz, buelta osoa eman zuen mahai inguruan. Bigarren bueltatik aurrera, Lezaldeko neska-mutilak atzetik zerraizkion, jauzika eta zantzoka, hurrengo errepika eta bertso hauen doinura:

Errepika:

**Har dezagun, har dezagun**
**penak hiltzeko asti**
**begite lan jaunkumeek**
**guk egin dugu aski.**

Bertsoak:

**Mila eskuk pilatua**
**aho lapur batzuk jan**
**sasimuga zatarrena**
**daramagu sorbaldan.**
**Beti morroi segitzeko**
**zertako hainbeste lan?**
**Hobe dantzan ekin eta**
**ardoa lasai edan.**

**Bi eskutan bata jarri**
**digute lanerako**
**bigarrena bekokiko**
**izerdia kentzeko.**
**Guk zer erru dugu lapur**
**jaio ez ginelako?**
**lehen ere aski egin**
**dugu inorentzako.**

**Labariak sua pizten**
**suak urtzen burdina**
**izerdia da guretzat**
**biziaren berdina**
**Gaur gizonak omen gara**
**tximinoak antxina**
**ez genuke hainbeste lan**
**tontoak ez bagina.**

**Haritz enbor bat zulatzen**
**ari dira bost okil**
**seigarrena okilama**
**hatzeman nairik dabil.**
**Gizon denak behar ditu**
**buru eta barrabil**
**hainbeste lan egin baino**
**hobe duk goseak hil.**

**Izerdia dela gazi**
**eztia berriz gozo**
**berdin jotzen du makilak**
**erdi izan nahiz oso**
**Langileak ziren gure**
**aita eta aitaso**
**hauts ditzagun jaun guztiak**
**nahiz denok sartu preso.**

## LINA

Afalondoa amaitu eta Lezaldeko neska-mutilak etxeratutakoan, Jonek ez zeukan oherako gogorik. Tabernandreari gau on eta ba zihoala hor nonbait esan zion. Gauerdian Baionako kaleetan zebilen, etxe horietariko baten bila. Hementxe. Muturra sartu zuen eta:

— Bah! Behin datorrenak hoberik behar dik. Kanpora! Gauzainek jakingo diate hori ondoen. Aizu! Mesedez, zera...

— Ah, bai! —erantzun zion gauzain aspertuak—. Segi kale horri, laugarren kale ahoa ezkerrera hartu eta eskuinean monjetxea ikusiko duk. Hurrengoa duk putena.

— Nik iii (elkarren sukurtsalak ote dira, ba?). Beno, bai, baina nik putenaz gainera, puntarengoa galdetu nahi nizun.

— Horiek beti zeudek puntuan, mutil! Erloju nazionalarekin batera zebiltzak.

— Ah, bai? Eskerrik asko.

Halako barre algara bota zuen Jonek, metro batzuk urruntzean. Ea hemen putekin baino gauzainekin plan hoberik dagoen! Pixka bat ibili zen eta:

Honexek zirudik puntarengoa. Eup! —Kanpora berriz ere—. Formalitate gehiegi zegok hemen.

Noizbait aurkitu zuen gelditzeko modukoa. Kuba libre bat eskatu zuen. Bular arteko erretena zileraino ageri zuen pantera eder batek zerbitu zion. Gero zerbitzaria aurrez aurre jarri zitzaion, bular multzoak mostradore gainean kokaturik. Jonek atzeruntz egin zuen oharkabez. Katuekin bai, baina panterekin ohitu gabe zegoen hain hurretik.

Mostradore aurreko egongu luzean, bikoteak zeuden, mahitxoetan eseriak, ohaldi on baten alde brindatuz edo ostea gozatuz. Dozena erdi ale ederrek ilargi laurden bat egiten zuen, mostradorea eta sarrera menderatuz eta alderdirik erakusgarrienak luzituz, besteak honenbeste franko ordain zezatenentzat gorderik.

— Ea zenbat daukadan.

Gizon kazkar ba komunetik bueltan zetorren. Nekez antzeman zekioken nora begiratzen zuen. Komunera aurretik erdi edanik utzitako basoari heldu zion. Hustutakoan, hondoko ginda gorria harrapatu ezinik zebilen zotz batez. Mantenu gutxi eta jario asko, errejimen eskasa gorputza edertzeko —pentsatu zuen Jonek. Frantsesez eupada egin zion eta gizontxoak euskaraz erantzun.

— Arraioa! Euskalduna? —galdetu zion Jonek.

— Jakina! Euskaldunok ere edonon ibiltzekoak gaituk.

— Tratu ona?

— Onena. Nik beti egiten diat onena.

Gizon kazkarrak gailentasun haundiz eman zion bere sistima bitxiaren berri. Lagun artean etortzen omen ziren. Besteak orduantxe ari omen ziren beren lantxoan.

— Tontotzarrak! Ni komunean moldatzen nauk ederki neure kontura eta berrehun franko aurreztu, loterian jokatzeko.

Jonen algarak hango puta eta putaner guztiak asaldatu zituen. Hasiera polita. Orduerdiren bat geroago, gela go-

rriska batean sartu ziren. Emakumea, bata luze arina erantzi, tolestu, ohadarrean utzi eta ohean etzan zen, bularrez gora eta hankak zabalik, bi eskuak garondopera zituela. Jon alboko sofa bikoitzean eseri zen.

— Ez al duk biluztu behar? —galdetu zion Linak

— Ez zegon presarik. Edukitzekotan ere, neronek behar niken.

— Herorrek agintzen duk.

— Ni ez naun ezer agintzera etorri.

— Nola eskatu duk gau osorakoa, autorik gabe? Ba nian gogoa, haize pixka bat hartzeko.

— Nik ez dinat gau osorakorik eskatu. Ordu erdi barru bueltan egon behar dinat.

— Nola ordaindu duk orduan horrenbeste?

— Gehiago ez neukalako. Neukanetik, onena eskatu dinat.

— Xelebrea! Ez al haiz defraudaturik gelditu?

— Ez, horixe! Aitortzen dinat ez dudala bi mila frankoren damurik. «La maja desnuda» labur uzten dun.

— Nor duk hori?

— Heu, Goyak begiratua.

— Nor duk Goya?

— Emakume biluziak hainbeste gustaturik, bat beretzat bereziki pintatu zuena, noiznahi begiratu ahal izateko.

— Gauza politak dituk horiek, baina desengainua sartu didak.

— Zergatik?

— Begiratzeko baino gehiago berotzen ez bahaut...

— Ni ez naun horretara etorri.

— Zertara, ba?

— Egotera.

— Ja, ja, jai! Nortzat edo zertzat hartu nauk, ordea?

— Konparazio eskasa dun, baina kubalibre bat eskatu

eta edan gabe uztearren, inork ez din zeresanik, ordaindu baldin bada. Hi ordaindu haut eta besterik gabe konformatzen banaun, heuretzat lan errezagoa.

— Gauza ederrak ikusteagatik ordaindu duk!

— Ni putak ikustera etorri naun, ez andere ondo heziak. Zergatik ez dinat ikusteko kapritxorik izango, beste batzuk larrua jotzekoa daukaten bezala?

— Eta zergatik ez bi kapritxoak batera bete?

— Bigarrenerako hurrengoan etorriko natzain.

— Zigarro bat nahi al duk?

— Hori bai. Eskerrik asko. Nire partetik, jantz hinteke.

— Zergatik? Gu jatorrizko pekatuaren aurrekoak gaituk, mutil. Hi geroztikoa bahaiz, begira ezak ohapera.

— Ez dinat horregatik esan, hoztu ez hadin baizik.

— Hoztu hemen? Ederra bota duk. Gainera ez al haiz, ba, putak ezagutzera etorri? Bidezkoa duk lanbide bakoitzekoak beren uniformez ezagutzea.

— Jakin al zezakenat zer lanbide huen, uniforme hori «jantzi» aurretik?

— Arrandegian lan egiten nian, eskola uztetik hogei urterarte. Hirurogeiren bat neska gintuan. Hogei urtekin, lanbidea aldatu nian. Nahiago diat gorputza entregatzea, izerdia baino.

— Hemen ere esplotaturik jarraitzeko.

— Jakina! Esplotatzailea ez denak esplotatua izan beharra dik. Baina arrandegian baino gutxiago hemen.

— Ez al huen beste irtenbiderik?

— Zeuden denak aztertuta gero, hauxe hautatu nian. Gu baino errukarriagorik ba zebilek munduan. Gertatzen dena munduko gaiztakeri guztia putok bizkarreratu dugula edo digutela, baina hori beste kontu bat duk.

— Gure osaba Bartelek ere esaten zinan auzia ez dela zueri lana kentzea, denei eragitea baizik.

— Gure lana burdingintza baino beharrezkoagoa duk. Zer egin behar diate burdingileek gu gabe? Asteko izerdiz eta nekez segregatutako haziaren deskarga epela hartzean, lan sozial bikaina egiten ari garela pentsatzen diat.

— Inoren izerdiz eta nekez segregatutako hazirik ere hartu beharko duzue. Ugazabak, jauntxoak, taketak, txibatoak eta horrelakoak maizago izango dituzue, bestelakoak baino.

— Bai noski, baina lanbide honek ere bere legeak ditik eta eutsi egin behar. Nik ulertzen ez dudana duk zergatik gizonezkook ez duzuen lanbide paralelorik montatzen.

— Putoak?

— Edo pitoak! Zergatik ez diate emakumeek ere aukera berdinik izan behar?

— Iraultza bukatutakoan, zin egiten dinat antolatuko dugula hori ere.

— Iraultza bukatutakoan, ez duk putarik ez putorik beharko, ondo bukatzen baldin bada behintzat.

— Ez habil gaizki. Bitartean zeuden hemen istiluak.

— Bitartean beharrezkoak gaituk gu. Zerbaitegatik esan zian norbaitek putok aurrea hartuko diegula haren erreinuan. Egia hura haintzat hartu balute, ez ziaten haren amaren birjintasunik gure desohoretzat asmatuko.

— Santa Virgo virginun, gure atsoa puta dun! —esan zuen Jonek, erlojuari begira zutituz.

— Joan al hoa?

— Gelditzeko arrazoi haundiren bat ez badun, bai.

— Zergatik ez haiz biluzten?

— Eskerrik asko. Benetan ere ondo emantzat zeuzkanat bi mila frankoak, hi ezagutzeagatik.

— Baina orain neuk gonbidatzen haut.

— Barka, baina bete dinat neure gogoa.

— Nik ere neure gogoa eduki zezakeat, ordea, hik betetzen lagundu beharrekoa, nik hiri lagundu diadan bezala.

— Aizan, Lina. Hasieran esan dinat ez nentorrela horretara.

— Eta nik esaten diat batak ez duela besterik kentzen, aitzitik eskatzen baizik.

— Eskerrik asko berriro ere, baina nahiago dinat joatea.

— Ez daukak gonbitik ukatzerik, nahiz eta puta batena izan.

— Hurrengoan etorriko naun. Gau on. —Jon ateruntz abiatu zen.

— Nolako gau on? —Lina pantera zauritua bezala oldartu zen ohetik. Bata soineratu eta atearen eta mutilaren artean jarri zen—. Zertara etorri haiz hi? Ehizi bat ikustera? Integritate esperimentuak egitera? Lankide guztien ohorez, jakin ezak franko batzurengatik larrua jotzen utzi arren, munduko diru guztiengatik ere ez dugula adarrik jotzen uzten. Lotsagabea! Txulokumea! Buruzirina! Arraultze ustela!

Atea ireki eta aurpegira ttu egin zion. Jon paleolitikoa baino joanago zegoen. Eskilarak ikustean, buruz behera abiatu zen.

Linaren marraoetara, edozein ate nahiz zokotatik agertzen ziren putak, inurriak bezala. Amen batean, emakumeteri erdi jantzi erdi erantzi baten erdian aurkitu zen. Hain txilioketa erogarria zebilen airean, non haren belarriek ez baitzuten ezer berezten, lantzean hitz solte bildurgarriren bat izan ezik. Baso luze bat muturrak irristatzen pasatu zitzaion, alboko orman birrindurik. Iskanbila hartako zirritu batetik, lehengo gizon kazkarra hauteman zuen, oraindik mostradore kontran, komunera beste jiratxo bat egiteko denbora luzatzen nonbait.

— Arrazoia daukak, lagun! —hots egin zion Jonek—. Ez zegok hire sistima bezalakorik!

Kasik ohartu gabe eta ez nondik ez nola jakin gabe noski, atez kanpora jaurtirik gertatu zen mutila. Trafiko arau guztien aurka —halako frenazoa entzun zen, ba!—, kalea beste aldera gurutzatu zuen. Erlabio zulotik ihes egindako sentsazioa zeukan, baina bai poza ere, larrurik gehiena soinean zekarrelako.

— Onetik apartatu haiz!

Berriro itzultzeko eta gonbita onartzeko ere egon zen, gehiegi izan baitzen, izan ere, eskergabetasun hura. Nork jakin, ordea, gauzak ez zituen lehen baino okerrago jarriko?

— Hobe bakea. Gaitz ondo eginak eta on gaizki eginak ontze gaitza zeukatek.

## ESKELETOZ JANTZIA

Jon bere maletatxoa egiten ari zen, hilabete batzutan berea izan zuen ostatu gelan. Luzel ere bere gauzatxoak biltzen ari zen, bakarrik lo egiten hasi zenez geroztik berea izan zuen gelan. Bezperan Jonek esan zion:

— Bihar ba nihoan, Luzel.

— Nora?

— Ba dakin.

— Nahi al duk laguntzerik?

— Bai, heuk nahi badun.

Maiatzaren bateko oilaritean, eguzkia mendi osteak argitzen hasi zenean, Larraun berriko txakurrak zaunka zoliari eman zion. Jonen ama leihora jaiki zen. Larraun Zaharreko etxe gainean, bertan beherako landan zehar, neska-mutil bikote bat zetorren. Txakurrak urrundik ezagutu zuen Jon. Haren balakuek eta jauziek ez zeukaten paramenik. Luzeli ere laster etxekotasuna agertu zion Larraun badaezpadako arrotzengandik hortzez eta arimaz zaintzen saiatzen zen txakur bizkorrak.

— Bizi al haiz, seme? —hots egin zuen amak, atarira heldu zirenean.

— Bai, ama, eta luzerako esperantzaz. Hau ostatuz eduki nauten etxeko alaba duzu. Ez dut begi txarra edu-

ki, ez?

— Ez noski. Horretan eduki dukan begi hainbat suerte baldin badaukak, aita baino hobeki izango haiz. Nola menturatu zarete etortzera? Bazenekite zenbat joan-etorri egin duten!

— Lasai, ama. Mendia geure terrenua da. Gainera zu bezalako zaintzaile batekin! Idiak itzarrik al daude?

— Ez zieat inoiz lo konturik galdetu, beti itzarrik aurkitzen baititut. Zertarako behar dituk idiak?

Larraun Zaharreko goldeak hilak zeramatzan lurrik irauli gabe. Azkenengoz Jonek utzi zuen soro bazterrean bertan zegoen geldi, askiz, gardulatzez, ustaiz eta nolanahiko belartzarrez erdi estalirik. Eguzkia mendi ostean agertzear zegoen, Luzel aurretik eta Jon atzetik, goldaketan hasi zirenean. Idiek pausakera uniformeki nagiz tiratzen zuten.

— Aida! Heurt! —Lehenengo lur zerrenda luzea iraulia zen, ildo sakona hurrengo zerrendaren zain gelditurik.

— Aida! Gora! Behera! Heurt! —Bigarren lur zerrenda iraulia zen, bigarren ildoa zabalik utzirik.

— Gora Gorri! Behera Beltza! Aida! Ooo! Heurt!

Ehungarren zerrenda iraulirik, ehungarren ildoa zabalik.

— Gora, Gorri! Behera goikoak! Behera, Beltza! Gora behekoak! Aida! Heurt!

Berrehungarren zerrenda iraulirik, berrehungarren il-

doa zabalik.

— Aida! Gora! Behera! Ooo!

Eguzkiak bertikal jotzen zuen, goldaketa bukatu zutenean. Bakoitza idi baten adar artean kokaturik eta haien bizkar gainetik zehar, lur irauliari begira zeuden, abereen arnasots beroa sabelean sentituz.

— Ez zegon Larraun Zahar berritzerik, dena irauli ezik.

— Ez eta gizarterik ere.

— Ba zegon alde bat, ordea, gizartean geu garela golde, idi, lur eta dena.

— Ez al haiz gehiegi pentsatzen ari?

— Egin dezagun ardo zurrut bana.

— Hik edan eta nik kantatu.

**Bekokitik haitzurrera**
**izerdia lurrera**
**zahagitik muturrera**
**ardoa sabelera.**
**Bahaut maite, banaun maite**
**goazen Akelarrera.**

— Orain nik edan eta hik kantatu.

**Iraul lurra, golde berri**
**gizona, ardo zahar**
**Edan, iraul, ardo, golde**
**ahuntzak haitzetan zehar.**
**Lur, izerdi, iraul bedi**
**ardoz dezagun su har.**

Eguerdiko ordu bietan heldu ziren errepidera. Beherago hiru bihurgune eta lautada luzea ikusten ziren ukondo batean ezkutatu ziren, haritz baten ostean. Pixka batean zain egon ondoren, Jonek hots egin zuen:

— Madarikatua! Ez dakik norenganuntz hatorren!

Errepide erdian plantaturik, alto eman zioten, baztérrera seinalatuz. Jonek leihatilara hurreratu eta galdetu zion:

— Ezagutzen al nauzu?

— Ez dut, ba, ohore hori —erantzun zuen Lezondoko idazkariak, mamut haroa baino pasatuago.

— Ez, eh? —Eta Luzeli: Katuak oroimena jan omen zion. —Berriz idazkariari: Kasurako berdin da, hau ezagutuko baituzu.

Pistola sendoa apuntatu zion paparrera. Auto batek goruntz eta kamioi haundi batek beheruntz parean gurutzatu behar zuten.

— Kontuz oihu egiteaz —agindu zion Jonek—, laguntza guztiak alperrik diren tokira joan nahi ez baduzu.

Autotik irten erazi, bi eskuak atzean lotu eta mendian gora sartu ziren.

— Zer nahi duzue niregandik? —galdetu zuen idazkariak.

— Laster jakingo duzu. Dena dela, pentsa dezakezu ez ginela hain ehiza arriskutsura menturatuko, zerbait nahi ez bagenu.

— Mesedez! Ene emazte eta seme-alabengatik!

— Isi eta korri! Horiek ez dira momentuari dagozkion ardurak. Ba dakigu emaztea eta sema-alaba dituzula. Ez dakiguna da ea zeuk ba ote dakizun besteek ere ba dituztela, zentsoaren arduraduna zara baina.

Joan eta joan, gora eta gora, Larraun Zaharreko lurretara heldu ziren. Goizean goldaturik utzitako landa

nagusiaren erditik, iturri aldera jo zuten, haritz haundiaren azpiraino.

— Iritsi gara!

— Mesedez! Ez nazazue hil!

— Bizia errespetatzen bezala, bizidun batzuk ez errespetatzen ikasi bagenu, beste modutan legoke mundua. Lasai. Hiltzeko, merituak egin behar dira. Penagarria litzateke lana zer den jakin gabe hiltzea. —Esposak kendu eta haitzur haundi bat eman zion—. Ba al dakizu lur mugitu hori zer den? Ba al dakizu hortxe ehortzi nuela zuek gero hain katolikoki elizlurtu zenuten osaba Bartelen gorpua? Ba al dakizu zulo huts horrek beste gorpu bat eskatzen duela? —Idazkariak era batera negarrari eta garrasiari eman zion—. Ez ikaratu. Zure egitekoa alborago dago. Haitzur ezazu hementxe.

Idazkariaren moldagaiztasunak argi erakusten zuen lumatik haitzurrera zer alde dagoen. Baina derrigorra harentzat ere eraginkorra izaki, kunk eta kank hasi zen lanean. Haitzurrak baino izerdi gehiago ateratzen zion ikarak. Bi metro luze eta bat zabal, hiru laurden sakondutakoan, behi eskeleto bat agertu zen.

— Ezagutzen al duzu hori? Ba al dakizu horixe dela zuk hain profesiotasun finez pertsegitu zenuen behia? Osabak, bere burua hil aurretik, beste mundura kontu garbiak eraman nahirik, bere zorrak kitatzeko ardura utzi zidan eta nola behi hauxe besterik ez zeukan, ezin izan dut ardura hura bete arte kontzientzirik lasaitu. Hezur hutsean dago, baina hutsa baino gehiago duzu. Falta zaizkion larrumamiak harrei erreklama.

— Zertarako behar ditut nik hezur hauek? —galdetu zuen larri idazkariak.

— Ez al duzu oraintsu esan emaztea eta seme-alabak dituzula? Zergapekoak zertatik bizi diren jakin dezazun.

Eskeletoa desehorztean, hezur multzo batean desegin zen. Lezondoko idazkariak guzti hura zertan amaituko zen gutxien antzematen zuenean, biluzteko agindu zioten. Okerrena pentsatu zuen, zulo hartantxe ehortziko zutela bizirik. Anartean hain inpuneki babestu zuten indarrek abandonaturik aurkitzean, beste munduko botere on eta gaizto guztien laguntza deihadartuko zukeen, pistola hark, orain Luzelen eskutik begiratzen zionak, arnasa ere eragotzi ez balio. Soinekoak banaka erantzitakoan, Lezondoko idazkari jauna larru gorritan, edo larru zuritan, gelditu zen. Berriro esposaturik, behiaren hezurteria lepotik behera gorputz bueltan eskegi zioten. Kinkilari xelebrea gelditu zen idazkari jauna, orrazien, orratzen eta abarren ordez, matrailez, garezurrez eta saihetsez bildurik. Usaina ere ez zen nonbait ederregia izango eta idazkari gaizoa okadaka makurtu zen, belaunak ere oka egin beharrez.

— Ohiturarik eza —esan zion Jonek—. Neuri ere komisartegian berbera gertatu zitzaidan. Oka egiten ez duenak ez dauka sentimenturik.

Idazkariak, zeuzkan denak eta bere burua ere ia oka egin arren, lau hitz esateko adorea izan zuen horratio:

— Zer egin behar didazue?

— Hara, idazkari gurgarria. Gezurra dirudi hainbeste letra eta zenbaki egiten dakiena horren burugogorra izatea. Ez al zara oroitzen zenbat aldiz Larraunera etorri zinen, edo agoazila bidali zenuen, hezur horiexen bila? Hor dituzu, ba! Derrigorrez kobratzen duenari bidezko da derrigorrez ordaintzea. Eta zutaz ez baigara fidatzen eta gure osaba zenaren zehaztasun fiskala mundu guztiaren aurrean garbi gelditu dadin, ikusteko lekura eramango zaitugu. Horixe da dena. Ibiltzen!

Igondako bide beretik jetxi ziren. Hezurteria ibilkari

hark barregura ematen zion Luzeli, batez ere idazkariaren ipurdi potoloen distiraz.

— Iraultza hau baldin bada, hamaika jolas ba diagu.

— Zapalkuntza ere zer dun, ba, lotsagabe batzuren jolasa besterik? Hamaika barre eta burla egin zion honek herriari. Eta egingo diona, hauengan ez baitago konbertsiorik, okerragora izan ezik. —Idazkariari uzkian belaunkada bat emanik, gaineratu zuen: —Emaizkiok eskerrak Jainkoari, iraultzaileen esku erori haizelako.

Arratsaldeko laurak aldean iritxi ziren errepide nagusira. Goitik nahiz behetik ikuspegirik onenean zegoen kilometro harriari lotu eta han utzi zuten. Ikuskizun ezin bitxiagoa gelditu zen bide ondoan, buru gainean, I.N.R.I. ordez, kolore biziko kartel haundiak jartzen zuelarik:

**JASO DITUT JASOTZEKOAK**
**LARRAUNGOAK ETA GAINONTZEKOAK**

## AURKIBIDEA

Nobela honetan baserriko bizieraren ulerpen idilikoari buelta ematen zaio. Baserriko bizimodu gogorra, urria, bildurpekoa eta gizarte osoaren morrontza morala eta materiala ageri da. Fidel Gaizto protagonista nagusiak gizarte horri leher eragiten dio, oso bitxiki noski, fantasiaz, umorez, ironiaz eta denen aurkako errebeldiaz, animalien aurka izan ezik. Haren nortasun bakarti eta zaurituan gizarte erruraleko azpi bilbe nahasia eta tirakatua nabari da, hil ala bizikoa.
Fidel Gaiztoren errebeldia eratu gabe eta erdi basokoari haren iloba Jonek biderapen antolatuagoa ematen dio. Nobela honek Euskal Herri erruralaren tripak bistaratzen ditu, erligioa, bildurra, politika, grinak, gorroto-maitasunak, umorea, esplotazioa, ironia gupidagabea, katxondeoa eta dena uholde berean oldartzen delarik.


elkar s.a.

EUSKAL LIBURU ETA KANTUEN ARGITALDARIA, S. A.

Esterlines, 10
Tf. 426319
Donostia

Pannecau, 52
Tf. 254390
64100 Baiona